saltzera eramango zituzten abelburuekin hizketa alaian eta kantutan.

-Egun on maitetxo, kontent al hago?

-Ez ama, guztiz kontra.

-Triste hago?

-…

-Eta orduan zergatik habil kantari?

-Abereak alaitzeko.

-Triste ote beraiek ere?

-Bai, oso.

-Zergatik ba?

-Etxera itzuliko ez direla sumatzen dutelako, eta horrela, alaiki abestuz gero, beste leku hobe eta alaiago batera doazela pentsarazten zienat.

-Baina haiek ez diten pentsatzen, laztana; abereak ditun eta.

-Bai… agian pentsatu ez –esaten zion animaliak gurdian lotzen zituen artean, serio pentsakor-, baina sentitu pertsonok bezainbeste.

Eta tankera horretan zegien herrirako bidea, animaliekin solasean eta kantuan, noiz jesarri gurdiaren osteko aldean noiz oinez abereen parean.

Eta berdin azokan bertan. Osterantzeko umeak olgetan ziren bitartean, Kattalin aitari zegokion azoka-postu barnean egoten zen, animaliak zaintzen eta kontsolatzen. Eta emazteak alabaren jarrera hau gustuko ez

zuela jakin arren, Prontziok ez zion ezer esaten, ikusia baitzuen Kattalin azoketara joaten zen aldietan beste ganaduzaleek baino abelburu gehiago zituela saltzen. Besteen animaliak plaza erdian egonagatik izu eta urduri zeuden bitartean, berarenek, alabaren errekaituak zirela medio, taxu kementsu eta osasuntsuagoa bazuten.

Azokatik etorreran etxerainoko bidea bestelakoa zen, alabaina. Kattalinek joaneran beste triste zirauen, baina orain ez zuen zertan itxura egiterik, ez baitzuen nor animatzerik.

-Ez triste egon, maitetxo, bizitza horrelakoxea dun… -honelakoak eta antzekoak esaten zizkion, alabaren erabateko isiltasunak ozen adierazten zuen mina baretzeko asmoz; baina aldi berean, hitzokin baretu baino, mina handiagotuko ez zion izukor, hitz-urri galanta izan ohi baitzen Prontzio gaixoa.

-Beharrezkoa dinagu gainera -segitzen zuen-. Animaliak ezin ditun-eta betiko gurekin geratu. Eta lortu ditugun sos apurrekin etxean daudenei bazka erosiko zienagu, baita gure jatekoa ere hortik lortu. Horren guztiaren jakitun bahaiz, ezta?

-Bai aita, jakitun nauk.

Bai, hori guztia bazekien Kattalinek. Eta horrexek mintzen zuen sakon. Bizitza horrelakoxea zela jakiteak eta gauzak aldatzeko ezintasunak sumintzen zuten biziki neska. Onartezina zuena onartu behar izana jasangaitza zitzaion Kattalin gazteari.

-Egon lasai, denborarekin ohituko haiz eta.

Eta burua kulunkatuaz baieztatzen zuen bitartean, ezetz eta ezezka bere buruari isilpean. Berak ez zuen inoiz abere bat ere hiltzera eramango, lehenago bera hil nahiago; eta azoketara aita laguntzen bazuen erruki hutsagatik zegien, hiltzera kondenaturik ziren animaliek azkeneko bidai hori ahalik eta lasaien egin zezaten, besterik ez.

Behin batean bereziki nahigabeturik itzuli zen azokatik, hilabete gutxi batzuk lehenago hark berak munduratzen lagundu txekorra saldu izan zutelako. Holakoetan, etxera heldu eta kortara jo ohi zuen segituan, abereen artean pertsonekin aurkitzen ez zuen kontsolamenduaren bila. Baina orduko hartan ez zen ausartu, ez zuen txekor errugabe horren ama gaixoaren begirada kutepurinari eusteko adore nahikorik. Etxerako azken maldan egon bezain agudo, gurditik salto egin eta basorantz urrundu zen lasterka, haren negar malkoen lekukotzat ezta Azkar txakurtxoa ere ametitzen ez zuela.

-Ez urrundu, txiki, baso-haizea altxa dun –orro egin zion aitak, mendebaldetik hurbiltzen zitzaizkien hodei beltz lodiei aipu eginez-. Kattalin, ekaitza datorrela!

Baina neskatoak jaramonik ez. Korrika egiteari utzi zionerako aurreneko euri tantak erortzen hasiak ziren, azkon hotzak lez aurpegia zipriztintzen, haren suzko malkoen aurrean kontraste gozo lasaigarria egiten.

Zaplada batean giroa arras ilundurik zegoen, bat-bateko ekaitz bortitzak gaua aurreratu zuelarik; gau zerratu eta beldurgarria, hura. Gorriak ikusi zituen orientatzeko eta etxerako bidea kausitzeko euripean eta trumoi larrien artean, bere buruaren gainean bertan eztanda egiten zutela zirudielarik. Zorionez, hamar urte eskaseko umea izan arren, lar ibilia zen ingurune horietatik guztietatik, eta horri zein noizetik noizera ortzia erdibanatzen zuten oinaztarriei esker lortu zuen bere burua bide onean jartzen.

Halako batean, tximista baten tupusteko argitasunak irudi bat erazagutu zion haren eskuma aldean berrogei bat metrora. Istant batez besterik ez zuen irudia ikusi, aski baina lau zangoko animalia bat zela jabetzeko. Begiak iluntasunera berriro egokitu zirenean han zirauen animaliak, geldi-geldi eta neskatoari so. Ilunpean begi bi harengan iltzaturik, gorri-gorriak, auskalo nondik bereganatutako argitasun ttipia islatzen zutelarik. Barruko argitasuna izango zen akaso, asetzen lagunduko zion harraparia harrapatzeko piztiaren kemen gosetiak piztutako kandela bi, suetetik ihes egin-

dako txingar gartsuak iduri. Horrela egon zen Kattalin eternitate batez, bera ere geldi-geldi, laborriak jota piztiaren begiei nahitaez begiratutik; ilunpean, euripean, beldurra are larriagoa bilakatzen zela garunetik oinaztargi moduan igarotzen zitzaizkion ideiak zirela kausa. Horrela egon zen eternitate batez, bereak egin zuela ustetan, berriro tximista batek ortzia erdibanatu zuen arte.

Bere harridurarako, eta lasaitasunerako, aurrean zeukana piztia ezik hura bezain izuturik zegoen moxala zen, hilabete gutxiko zaldiko beldurtia. Poliki eta tentuz hurbildu zitzaion. Behin haren alboan egonda, animaliak hanka bat zaurituta eta harri batzuen artean atziturik zuela ikusi ahal izan zuen. Artega eta beldurrak zegoen moxala, dardara bizian, baina ihes egiteko ezindua. Hanka askatu aurretik ferekak egin eta hitz leunak esateari ekin zion, eztitasun osoz. Zalditxoaren dardara baretzen hasi zen apur bana eta orduan, berdinki maitekiro eta are tentu handiagoz, atzipean zeukan hankatik behera oparitu zizkion ferekak, ia oharkabeko mugimendu trebearekin askatu zuen arte.

Hori egin ostean eta ezer esateke, bira eman eta etxerantz jo zuen, geldiro eta biderik errazena aukeratuz aldiro.

..................

-Zaldi hori ez dun basatia, inolaz ere, oraindik ez zagon xakiturik baina jabea behar din nonbait –aitak esan suete aurrean, amak alabari lehortzen laguntzen zion artean eta neskatoarengan jadanik agertuak ziren hotzeriaren lehenengo zantzuei aurre egiteko salda berotzen zen tartean.

-Baina… -dominististiku!- nik aurkitu diat, neuk askatu eta nirekin etorri duk bere kabuz.

-Tira, normala dun hori, horretan animalia guztiak berdinak baititun, baita

gu ere oso antzekoak; izualdietan otzan-otzan babesa eskainiko duenaren atzetik joan. Baina moxal hori odol onekoa dinagu, jabea behar din beraz.

-Bada jabea bazeukaan hobe arta izan zezan. Mendian zegoen jare, nik aurkitu diat eta nirekin geratuko… - dominististiku!

Azken dominististikuarekin amaitutzat eman zuen eztabaida Kattalinek, amak aitari itzalgaizka zuzendu gaitzespen begiradak lagunduta.

Hiru egunez egon zen gaixorik, ohetik altxatu ezinik. Laugarreneko goiz-nabarrean, gurasoak oraindik ohean zeutzalarik, ukuilura hurbildu zen kostata eta beldurrez. Gaueko itzal mutu salatariez inguratuta nekez egiten zuen korridore mehean aurrera, haren sabel hustuan ezer inarrosi ezin zuten okada eta zorabioen artean. Eskailerei ekin baino lehen geldiune bat behar izan zuen, bertigo larriak hartuta, etxea urruneko itsasoan ekaitzak astindutako ontzia bailitzan, dantza eroan murgildu ontzi txatxarra. Berez, ez zuen inoiz ontzirik ikusi, ez eta itsasoa bera ere, baina hainbatetan entzundako supazterreko kondairei esker irudika zitzakeen, ama itsasertz eremu batean hazia baitzen. Eta hola, lemariak lema oratuko zukeen bezalako indarrez eskudelari helduta, lortu zuen eskaileretan behera egiten.

Kortako atea zabaltzean beldurrak zegoen neskatoa, ea dena sukarrak eragindako ameskeria izango ez zen izukor. Behin barneratuta etsipena gailendu zitzaion, bertako argi-itzal astunpean ikusten zituenak betiko abelgorriak baino ez ziren eta. Segituan, alta bada, arnasots ezezaguna aditu zuen bazter batean, azken hiru egunotako sukar eldarnioetan horrenbestetan entzundako irrintzi apal berbera.

-Kaixo polite, ongi al hago? -hasi zitzaion leun, gozoki, zauritu hankan egindako sendaketa arreta handiz aztertuz- Nork osatu dik ba, aitak? Beno, ez duk aditzera eman nahi duen bezain zorrotza, ezta? Egon lasai, egon, orain salbu hago eta. Aurki guztiz osatua egongo haiz eta mendiz mendi trostan ibiliko gaituk, bai, ikusiko; neu jada irrikan nagok. Inguruneetako bazter guztiak erakutsiko dizkiat, beste inork ez daza-

guzkien zidorrak, munduko ur garbi eta freskoenen iturri ezkutuak. Eta egunen batean mendi hauetaz haraindiko lurrak ere zapalduko ditiagu, bai, ikusiko, ibar estu honetatik itzuri joaten lagunduko nauk egunen batean. Baina horretarako denbora falta duk, denbora luzea, horretarako dezente hazi behar diagu-eta biok txiki samarrak baikaituk oraingoz munduan barna ibiltzeko. Hanka hori ongi osatu beharra duk aurrenekoz, eta gero…

Bat-batean zaldiak belarriak mugitu zituen artega, aldi berean burua altxatu zuela ateari so geratuaz. Atea zabaldu eta ama agertu zen bertan, irriñoa ezpainetan.

-Hemen hago, non ba bestela… Zer moduz hago?

-Ongi ama.

-Goserik?

-Bai! –erantzun zuen alaikiro, une horretan haren erraietako orroez oharturik.

-Ea ba, goazan gosaltzera. Hemen geratuz gero moxal horrek izena beharko din, arean –esan zion ahapeka sukalderako bidean, aitak ez aditzeko moduan.

-Bai… Itzurde din izena –arrapostu berak, ahapeka ere konplizitate keinua itzultzen.

Arduraturik zegoen Prontzio moxala zela kausa, zaldi eder hura basatia zela sinistu ezinda. Noizbait ikusia zuen ingurumarietan geratzen zen zaldi askeren bat edo beste eta horiek ez ziren, ez, Itzurde bezalakoak. Planta ederra baitzuen zalditxoak, odolgarbia zirudiela. Hazitarako zalditoa bilakatuko bide zen zalditxotzat zuen hura, ez basoetan ikus zitezkeen pottoka trauskil horietako bat. Ez, ezin basatia izan, jabea behar zuen nonbait moxalak, jabe boteretsua gizonaren irudiko. Eta beldurraz

zegoen ezein mementoan erreklamazioan agertuko ez zitzaion; arras zilegizko erreklamazioan, bera egoera zail kaskarrean utziko zuena.

Ondorengo hilabeteetan adi ibili zen Prontzio, azokaz azoka belarriak erne moxal galdu bati buruz suerta zitekeen solasaldi ororen barrandan. Ongi irabazitako zaputz ospea zuen gizona ganaduzaleen berriketaldi guztietara hurbiltzen hasi zen, baita zalapartatsuenetara ere bere ogibide berekoen ustekaberako. Mihia higitzeke baina entzumena zorrotz, galduriko zalditxoaren berri inork ukatekotan ganaduzaleek ukango zutela jakinda. Behin eskualde osoko ganadu ferixak kurriturik baretzen hasi zen, inon moxalaren aipamena egiten ez zelarik. Halarik ere, zapaltzen zituen herri eta plaza ororen autu-mautu eta esamesen jabe bilakatu zen Prontzio, inoiz jaramonik egin izan ez zien istorio ikaragarri zein pasadizo lizunen jakitun, etxera itzulirik emazte-alabaren dibertimendurako.

Denboraren bueltan, neskatoa ortuan zebilen goiz argitsu batean aita hurbildu eta honela mintzatu zitzaion, serio plantan:

-Hartu moxala eta erdu saroera, lana dinagu eta.

Aitarenera heldu zenean bihotza estutu zitzaion Kattalini, gertatzear zegoena berehala konpreniturik. Saroeko zoko batean aita, soka lodia eskuan; haren gertu su txiki baten hondarrak, kea zeriela; eta txingar artean xaki-burdina, ordurako gori-gorian.

Lanak iraun zuen denboran biek ala biek ez zuten fitsik esan. Ezta moxalak berak ere, akaso egoeraren seriotasunari erreparatuta irrintzirik jaulki ez zuela.

Motza izan zen ataka halere, batez ere Prontzioren abileziari esker. Zalditxoaren lau hankak lotu eta albokera eratzan zuen artezki. Animaliaren zerrara hurreratzen zen bitartean, Kattalinek lepotik heltzen zion ahalik eta sendoen. Burdin goria ezarri zionean, Kattalinen gorputzera hedatu zen dardara jasan zuen zaldiak, neskatoarengan malko ttipiak isuraraziz. Ttipiak izanagatik ere animaliaren narrua urratzen zuen

burdina bezain alatsuak ziren, negar malko kiskalgarriak. Behin amaitu eta hankak askatuta, zaldia zutundu zen salto batez, zerran nabaritzen zuen azkura baretu guran edo airean ostiko batzuk emanez.

Latza izan zen Kattalinentzat moxala xakitzearena, eta kontent zegoen alta. Pozarren ozta. Horren bidez, aitak, betiko lez ezer esateke, amaitutzat ematen baitzuen animaliaren jabetzari buruzko auzia.

Ordudanik urteek alaiki samar zegiten aurrera Kattalinentzat. Bere denbora osoa, beharrak amaiturik zuen astia Itzurde eta Azkarrekin ematen zuen, inguruetako mendixka guztiak kurritzen, basoetako bazterrak miatzen.

Itzurde biziki maitatzen ikasi zuen agudo, abelgorri dohakabeen kalterako. Moxalaren etorrera arte eta gurasoez gain, azoka batean salduta ezein mementoan haren albotik kenduko zioten maitasun objektua ikasi zuen maitatzen. Eta animalia horiek buru-bihotzez maitatzen bazituen ere, errezeloz eta beldurrez beteriko maitasuna zen. Galera ziurraren suzko marka zeraman maitasuna, hura; aurreikusitako banaketak tristatzen zuena. Baina moxalarena arras ezberdina zen, zerran zeraman xakia osterantzeko abereek zeramaten berdin-berdina izan arren guztiz kontrako esanahia baitzuen. Aise ohartu zen neska askoz atsegingarri eta betegarriagoa zela maitasun hura. Eta moxalarengan jarri zuen gogo osoa gogo betez, lanaz gain abelgorriak ia alboratzeraino ere.

Halere, azoka guztietan zirauen Kattalinek, aitaren alboan gurdian, saltzera zihoazen abereez errukituta, haien atzerabako bidaia nola edo hala alaitzeko saiakeran.

Azoketan baina, haren adin bereko neska-mutilak ez zebiltzan olgetan jada, gorteiatzean baizik, atarramentuzko ezkontzan pentsaturik, baita zegoeneko ezkonduak haietarik ez gutxi. Berak ordea, berean segitzen zuen, azoka postuan aldiro jendearengandik aldendua, animaliei gupidaz kantari.

Neska polit dotorea bilakatua zen ordurako baina, eta Kattalinek besteengan inolako arretarik jartzen ez bazuen ere, harengan bai jarri besteek. Emaztegai bila zebiltzan mutilek batez ere. Halarik ere, gorteiatzearen ez-idatzizko arauak jarraitzen ez zituenez gero eta mutilen saiakeren aurrean jaramonik ez zegiela ikusirik, laster ematen zuten amore, etsiturik, ez bazen haserreturik. Eta saiakera hutsal bakoitzarekin egiten zuen gora Kattalinen ospeak herri guztietan. Laster hasi ziren haren bizkar txantxak egiten, itzalgaizka hasiera batean, berak ohart eta jakin ez zezan; lotsa galdurik haren aurrean ere gerora. Horrelakoak baikara lar usu pertsonok, ezberdinaren mesfidati. Abereak bezalakoak maizegi, taldearen geriza bilatzen dugularik. Hasiera batean babesa lortzearren akaso, onartuak izatearen truke nork bere nortasuna galtzeraino. Horregatik beharbada, norbait taldetik edo ohiko jardunetik aldentzen denean mesfidati tratatzen dugu, erasokor, bere portaerarekin geurea, taldearen oinarria bera, zalantzan jartzen duelako. Ezberdina dena arrozteko, arrotza kanporatzeko.

-Kaixo Kattalin, utzi abere mozolo horiek eta erdu gurekin dibertitzera –esan zioten behin.

-Ez –erantzun berak, labur-motzean.

-Zer ba, pertsonak baino animaliak nahiago ala?

-… -eta berak, badaezpada ere, erantzun ez.

-Bada, aldatzen ez bahaiz… neskazahar geratuko! –batek.

-Neskazahar ez, neskattalin berez! –beste batek.

Eta arrakasta ukan zuen ateraldiak, antza, eze hortik gutxira beste herri ezberdineko azokan haren hurbil igaro umetxo batzuei honela entzun baitzien, kantutan:

"Kattalin neskattalin
gaztetan muturbeltz
atsotan horren berdin
eta senarrik ez"

Denboraren poderioz kontua hedatu zen eta ordutik aitzin eskualdeko neskazaharrei halaxe iritziko zieten, neskattalin.

Horrek guztiak bost axola zion Kattalini haatik; baita bere aitari ere. Hasieran arduraturik ibili zen Prontzio, neskatoa izanda Kattalinen patua ezkontzea zela konbentzituta baitzegoen. Baina urteak joan urteak etorri eta horrenbeste desiratutako semea ez zetorrela ikusirik, ideiaz aldatu zen pixkanaka. Azken finean, alaba bakarra izanda egunen batean berak jaso beharko zuen etxea oinordean, eta ezkonduz gero… Ez, Prontziok ez zuen batere gogoko bizitza oso baten lana eta fruitua edozein zokormazoren eskuetan geratzea. Eze etxean ez ziren esne mamitan bizi, baina ez eta onbehar ere; eta ganaduzalearena oporrik gabeko ogibide gogorra izan arren, etxea eta azienda ez ziren ondasun ezdeusa, ez eta ezkonsari makala ere.

Sarritan hurreratzen zitzaion semea ezkongai zuen gizonen bat edo beste gaia zuzenki edo zeharka aipatuz, haren jabetzen gutiziatsu. Eta bera ezetz eta ezezka etxeko eran: labur-motzean.

-Baina senarra bilatu beharko diok noizbait, ezta?

-…

-Aski heldua duk ba jada…

-Horixe bera, heldua duk alaba eta ezkontzekotan berak aukeratu gizonarekin izango duk, berak ebatz dezala.

………………

Goizalde batez, ukuiluko lanak amaitu berritan Itzurderekin osteratxoa ematera irten zen betiko lez. Goizeroko trostaldia, eguneko unerik onena Kattalinentzat; benazki aske sentitzen zen istant bakarra, hura.

Aho-uhaletik helduta oinez atera zuen kortatik zaldia, tentuz eta motel apatxek zalaparta handirik sor ez zezaten, lo zeuden gurasoak ez itzartzearren. Etxe aurretik igarotzean begi bi azaldu zitzaizkion harengan itsatsirik, goizeko ordu txikien ilunean dirdiran argizagi bi iduri; dirdira malenkoniatsuko argizagiak alta. Azkar zen, ataurrean paratua. Adin gupidagabeak abaildua han igarotzen baitzituen egunak txakurrak, etxaurrean etzanik, lanean aritzeko edota mendietan barna behinolako txangoetan ibiltzeko moduko giharrik ez zuelarik.

-Zaindu ongi etxea, e polite? –xuxurlatu zion neskak unetxo batez alboan belauniko, haren solas eta fereka eztien ordainean txakurraren miazkada heze beroak jasotzen zituela tarteka.

Txakurraren begirada zoliaren pean urrundu zen etxetik. Basoko mugaraino ailegaturik, salto batez zaldi gainean jarri eta egun horretarako aukeratu ibilbidean aurrera egin zuten. Zapasalto zuhurrean hasiera batean, egunsentiak bidea argitu heinean bizkorrago, arrapalada bizian amaitzeraino. Legoa batzuk geroago eta zaldiaren ufadak ozentzen zirela oharturik, leundu zuen pixkanaka abiadura Kattalinek, pausoan jarri arte.

Goiza arras argitua zegoen ordurako. Ortzia oskarbi eta giroa epel. Udaberri hasiera gozo samarra suertatzen ari zen urte hartan. Nonahi agertzen ziren loreak mendiak kolorez tindatuz, sasirik hitsenak ere soineko bitxiz jantziak azaltzen ziren, airea zegoeneko gorteiatzean murgildurik zeuden txorien doinu alaiek betetzen zutelarik.

Zelaia zeharkatzen zuen errekastora hurbildu eta zalditik jaitsi zen. Biek ala biek egarria ase ondoren belazea aztertzeari ekin zioten, Itzurdek urdailera eramateko landareen arteko puja guriak aukeratuz, eta Kattalinek bitxilore eta hirusten artean pagotxa bilatuz.

Zaldia aztoratu zen supituki. Burua jaso eta atzeko aldean zuten pagadi-muinorantz begira geratu zen Itzurde, irrintzi urduriak jaulkiz.

-Zer ba, otsoak ala? –galdetu zion neskak baretzen saiatzeko lepoan ferekatzen zuen aldi berean, maitekiro.

Ez, ezin otsoak izan, deliberatu zuen unean bertan. Aurrekoren batean bazuten basapiztiaren mehatxuzko presentzia sumatua haien osteratxoetan, eta ordu arte inoiz ez zuen horren artega ikusi zaldia. Haizea bizkor edu izanda Itzurde ezeinen beldur ez zela lar ongi baitzekien Kattalinek.

Zaldira igo eta pagadirantz behartu zuen, aberearen gogoz kontra alafede. Muinoaren gainaldera heldu bezain ber ikusi zuten: haranaren urruntasunean hauts hodei erraldoia, ekialdetik zetorren metauts ikaragarria.

-Izan ere! Zer demontre da ba hori? –jaulki zuen bere kolkorako ikusten zuenaz harridurak gain harturik, ikuskizun hura zerk eragin zezakeen asmatu ezinik.

Eta asmatu ere asmatu zuen. Berehalaxe asmatu, arean bere. Itzurdek esan zion ezer ere esateke. Zaldiak jasan zuen dardarak argitu zion, giharrikara luze eta zarradagarria, aitak xakia ezarri zion egunekoa bainoago.

Gudarostea zen. Izugarrizko ostea, neurrigabea.

Kattalinek ez zuen inoiz gudarosterik ikusi, ez handi ez txikirik. Soldaduren bat edo beste herritik iragaitzaz askoz jota. Baina amari entzunak zizkion gerrari eta bertan aritzen diren gudarosteei buruzko supazterreko istorioak, zein baino zein latzagoa.

Ama ez baitzen bertakoa, ekialdekoa baizik, itsasotik hurbil zegoen herri batekoa hain zuzen. Iraganean gudarosteek erresuma inbaditu zuten. Une latzak bizi izan ziren, borroken ondorio bortitzak herri xeheak

pairatu behar izan zituelarik batez ere; gerra guztietan bezalaxe, bestalde. Bi gudarosteen arteko borrokek alta, labur jo zuten; inbaditzaile kopuru izugarriari erreparaturik defendatzaileek aurki izan zuten amore eman behar. Bake akordioak iritzi zieten hitzarmenetan, erasotzaileek ekialdeko eremuak bereganatzeaz gain, inposaturiko muga berrien inguruetan troparik ez kantonatzea itundu zuten bi aldeek, soldaduen presentziak egoera ezegonkortuz beharturiko bakea zaputz ez zezan. Horren ondorioz, bada, garai nareak izan ziren ondorengoak, ezpaten hotsek bizitza ez aztoratu ez hondatu ez zutela. Garai alaia Kattalin munduratu zenekoa, galeraren oroimen ezabagaitzak besterik goibeltzen ez zuen aro naroa.

Halere, azken boladan aski nahasia zegoen giroa, mugaz bestaldetik heltzen ziren berriek jendea artegaturik, horren arrazoia Kattalinek bazekielarik. Azken aldian, azoketan jendearen solasaldiek politika kontuetara jotzen zuten behin eta berriz, hizketaldi horietan gerra hotsak aditzen baitziren sarri, maizegi. Eta zertarako asmatu zuten bada politika, guda bera eta armen bidez lorturiko boterearen ezarpena poesiaz mozorrotzeko ez bazen?

Erreinu ttipia zen Kattalin bizi zena, bi erreinu handi baino handiagoen artean kokaturik zegoen herri apala. Bi erreinu boteretsu haien arteko lehia amaigabeak astinduta, mendeetan zehar aldiro zirkoan. Ihiak zirimolari nola, hala egin ohi zien handiei aurre, orain alde batera orain bestera, bai makur bai zut oldarra noiz igaro aiduru, bizirautea helburu. Eta beste behin, handien handinahiak arriskuan jartzen zuen txikiaren bizitza, kolokan geroa.

Ekialdeko eremu galduetan tropak metatzen ari ziren, berria ahoz aho zebilen; hasiera batean beste handiari erasotzeko asmoz, baina horren atzean erreinu ttipiak osorik bereganatzeko gibel asmoa egongo ez ote zen den-denak izukor.

Ez, Kattalinek ez zuen inoiz gudarosterik ikusia eta, halarik ere, harri eta zur geratu zen hauts hodei erraldoiaren barnean zetorrena horixe bera

zela konprenitu zuenean. Lekuan iltzaturik. Mugitu ezinik. Nahiz eta inoiz ikusi ez, horrek sor zitzakeenak soberan baitzezaguzkien, soldaduek eragin zitalkeria eta txikizioak supazterreko gauetan kontaturik amak. Segituan ekin zion ondorengoak irudikatzeari. Herria txiki-txiki eginda begitandu zuen; etxeak suak harturik; emakumeak, atso zein neska, bortxaturik; denak akabaturik.

Itzurdek jaulki irrintziak atera zuen trantzetik. Aida batez eta ezproiak estuturik etxeranzko bidean jarri zuen zaldia. Inoiz baino bizkorrago zebilen animalia, istantean arrapalada bizian jarririk, apatxek lurra apenas ukitzen zutelarik.

Kattalin uhalekin ahantzia zegoen, burua bidean barik beste nonbait jarria baitzuen. Zaldiak, bestalde, ez zuen neskaren aginduen beharrik, lar ongi baitzekien norantz jo. Eze jakina baita, animaliek pertsonok bezalaxe, gogoa non eta zangoa han; eta Itzurdek etxean zuen gogoa arriskua sumatu zuen memento beretik, ukuiluaren abaro gozoan.

Basotik irtenda Itzurderen asmo trinkoa zuzendu behar izan zuen. Ez, ez zuen etxera egingo, herrira joko zuen lehendabizi abisua emateko, auzolagunek euren bizitza zein ondasun apurrak salbu jar zitzaten. Gogor eutsi behar izan zien gida-uhalei aberea gobernatzeko, izuak etxerantz behartzeaz gain zaldiak ez baitzezaguen herrirako bidea, inoiz ez zuen eta herria zapaldu. Kattalinek animalia ukuilutik atera bakoitzean mendira jotzen zuten, aitak hala aholkaturik.

-Xaloaren zori ona besteentzat zorri-belarra –esan zion azokara zaldiz ibiltzen joan nahi izan zuen batean-. Itzurderekin herrian agertu nahi badun, aurrera, dagoeneko hirea dun aberea eta hirea harekin nahi dunanera joateko eskubidea. Baina ez pentsa jendearen errespetua irabaziko dunanik, tamalez bekaizkeria dun haietarik gehienengan sortuko dunan bakarra. Eta hortik, maitetxo, ezer onik ez.

Itzurde ezin bizkorrago zebilen mendi magalean behera. Herria ozta-ozta ikus zitekeen urruntasunean. Hasieran teilatuen aztarrena baizik ez zen

ageri, ibarraren zokondoan distira zerion aintzira gorrizta iduri. Holako batean, herrira ailegatzeko tarte ederra zegoelarik, zaldun bat agertu zitzaien zuhaitzen artetik, hau ere herrirantz zihoala, trosta lasaian alabaina.

Kattalinek, zegoen lekutik, ezin zuen zaldun hori nor izan zitekeen igarri; nondik zetorren argi zegoen haatik: Mandilenea dorretxetik zalantza barik. Zela eroso baten altueratik mundua behatzen hazia izan denaren zamalkera dotore arranditsua zen hura: jantzi finak haizeak astindurik, zaldiaren muturra une oro tente, zaldikoarena beste.

Mandiltarrak eremu horietako ahaide nagusiak ziren, Iñigo Mandil sendiaren buru zutela. Dorretxea muino baten puntan paraturik zegoen, nondik ibarra erraz barranda baitzitekeen; herritik aldendurik, ez urrun ez hurbil, herritar xaloekin ez nahasteko baina hauek ongi kontrolaturik izateko distantzia egokian.

Familian baziren seme bi; bata, aitaren izen berekoa eta primua zena, eta urte batzuk gazteagoa bestea, Gonzalo izenekoa. Herrian adina, apenas ezagutzen zituzten mutilak, gazte-gaztetatik gurasoekin batera boterea zetzan urruneko gortean bizi izan baitziren. Halere, gorte barruko bandoen arteko amaibako botere borrokak zirela medio, mandiltarren alderdikoek kaltetuta suertatu eta boterearen gerizpetik egotziak ikusi zituzten euren buruak. Horren ondorioz, jatorrizko lurretara bizitzera itzuliak ziren berriki.

Kattalin ikustean, zalduna bidean gelditu zen haren aiduru. Neska Itzurderen lasterketa bizia moteltzen hasi zen ezezagunaren aurrean planto egin arte. Horrela geratu ziren tartetxo batez, elkarri begira parez pare, elkarren neurketan ezer esateke.

-Egunon anderea, ni Iñigo Mandil nauzu –jaulki zuen mutilak azkenekoz, bere izen-abizena ahoskatzean errespetua sorrarazten ohiturik dagoenaren doinu ponpatsuarekin, baina aldi berean begietan ageri zitzaizkion zalantza zein harridura ezin ezkutatuz.

Eta arrazoi osoz, arean. Aurrean zuen ezelako lotsarik gabe begietara irmo so egiten zion neska ozarra, gutxitan ikusia zeukan horren zaldi ederraren gainean arrelepo jarria, eta aski ez bailitzan baserriko mutil baten oihal xumeekin jantzirik. Harridurak gain harturik zegoen mutila.

Oso bestelako kontuek kezkatzen zuten neska, ordea. Hasieratik, gudarostea behatu zuenetik ideia bakarra zerabilen buruan: herrira lehen-bailehen joan eta abisua eman auzo-lagunek haien buruak eta azkar batez eskuratu ondasunak mendietan salbu jar zitzaten, gero etxera egin eta gurasoekin batera bide berbera hartu. Horixe hasierako asmoa. Baina bat-batean, mutil hura parean zuelarik, beste ideia bat etorri zitzaion gogora. Hori zen preseski buruan jira eta bira zuena, eta horrexegatik ez zion kasu izpirik ere egin mutilaren agurrari edota haren gorde ezinezko harridurari.

-Gudarosteak zatozak –esan zion azkenik, eguraldiaz mintzo denaren doinu laxoarekin.

Mutilaren harridurak gora egin zuen. Horren txunditurik zegoen non ez baitzion neskaren errespetu faltari erreparatu.

-No… nola?

-Gudarosteak datozela –errepikatu berak, berdinki lasai.

-Gudarostea, zein gudaroste? –galdetu zion Iñigok, hitz eskas horien garrantziaz jabetzen hasirik.

-Mendebaldeko gudarosteak, hor goian nengoela ikusi ditiat –gehitu zuen bera zetorren mendia keinu arin batez seinalatuaz-. Mugatik zortzi bat legoara zaudek, honera zatozak eta hagitz franko dituk, horiek asmo onik ez zakartek.

Uneren batean neska adarra jotzen ari zitzaiola uste izan bazuen, berehala baztertu zuen ideio. Neskarengan bazen hari sinestera bultzatzen zuen zerbait.

-Jendea ohartarazi behar dugu bada lehenbailehen! –egin zuen garrasi mutilak, asaldaturik, bere zaldia herrirako bidean jartzeko gida-uhaletik tiratuz.

-Ez! –ihardetsi zion Kattalinek, mutila geldiarazteko haren aberearen aho-burdinatik tinkatzen zuen aldi berean- Ez oraindik bederen. Nik bazaukaat ideia bat eta arin mugituz gero garaiz gabiltzak… baina hire beharra diat.

-Ideia, zein ideia? –galdetu zuen Iñigok, arras zalantzakor, ideia horrek berari sor lekiokeen kalteagatik izukor.

-Segi! –agindu zion neskak, eta jarraitzen zitzaion ala ez konprobatzeko biratu gabe, Itzurde esaneko zaldia jarri zuen berriro arrapaladan, oraingoan baina kontrako norabidean, basorantz ostera.

Iñigo zuhaitzen artera ailegatu zenerako, Kattalin zalditik jaitsita abarken lokarriak askatzen hasia zen. Bera ere zalditik jaitsi eta neskari so geratu zen, ulertu ezinik.

-Erantzi itzak arropak.

-Zer?!

-Arropak eranzteko –errepikatu zuen-, eta hobe azkar ibili denbora soberan ez baitiagu.

Kattalinek prakak eta atorra askatu zituenean, Iñigo zur eta lur geratu zen. Lipar batez neskak lizunkeriatan nahi zuela pentsatu zuen, edo pentsatu baino gutiziatu zuen. Berehala oharturik, haren ameskeriatik errealitatera bueltarazi zuen Kattalinek.

-Aizak, hau ez duk unea ezta era ere. Ea, erantzi behingoz arraio!

Mutilak, haren duda-mudak eta lotsaizunak uxaturik, obeditu egin zion.

Behin erantzirik, Kattalinek Iñigoren arropak jantzi zituen eta mutilari berarenekin berdin egiteko esan. Bi-biak jantzirik, Itzurderen arbalda eta uhal xumeak askatu eta hauen lekuan Iñigoren zaldiarenak ipini zituen.

-Segi! –agindu zion atzera neskak, biak martxan jarriz.

Goizean goiz Prontziok abereak aske bazkatzera eramandako larreetara zuzendu eta bertan ziren abelgorri oro, gazte zein zahar, euren atzean bildu zituen. Talde bitxi hori ibarraren bestalderantz, mugarantz, zuzendu zen gerora.

Gorriak ikusi zituen abereak gobernatzeko mugara hurbildu ahala. Eze animaliek, nahiz eta aurretik zetorkien gudaroste erraldoia ikusi ez, soberan nozitzen baitzuten haren hurbiltzea, osteak eragin lurrikara apatxetatik gora gorputz osora hedatzen zitzaien eta. Taldea gidatzearen ardura neskarengan zetzan noski, mutilak ez zezaguzkien bide zailetan txikiegia zitzaion arbaldatik ez erortzearekin lan nahikoa zuelarik.

Zailtasunak zailtasun, lortu zuten menditik jaistea. Basoko surgura heltzean geldiunea egin zuten bertan. Aurreko eremua laua zen; urrunean gudarosteak altxa hauts-lainoa ikusgai zuten.

Kattalin arraro sentitzen zen jantzi horien barnean, arrotza zitzaion hainbesteko dotorezia. Itzurdek ere desatsegintzat zuen neskarentzat ordea horren erosoa zen zela handi hura; halere, zaldiak ez zuen horregatik bere atsekabea azaltzen, arreta eta kezka oro apatxetatik gora hedatzen zitzaion lurraren dardaran jarria baitzuen, gudarostea hurbildu heinean gero eta nabariagoa zena.

-Baina… zein da ideia? Zer… zer egingo duzu? –galdetu zuen Iñigok gerturatzen zitzaien hauts-laino ikaragarriari begira, txit ikaraturik. Hari begiratzeari lotu zitzaion Kattalin une batez, ezer erantzuteke.

-E, zer egingo duzu? –galdetu zuen atzera duzu-a azpimarratuz, berak ezer egiteko ezein asmorik ez zuela nabarmentzeko edo.

Neska baina, bere ideia azaltzen ez zen ausartu. Bazeukan ideia bat, bai, bere golkoan arras logikoa eta egingarria zen plana bazeukan. Halarik ere, beldurra zion plana ahoskatzeari, ideiak bere golkotik at logika guztia galduko ez zuen beldurturik, orduan zalantzek bera hartu, plana burutzeko behar besteko adorea galduz.

-Hi hago hemen –esan zion azkenekoz-. Ez zuhaitzen artetik azaldu, eta gudarosteek aurrera egiten dutela badakusak, itzul hadi herrira azkar batez abisua ematera.

Mutilaren eginbeharra aski erraza zen, arrisku gutxikoa. Kattalinek dena den, ez zion ezer esateko betarik eman. Adatsak boneta azpian bildu eta zuhaitzen abaroa utziz bidera irten zitzaien osteei.

-Aizu! –oihukatu zion basotik-, zure izenik ez didazu esan!

-Kattalin! –erantzun zuen berak lipar batez burua biratua, bidean gelditzeke. Iñigok gauza gehiago esateko gogoa sentitu zuen, baita haren atzetik joatekoa ere; baina jada berandu zen eta bertan geratu zen, zetorrenak izuturik, izuak lotsaturik. Eta bakar-bakarrik. Basoko animalia guztiak alde eginak ziren aspaldi, baita zuhaitzek ere alde egingo zuketen ahal izanez gero. Hainbesterainokoa baitzen hurbildu gudarosteak sortzen zuen ikara, non arbolen orriak ere dardara bizian baitzeuden. Metro zenbaitzuk aurrerago, soldaduentzat neska erabat ikusgarri zenean, gelditu eta haien zain egon zen.

Gudarosteak motel egiten zuen aurrera, motelegi Kattalinen gusturako. Beraiekin lehenbailehen topo egin nahi zuen, korrika ihes egiteko agintzen zion senak bera konbentzitzeko astirik izan ez zezan. Abereei bertatik ospa egiteko agintzen zien sen berbera. Animaliak geldi-geldi egon ziren alabaina, Kattalin alboan izanda amildegi ertzeraino bertaraino eta pausu bat haratago joateko prest baitziren. Neskak halere, abesteari ekin zion, abereen kirioak eta harenak berarenak baretzeko asmoz.

Kattalinen parera ailegatzean, soldaduen errenkada amaigabea gelditu zen apur bana, errenkadan barrena barreiatu ziren gelditzeko garrasien

artean. Eta orduan isiltasuna nagusitu zen. Isiltasun sakona hura, lehenagoko iskanbilak baino izu handiagoa eragiten zuena. Tartetxo bat geroago, gudarostetik atera destakamendua hurreratu zitzaion.

Hurbildu taldekoak osteen nagusiak zirela konprenituta, ahotsa ahalik eta gehien gordinduaz galaiki agurtu eta erreinuko enbaxadore gisa aurkeztu zuen bere burua. Gizonek goitik behera aztertu zuten zaldun ezezagun hura. Sinesgaitza zitzaien sorpresaz inbaditzera zihoazen erreinuko enbaxadorea mugan bertan euren aurrean agertzea, eta hau gutxi balitz abelburu taldea lagun harturik. Hasiera batean unaitzat hartu edo bestelako zalantza egin bazuten ere, berehala baztertu zuten. Enbaxadorea izateko gazteegia zirudien arren, haren jantzi dotoreek, erabili hitzek eta batez ere zerabilen zaldi apartak horixe adierazten zuten, munta handiko pertsona behar zuela horrek.

Kattalini amaiezina iruditu zitzaion tarte baten ondoren, gizonetarik batek urratsa eman zuen aurrera eta honela mintzatu zen, harro hankor:

-Neu Goiznabar Baroia nauzu, Sartalde erreinuko Jaunaren zerbitzari umil eta fidela, eta hemen ikusten dituzun osteen nagusia. Sortaldetarren kontra borrokatzera goaz, horretarako zeuen lurrak zeharkatu behar ditugula.

-Bai, Jaun txit hori, berori nor den sobera ongi daki gure Jaun-Anderearen zerbitzari kirmena den enbaxadore xume honek. Izan ere, berori honaino ekarri duen eginbeharra zein den jakin badakigu, eta zuen zereginerako gure lurraldea zeharkatzen duen bidea aukeratu izana guretzat ohore ezin handiagoa dela zilegi bekit esatea.

-Eta orduan, zer egiten duzu hemen?

-Ene Jaun-Andereak agindutakoa bete, Jaun txit hori, handizuren handiz eta gogo betez, atan bere.

-Zein da agindu hori eta non dago bada zure Jauna?

-Ene Jaun eta ene Anderea –erantzun zion Iñigo geratua zen lekurantz seinalatuz –mendi horren bestaldean dagoen ibarrean daude, Jauna, gure gudarosteekin aiduru, helbururaino berorren pertsonak eta enpresak merezi duten ohorez laguntzeko. Haienganainoko bidea erakusteko bidali naute ni hona; eta han ikus ditzakeen abereak berorrentzako erregalia dira, ziurra duzuen garaipena behar moduan ospa dezazuen.

Amorruak ezpainak estuturik eta gorrotoak masailak gorriturik, baroiaren begitartea gogortu zen nabarmenki. Kattalinek bereak egina zuela, ezein unean gizonak ezpata atera eta bertan lepoa egingo ziola uste izan zuen. Dardara biziak hartu zuen neska. Ihesari ekiteko agintzen zion senari eusteko zaldiaren uhalak estutu zituen irmo. Itzurdek Kattalinen beldurra nozitu eta, urduri baino urduriago hau ere, lurraren kontra ostikadaka hasi zen. Gizona alta, bisaia laxatu gabe ere, desenkusa gisara burua makurtuz oles egin eta bira emanda bere ofizialekin batzartzera urrutiratu zen.

-Gezurra behar du horrek guztiak! –esan zuen haietarik batek.

-Bai, gezurra! –bestek.

-Eta gezurra ez bada, guri bost axola, egin dezagun aurrera! –hirugarren batek.

-Jauna, gudaroste ikaragarria bildu dugu hemen eta, berorren agindupean, guri kontra egiteko munduan ez da indar nahikorik.

-Berorrek utz nazala umemoko zikin hori akabatzen eta egin dezagun aitzin!

-…

Azkena mintzo zenean, Jeneralari beha egon ziren guztiak. Honek isilpean jarraitu zuen, hausnarrean istant batzuez. Den-denak berdin edo lar agin mintzo ziren, eta berak bazekien horren zioa zein zen. Denek nagusiak

ustez entzun nahi zuena jaulki zuten, zalantza egin gabe. Egoerari erreparatu eta enpresaren interesari gehien komeni lekiokeena bilatu beharrean, berak zer nahiago zukeen entzun asmatzeari ekin zioten, eta horixe esan erarik axolagabeenean, ohituraz beharbada. Ongi zegoen horiek bezalako manukoak izatea, bai, baina Gorteko korridoreetan eta ez guda-zelaian. Jeneralak ederki gogoko zituen manuko jende otzan esanekoak, bikain gozatzen zituen Gortean horiek guztiek eskaini ohi zizkioten adeitasun eta kortesiak, errege-erregina izan ezik den-denak haren agindurik apetatsuenak ere betetzeko gogo bizian zeudelarik. Baina guda-zelaian bestelako menekoak dira beharrezkoak, unean-uneko bal dintzak eta egoera zorrotz aztertu eta gero nagusiari aholkatzen diotenak, eta ez Gorteko zurubian koska bat igotzeko helburuari komeni zaiona esaten dutenak. Segundo batez haren gizonei etsipena sortzearen kezka sentitu bazuen, berehala uxaturik zegoen. Hartu beharreko erabakiaren inguruan menekoek pentsatuko zutenagatik arduratzeak ez zuen merezi, azken finean berak agindutakoa obedituko zuten protestarik txikiena ere agertu gabe. Hasperen sakona egin eta, inori begiratu gabe, bira eman eta Kattalinengana zuzendu zen ostera, mantso baina ongi tente, hark berak sentitu etsipena gordetzeko guran ziur tinko plantan.

Denen harridurarako, Jeneralak bat-bateko planen aldaketa jazo zela azaldu zion, Gortetik mezularia heldu berria zela eta lehenbailehen hara itzultzeko agindua jaso zutela.

-Helaraz iezazkiozu nire begirune eta esker onak zure Jaunari –esan zion abereak zeuden lekurantz begiratuz-, eta nere barkamenak ere haren aurrean agertu eta nik neuk nere begiruneak azaldu ezin izanagatik. Zerua tarteko, baliteke laster bere abegikortasuna pertsonalki eskertu ahal izatea…

Kattalin harri eta zur zegoen, entzundakoa sinistu ezinik. Sinestezina baitzitzaion hain amarru soilarekin horren gudaroste itzela atzera behartu izana. Hasieratik bere asmoa horixe izan bazen ere, helburua lortzea espero ez zuela ulertu zuen memento horretan bertan. Bere ideiarekin arrakasta izatearen ziurtasunak beharrean, gauzak diren edota datozen bezala onartzearen nekadurak bultzatu zuen horrela jokatzera. Gertatua

gertatu ere, eta ekinean bizitza bera galdu arren, zertxobait egin behar zuela deliberatu zuen.

Hain zegoen harriturik bere arrakastarekin non gizonari zer esan ere ez baitzuen jakin izan. Hitzei buruko imintzio urduri batekin besterik ez zien erantzun.

Goiznabar baroiak menekoen albora itzuli eta gudarostea atzera egiteko agindua eman zuen, agindu tinkoa azalpen bakartzat. Ez zen azalpen handirik behar halarik ere, ofizialek berehala konprenitu baitzuten. Erasoaren gakoa sorpresan zetzan, eta abantaila hori galduta plana kolokan zen geratua. Enbaxadore gaztea bidali zuten abegi bitxia egitera, akaso eginkizunetik bueltatzekorik izango ez zuela pentsakor, eskarmentu handiko enbaxadoreak salbu gorde nahi izan zituztelako. Haranaren bestaldean haiei eskolta emateko osteak prest zeudela, horixe enbaxadoreak esan zuena; baita bazeudela borrokatzeko ere prest, azkeneko hau isilpean geratu arren. Sarri isilpean geratzen denak bai baitu indar eta eragin handiagoa ahoskatzen denak baino.

Baroiak bildu ostea erraldoia zen, egundokoa, oso gutxitan ikusi modukoa. Albait denbora laburrenean erresuma modurik hedakorrenean bereganatzea zeukan asmoa. Bertakoak sorpresaz harturik, hauek erreakzionatu baino lehen ahalik eta eremu zabalenean tropak barreiatu nahi izan zuen, horixe bere plana. Lañoa bezain irmoa. Orain, ordea, sorpresa desagertua zen, ustekabean desagertua ere. Dena den, erasora igaroz gero garaipena ziurra izango zuten, haren ejertzitoa horren baitzen erraldoia; jada ez zen ez motza ez erraza izango alta bada. Defendatzaileek aurre egingo zieten, plazaz plaza borrokatu beharko zuten eta horrek denbora eskatzen zuen. Baroiak ez zuen denbora hain zuzen, kanpaina laburto baterako atondu ejertzitoa baitzekarren. Gainera, haren indarrak ahul zitezkeen borroka latzetan sartuz gero, eta sortaldetarren aurrean babesgabe geratu. Ez, atzera egitea baizik ez zegoen, ofizialek berehala ulertu zuten bezala. Eta baten batek ulertu ez bazuen, tentu handiz ibili zen bere desadostasuna ongi gordetzen, hobe baitzuten isilik egon nagusiari aurka egin baino.

Ejertzitoak atzera egiteko maniobra hasi zuen apur bana. Gelditzean lez, aginduak errepikatzeko garrasiak zutabean zehar barreiatu ziren, urrundu heinean ahulduz, arroila baten hondora galtzera doan oihartzuna iruditvz.

Emeki-emeki lerroa martxan jarri eta bira emateko Kattalinen aurrean desfilatzen hasi zen. Zaldiak eta zaldunak, orgak eta gurdiak, soldaduak eta soldaduak eta denak berdin jantzirik, denak pausuari eutsiz; apatxen zein iskiluen hotsak, eta gutxinaka berrosatzen zen hauts-hodeia. Horrek guztiak irrealtasun kutsua zeragion irudiari. Ametsa behar zuen horrek guztiak; neskak ez zekien amets gozoa ala amets gaiztoa zen, baina irreala behar zuen.

Iñigo ere sor eta lor zegoen. Bera ere sinistu ezinik. Haren aurrean bertan jazotakoa ez zuen ulertzen. Inolako zalantzarik gabe borrokan sartzeko prestaturiko osteak atzera egin zer eta abelburu hits batzuen truke? Zuhaitzen artetik irten eta Kattalinengana joan nahi luke, baina ausartu ez. Ejertzitoa atzera egiten ari zen, bai, baina oraindik bertan zegoen, eta bere sen zuhurrak gorderik zegoen lekuan jarraitzeko aholkatzen zion. Neska itzuli eta dena azaltzeko irrikan zegoen. Kattalinek lekuan zirauen baina, gihar bat bera ere higitu gabe.

Errenkadako azken soldaduak Kattalinen aurrean igarota gudaroste osoa atzerako bidean jarria zenean, buelta eman eta zuhaitzen artera itzuli zen patxadatsu, buru makur, geldo zaputz.

-Ene bada… sinestezina!

Iñigok ahoa bete hortz zerraien, haren aurrean jazo berri zenak harriturik, jazotakoa guztiz ulertu ezinik. Zalditik jaitsi eta Kattalinengana hurbildu zen, neskaren bueltan urduri eta artega mugitzen zelarik, alai harriturik. Haren inguruan saltoka eta garrasika, ai eneka eta ai amaka, bere senetik aterata antzera, horren aterata zegoen mutila non istant batez Azkar txakurraren akordua baitzekarkion burura. Egun osoa kanpoan eman ondorengo etxeratzean txakurrak erakutsi ohi zuen alaitasun

urduria hain zuzen; neskaren inguruan biraka eta saltoka, jauzika eta uluka, Kattalinek maitasun adierazpide horiei noiz erantzungo igurikitzan.

Txakurrarekin ez bezala baina, Kattalinek soraio plantan zirauen, isil mutu, mutilaren erreguei ezaxola. Honek ordea, Iñigoren urduritasuna emendatu besterik ez zuen lortu; saltoka eta oihuka segitzeaz gain, besoak mugitzen hasi zen orain, noiz burura noiz zerura eramaten zituela, geldi gabe, eskuekin zer egin ez baleki lez.

Iñigok ez zuen Kattalinen tankera tristea ulertu, eta halaxe adierazi zion. Pozarren behar lukeen neskak, hain handiosa baitzen jazotakoa. Zaldiaren zelak zemaion altueratik mutilari beha paratu zen tarte batez bere begitarteari distira malenkoniatsua zeriola. Une horrexetan, Azkar txakurrari nola, Iñigori adatsak amoroski ferekatzeko grina sentitu zuen hala; bere alaitasun lañoan gure tristezia konplexuaren zioa ulertzen ez duen abere bakuna bailitzan mutila.

Bai, bera ere kontent zegoen. Baroiak gudarostea atzera egiteko agindua eman zuenean, sinistu ezinik geratu zen Kattalin. Horrenbesteko ezustea jasan zuen non arnastea ere ahantzi baitzitzaion lipar batez. Ordu arte hartuta zegoen izua laxatzen hasirik, airea trumilka sartu zitzaion birikietan, eta airearekin bat hotzikara erraldoia. Gorputz osora zabaldu eta oihu zein jauzi egitera bulkatzen zuen hotzikara, hura.

Gutxinaka baina, egindakoaren bestelako ondorioa gauzatzen hasi zen, saihestezina izanik ere tartean apenas pentsatu zuen ondorioa. Gizon apur batzuk errenkadatik aldendu eta hango edo hemengo gurdiari loturik, abelburuak taldera biltzen hasi ziren. Orduantxe beste sentimendu batek hartu zuen Kattalin, pozaren gainetik bere baitan sakon nagusitzen zena, barrenak sakonki husten. Animaliek atzera so egiten zuten behin eta berriz. Haien begiradetan ulermena eta barkamena ikusi nahi izan zituen Kattalinek, baina ez, traizioaren ziria eta saldukeriaren ezpala besterik ez zituen nozitzen, bihotzaren erdi-erdian sastatzen. Eta barkamena behar zuen Kattalinek, zinez; ez inoiz ez ezeren truke egitea horren serio deliberatua zuena egiteagatiko barkamena hain zuzen.

Abereen begietan bilatzen zuen hark berak bere buruari inoiz emango ez zion barkamena.

-Ai ama… sinestezina! Baina zergatik ez zaude bada alaiago? Gaur hemen jazo dena, gaur hemen egin duzuna historikoa da, erabat! Emakume bakar batek munduko alde honetan inoiz ikusitako gudarosterik erraldoienari ziria sartu eta gibelarazi. Halakorik! Emakume bakar batek gudaroste oso bat garaitu borroketan ere hasi gabe… balentria handiagorik ote? Gaurtik aurrera herrikide oro izango duzu lagun eta zorpeko; herria salbu jarri duzu gero!

-Bai, balitekek; baina herria salbu jartzeko ene etxera hondamendia ekarri diat -ihardetsi zion abereak galtzeagatiko ondorio materiala aipatuta, bizitzen ari zen barne ondorioa ulertuko ez zuelakoan.

Mutilak ez zuen oraingoan errespetu faltatzat hartu neskak ematen zion hitz trataera, hierarkia sozialaren goiko aldean dagoenak behekoarenganа zuzentzeko haizu duen trataeratzat baitzuen hura, eta neska herri xehekoa izanik ere, ordukoan mutilak ezin gorago ikusten zuen; hura bera, haren familia eta noblezia osoa baino gorago ikusten zuen memento horretan Kattalin, horrenbeste zegoen-eta neskak miretsirik.

Iñigok, neskak erakutsi tristezia eta etsipenaren zioa abereak galtzeagatiko hondamendi ekonomikoa zela ulerturik, Kattalin lasaitu eta animatzeari ekin zion. Izan ere, mutilak, bere hasierako portaera gogoan, adoretsu eta bulartsu agertu nahi izan zuen lehenagoko jarrera koldarra ahazte aldera.

Lasai egoteko esan zion, ez zegoela eta zertan kezkatzerik. Bera mandiltarren etxekoa zen, etxeko primua hain zuzen. Lehenbailehen haren etxera joan beharra zuten, aitaren aurrean agertu, jazotakoa azaldu eta akabo arazoa. Bai, halaxe baitzen bere aita, zuzen, jantzi eta esker oneko gizona, handiki bati zegokion bezalakoa. Mila borroketan zaildua, Kattalinek egindakoa behar gisan baloratzen eta eskertzen jakin izango zuena.

-Ez abereengatik kezkatu hortaz, nire aitak ordainduko baitizu galdutako ondarea, baita bikoitza edo hirukoitza ere ordaindu beharbada, hain baita diruz neurgaitza zuk egindakoa. Eta honen ostean herrira jaitsiko gara, gertaturikoaren berri izan dezaten bertan.

-Eta zergatik ez herrira lehenago?

Azken finean herriko jendearengatik egin zuen balentria eta sakrifizioa, eta ez arrotzak zein fidagaitzak zitzaizkion handiki batzuengatik.

-Et, et, et… gure familia iraintzea bezalakoa litzateke hori. Mespretxu jasanezinagorik? Ez, egidazu kasu niri orain, nire etxera joango gara lehenago behar moduan, eta izango dugu gerora soberan astia herrira joateko, baita Gortera ere zure berri emateko. Baina orain… truka ditzagun jantziak berriro, arren, ezin bainaiteke aitaren aurrean horrela ager.

Geldo-geldo erantzi zuen arropa Kattalinek, bigarrengo aldi honetan mutilaren begirada lizunen bat edo beste jasotzeko pronto. Alferrik baina, haren plan berrietan net murgildurik, ez zion erreparatu ere egin neskaren edertasun biluziari. Halaxe baita bizitza maiz: eskura daukagunean ez dugu nahi, eta nahi dugunean eskuragaitz.

Isilpean egin zuten dorretxerako bidea, nor bere kabutan; neskak iragan hurbila amesgaizto, mutilak geroa amets gozo. Eze hortxe baitzuen jarria gogoa Iñigok: gerokoan. Soldaduekin gertatua gertatu, hortik aurrerakoan zuen jarria bere adimen osoa, muinak urtutzen jazotakoari ahalik eta etekin handiena ateratzeko eran; bere buruaren onuran, arean. Aitaren aurrean bere burua aldarrikatzeko parada zuen esku artean eta ez zegoen, ez, abagunea alferrik igarotzen uzteko prest.

Iñigok aitaren faborea lortzeko lehia bizia mantendu izan zuen anaiarekin, txiki-txikitatik. Eta, tamalez, galtzaile irten izan zen gehienetan ordu artekoetan, bera baino gaztexeagoa zen anaia Gonzalo garaile suertatu ohi zelarik. Bai ezpatarekin jostetan, bai liburuei edota Gorteko jukutria-azpilanei zegokienean, askoz trebeagoa agertu izan ohi zen anaia gaztea

eskuarki, haietarik bakoitzean bere primutasuna ezbaian geratzen zelarik. Baina heldua zen behin betikoz opilari buelta emateko ordua, bizitzak oharkabean eskainia. Aitari jazotakoa azaldu besterik ez zuen. Berak ez zuen gudarostea geraraztekoan paper handirik jokatu berez, baina aitak ez zuen hori zertan jakin. Ez zion gezurrik esango, ezta hurrik eman ere, horretarako Iñigok inoiz izan ez zuen ausardia beharrezkoa baitzen; den-dena ez kontatzea aski izango zen alta. Eta ez zion axola aitari azalpena emateko unean Kattalin bertan egoteak; isilik egongo baitzen ziurrenean. Neska ere, herritar xume oro bezalaxe, mutu geratuko bide zen bere aita bezalako handiki baten aurrean. Gainera baliteke aitak ñabarduren inguruko galderarik ez egitea, eta ejertzitoaren aurrean norberak jokatu papera eta erakutsi adorea ñabarduratzat zituen Iñigok jada, ohi lez errealitatea norberari komeni kolorez margotzen baitute oinarrizko desirek.

Iñigok lar ongi zezaguen bere aita eta ez zuen zalantzarik, hortaz, jazotakoaren inguruko lehenengo aipamenak entzun orduko egingo zuenaz: haren zaldira igo eta Gortera jo laster batez, bertan golardoak eta ohoreak jasotzeko prest. Eta bere ondoan Iñigo egongo zen, prestasun bestez.

Dorretxera heltzean atalasean topatu zuten bertako jauna. Etxaurrean zut geldo, ezpata gerritik dilindan, jantzi dotoreen azpian kota agerian eta zerumugari so lasai asko.

-Aita –oihu egin zuen Iñigok zalditik jaisteke, mendirantz seinalatuz-, gudarostea!

Gizonak lasai plantan segitu zuen, semeak esandakoan baino harekin zetorren neskarengan arreta jartzenago.

-Gudarostea… -esan zion atzera, hatsanka, aurrez aurre egon zirenean.

-Hurbil al daude? –aitak galdetu zion, patxada osoz.

Honek Iñigo harritu zuen. "Bazian horren berri", pentsatu zuen, "nor-

baitek gudarostea ikusi eta abisua ekarri ziok aitari, horrexegatik zagok hemen, gudarako jantzirik etsaiei aurre egiteko zain". Inoiz ez bezala miretsi zuen bere aita une hartan; gizon bizkor prestua, hura; bera bezalako handiki bati zegozkion betebeharrekin konplitzeko pronto, haren ardurapean ziren herritarrak defendatzeko beti gertu, baita horren erraldoia zen ejertzitoari ere kontra egiteko prest, bera bakarrik eta ia esku hutsez. Gizon handia, bai, hura. Eta kilika gozoa nabari zuen sabelean, haranean jazotakoa adieraztean aitaren saria eta lausengua aurreratzen zizkion kilika. Aita berataz harro egotea zen haren nahi eta desira handiena, eta hortxe zuen berau lortzeko abagunea.

-Ez Jauna, lasai egon daiteke berori, dagoeneko urruntzen ari dira eta.

-Nola urruntzen? Zer esan nahi duk?

Eta azalpenari lotu zitzaion.

Dorretxerako bidean pentsatu bezala, gezurrik esan gabe ura bere errotara eramaten saiatu zen. "Gudarostea ikusi ondoren abelburuak bildu ditugu eta nola edo hala soldaduen enkontrura zuzendu gara…". Beti plurala erabilita eta beti anbiguoki, norberak jokatu paperaren ñabarduretan sartu gabe, horretarako inolako beharrik ez zekusala.

Iñigok aurreikusi moduan ere, mihi-geldo jarraitu zuen azalpena Kattalinek. Neskaren portaera hau, ordea, ez zen Iñigok pentsatu zioagatik izan; Kattalin ez zegoen ez kikildurik ez eta uzkurturik ere, haren erabateko isiltasuna ez zion ezein herritar xumek horiek bezalako bi handikiren aurrean nozitu behar ei zuen ahalkeari erantzuten. Izan ere, berari ez zion axola Iñigok aitaren edota herritar guztien aurrean dominak irabazi nahi izateak. Neskak ez zion inoiz erreparatu besteek berataz pentsatuko zutenari, eta ez zuen une hartantxe holako purtzilkeriengatik arduratzen hasteko asmorik; berak jakin lar ongi baitzekien zer jazo zen eta nola, eta horrekin aski zuen.

Abereen galtzeak etxera ekarriko zuen hondamendiak kezkatzen zuen

Kattalin, ez zuen buruan besterik. Beno, hori eta abereen begirada kutepurin bezain salataria. Maiz zituen begirada horiexek ikusiak tamalez, aitarekin batera azoketara joan izandako orotan. Baina oraingoan bazegoen aldea, ez abelburuengan Kattalinengan baizik. Oraingo honetan Kattalinen eskua izan zen hiltzera eraman zituena. Eta honek samin berezia eragin zion barru-barruan, ordu arte ez bezalakoa. Abesten hasteko gogoa sentitu zuen segituan eta horrek lasaituko zuelakoan abesteari ekin zion, gogoz. Bere baitan abestu, isil-mutu. Halere, horrek behar zuen kontsolamendua ekarriko ez ziola ulertu zuen laster. Ez, bere buruari abestea ez zen aski. Eta orduantxe ohartu zen: norbaitek kanta ziezaion behar zuen. Berak animaliei nola, belarrira eztiki xuxurlatuz hala kantatuko zion norbait behar zuen. Berehala gurasoez akordatu zen, eta honek bai Kattalin baretzea lortu nolabait. Azken finean, gurasoek hor zirauten, bizirik. Gudarostea urrundua zen eta hori zeukan garrantzitsuen. Eta horrela, aita-semearen arteko solasa berari ardura zitzaion puntura heldu artean bere hausnarrean bildurik zegoela, horrela helduko zitzaion sorpresa, berebiziko ustekabekoena.

Kattalinek gisa, mandiltarren dorretxeko jaunak ere isilpean jarraitu zuen semearen azalpena, zirkin txikienik ere egin gabe. Berez, ez zen batere erraza gortekerietan zaildutako bera bezalako pertsona baten pentsamenduak zein emozioak asmatzea, trebea baino trebeagoa baitzen, haren hobe beharrez, horiek guztiak artezki gordetzen. Beharbada, Iñigo ohar izan zitekeen harengan itsatsirik zeuden aitaren begiak ostendu zituen errezelaz, azti txarreko laino iluna zirudiela. Mutila alabaina, horren zegoen kontakizunak animaturik eta ñabardurekin atsekabeturik, non ez baitzion erreparatu ere egin.

Ziztuan jazo zen dena, kliska batean. Semeari tinko begiratzeari utzi gabe, eta hau zein Kattalin ohartzeke, gizonak ezpata zorrotik askatu zuen mugimendu ezin azkarrago batez.

Kattalin ez zen ezertaz konturatu. Urdailean bero sastada nozitu zuen. Beroaldi hura gorputz osora hedatzen hasi zen jarraian, ezezaguna zitzaion erabateko baretasun sentipena zemaiola. Gizonaren ezpata ikusi

zuen gero, odoletan blai zeharo. Ezpata koloreztatzen zuen odola berarena zela jabetzerako, ziplo egin zuen lurrera, hilotz.

Iñigo zur eta lur zegoen, harridurak harturik, ulertu ezinik. Harridurak baina, izuari egin zion lekua berehalakoan, ezpataren punta zorrotza bere zintzurraren parean zegoela ikusi zuenean.

-Babo alaena… -aitak esan marmarka, hortz artean ihardunez, herra biziak hortzak estuarazi balizkio lez; ondoren, masailezurra eta mihia laxaturik, honelaxe mintzatu zen, txit ozen-: Baina hik, artaburu horrek, ez al duk ezer ulertzen! Hik ez duk inoiz ikasiko! Zer egin behar dut, bada, hirekin?

Azkeneko galderari mehatxuzko kutsu nabarmena zerion. Iñigok jakin nahi ez zuen erantzuna ezpataren hurbiltze arriskutsuan zetzala. Batbatean, bereak egin zuela sinisturik zegoela guztiz, zerk edo zerk aitaren arreta desbideratu zuen. Ezpata mutilaren zintzurretik pitin bat ere aldendu gabe, burua biratu zuen. Aitaren begirada jarraituz anaia gaztearen irudiarekin egin zuen topo. Etxeko albo batean paraturik, kortatik zetorrela iduri, eskuetan zaldi bana baitzekarren uhaletatik oraturik. Inoiz ez zen bere anaia ikusteaz horrenbeste poztu izan, hura bertan egotea haren salbazioa bailitzan.

-Aizak Gonzalo, etxeko primua izatea gogoko al huke?

Gonzalok alabaina, ez zuen deus ere esan. Bai, noski baietz, berak etxeko primua izan nahi zuen, horixe baitzen munduan gehien gutiziatzen zuena berez. Horixe amesten zuena. Horixe haren ekintza oro bideratzen zuen zio bakarra. Hasieratik desiratu izan zuen, txiki-txikitatik, beranduxeago jaio izanak bere bizitza osoan anaiaren aurrean bigarren mailakoa izatera kondenatuko zuela endelegatu zuen unetik beretik, hain zuzen. Baina berak inoiz etsi ez eta, primutasunak zekartzan ardurak betetzeko anaia baino askozaz prestatuago zegoela aitari erakustearen amoreagatik, lehia bizia mantendu izan zuen beti. Bera akaso, ez zen Iñigo baino adimentsuagoa izango; bai bazituen ordea, karguan aritzeko eta Gorteko

korridoreetan moldatzeko beharrezko dohainak: malezia, maltzurkeria eta, batez ere, egin beharrekoa burutzeko erabateko kezkarik eza; bere aitarengan bezala, botere ardurak ukan eta hierarkiaren zurubian gora egiteko lehiatzen zuten guztiengan sobera ikusiak zituen dohain berbe rak.

Baina eginahalak eta bi eginagatik ere, bazen inoiz aldatzen ez zen gakoa: Iñigo anaia lehenago jaio izana. Eta bazekien hortaz, Iñigoren lekua betetzeko modu ia bakarra zein behar zuen izan: berau hilik suertatzea, arean. Zenbakaitzak ziren anaiaren heriotzarekin amestu izan zituen aldiak, kontagaitzak anaiaren bizitzari amaiera jarriko zion zalditiko erorketa edota zorigaiztoko eritasuna irudikatu zituenak. Aitzitik, aitaren eskuak Iñigo erditik kendu bera zegokion lekuan jartzeko aukera sekulan ez zitzaion burutik pasa ere egin. Eta haren zalantza ez zen, ez, aitak holakorik egitearen kontrako inolako eragozpen moralak sortua, ez eta bat-batean bere onuraz haraindi pentsatzera bulkatuko zuen kontzientzia jaioberri batek eraginda ere. Berekoikeri hutsak sortutako zalantza zen harena; berekoikeriak lotzen zion mihia gehien irrikatzen zuena erantzutea ekidinez. Azken batean, seme zaharrenari lepoa egiteko kapaza bazen, zer egoeratan uzten zuen bera horrek? Lehen semea bertan garbitzeko inolako erreparorik ez bazuen, zerk eragotziko zion berarekin berdintsu jokatzea aurrerago? Nola izan aitarengan fidantza, nola etxe berean bizi eta lasai lo egin aurrerantzean? Horixe zen, nagusiki, aitak egin galderaren aurrean nozitzen zuen perlesi eta harriduraren arrazoia.

Jakina denez, ordea, gure desirarik sakon eta egiazkoenek bidea kausitzen dute beti, guk geuk onartu nahi ez dugun hori argitara jalgi eta gauzatzeko xenda. Eta horrela, zalantzak eta beldurrak mihia geldirik lotzen zuten bitartean, bere esfortzu eta indar kontziente oro horretara bideratuz, aldiro presente eta bulkaka zegoen desirak bestelako bidea topatu eta garondora egin zuen, horko giharrez jabetzen.

Mugimendu bakun eta bakarra izan zen, arin-arina eta apenas hautemangarria, baina bere aitarentzat erantzun argi eta askia.

Seme bigarrena burua goitik behera mugitzen ikusi ostean Iñigorengana zuzendu zen atzera eta, ezpainetan irri maltzurra behartuz, ezpata jaitsi zuen apur bana, uneaz gozatuz bezala. Bai, berari ere, hasiera batean hirak gain harturik, semea bertan garbitzeko gogo eta ideia igaro zitzaizkion burmuinetik. Ez, ez zuen egingo haatik. Iñigorentzat bazegoen herioa bera baino latz eta ankerragoa izango zen zigorra: hortik engoitik anaia gaztearen manupean izatearen umilazioa jasan behar izana, hura.

Ezpata berriro zorroratuz, Gonzalorengana joan zen patxadatsu.

-Tori –esan zion eskumako erluzean zeraman errubi eraztuna luzatuz aldi berean-. Gure arteko tratua itxi genuen egunean Baroiak egindako oparia duk eraztun hau. Igo hadi zaldira eta hoa berau egongo den tokiraino lauhazka bizian, emaiok nire oinordekoa haizen zalantzarik izan ez dezan eta erregu iezaiok hona itzultzeko berehalakoan.

Behin agindutakoa betetzera abiaturik, Iñigori hitz egin zion berriz.

-Emakume hau Baroiaren aitzin arlote piura honekin azaldu ez dela asma zezakeat –jaulki zion, Iñigok tamaina horretako balentria burutzeko beharrezko adore eta ausardiarik izan zezakeenik inoiz sinistu ez zuela argi adieraziz-. Hobe izango duk, beraz, hire arropekin atzera janztea, nik egiteko adorerik izan ez dudan zintzurrean zuloa Baroiaren gizonek egin diezaaten nahi ez izatera bederen.

Iñigo izuak eta batez ere lotsak zegoelarik, istant batez duda-mudan ibili zen.

-Oraintxe! –zemaitu zuen aitak.

Mutilaren janzkiekin Kattalinen gorpua jantzi eta gero, aitak, hilotzak berak oraindik orain erakusten ez zuen hoztasunarekin, ezpata beste behin atera eta aurrenekoan egin leku beretik zulatu zuen berriz.

Semearen begitarte ikaratuaz jabeturik, azaldu behar izanak Iñigoren

txatxukeriaren neurria emango bailuan, honelaxe jaulki zion, soraio eta mespretxukor:

-Noiz ikusi da, bada, arropak urratu barik gorputza zulatuko duen iskilurik? –eta gehitu gero, are destaina handiagoaz: -Eta orain alde egin nire begien bistatik…

Iluntzen hasia zen Gonzalo ostera agertu zenean, alboan zaldun talde ttipia zekarrela, Baroia buru zutela. Neskaren hilotzaren bueltan bildurik, jazotakoaren inguruko azalpena aditu zuten dorretxeko jaunaren ahotik, bere lehen semearen parte hartzea barne hartzen ez zuen hala-holako azalpena. Horren segidan, Baroiak ofizialei aginduak eman zizkien, zeintzuek gudarostea esperoan zegoen lekurantz egin baitzuten arrapaladan. Ondoren, hilotzari harzara begira, eta haren aurrean zetzan neska bihoztunarekiko mespretxua argi utzi nahi izan balu bezala, honelaxe galdetu zuen murrikaz:

-Eta non dago zerabilen zaldia?

-Ihes egin bide du –Gonzalok arrapostu aitari aurrea hartuz, hartaz geroztik egokituko zitzaion lekuaz jabetzen hasirik-. Berorrek barka biezagu baina, kezka eta presa handiz gertatukoaren berri berorri ematearen amoreagatik…

-Ulertzen dut, ulertzen dut –Baroiak ihardetsi, etorkor-. Tira, pena da hala ere animalia-ale ezin ederragoa baitzen -eta gero, zeru izartsura igorririk bista-. Gau oskarbia dugu. Ongi da, ongi da… Zoragarria izango da gero ikuskizuna!

Mandiltarren dorretxean zeudenak, ordea, ez ziren segidan jazo zena ikusteko parada izan zuten bakarrak. Basoko zuhaitzen artean itzalgaizka Itzurde zegoen dardarka, ibarretik heltzen ziren garrasi eta heiagorek izututa. Haren begi beltzak gorriak bilakatuak ziren, zerurantz altxa suzko mihien distirak gorriturik. Itzurderen begien dirdira piztu eta zeruko

izarrena amatatzen zuten garrak, haiexek, txikizio eta heriotzez beterikoak.

Geroago, beldurra eta nekea gailendurik trostan hasi zen, ziur eta aske, ibarretik haraindi sugetzar mitologiko bat lez sigi-saga egiten zuen lastargien zutabe erraldoitik urruntzen; Kattalinen herrixkan utzitako hondakin, errauts, heriotza eta menperatze berbera erresumako bazter guztietara eramango zituen lastargien zutabe herrestaria, hura.



**Josu Bravo Maestrojuan**
1959
Tafalla

2003. urtean atxilotu eta espetxeratu zuten.



Centro de Cumplimiento de Topas
Ctra. N-630, Km. 314
37.799 Topas (Salamanca)

Una flor puede ser un
ramo;
una lágrima un
llanto;
un beso, un te
amo;
una mirada te
digo, te hablo;
un adiós, te espero,
te aguardo.

Cerrada es la noche
mas no ciega; está
mirando dos amores que
en un recodo de su manto,
amor se juran, amor del
de veras; testigos son
sus corazones que con sus
tic tac, así lo afirman.
Cerrada es la noche
mas no ciega.

Arbolak gara
ta gure fruituak
HITZAK dira
mundutik zeha
Euskara.

*2007-12-20*

**Noche**

Llega la noche;
silenciosa compañera.
Yo le hablo, mas ésta
no me contesta; me mira
y en su semblante creo
adivinar luces que
parpadean;
son sus ojos hechos por
estrellas; algunas caen
veloces. Encendidas
¿Serán lágrimas?
Demasiado Hermoso para
ser de pena;
¿O quizás de alegría?
me gustaría...
Hablo a la noche, mas ésta
no me contesta.

*2008-01-16*

En las profundidades del Mar
guardo mis secretos.
Los vigilan algas y corales
de colores esbeltos;
van y vienen al capricho de
las corrientes; mas, el cofre
no se mueve; se queda en
el fondo, esperando a que tú,
sirena curiosa, lo abras con
un beso.

Nadie es ajeno a la muerte,
el rico, el pobre, el que se cree
omnipotente; a todos nos abraza
con su brazo ¿inerte? No.
Está vivo; es el brazo que nos
coge de repente; no avisa, no
advierte; aquí estoy presente;
no me tengáis miedo, igual
de otras vidas soy puente.

Tienes a las olas
por Hermanas;
es tu canto, de
navíos su trampa
tu melena trenzada
como fuerte maroma
al fondo del Mar los
arrastra.

## Bizitza

No soy mago, no tengo la varita mágica para componer
la vida; ésta llega y llega como llega; tarda nueve meses
en hacerlo; no tiene prisa; pasa según en quién se engendra
y se va como llega; a veces ¿tarda? Otras ¿tiene prisa?
Mejor dejarla; no soy mago, no tengo la varita mágica.

*2007-12-20*

¿Por qué me roban las estrellas?
¿Por qué me roban los luceros?
¿Por qué no puedo ver la noche vestir
de gala para ir a un evento?
Al evento de la Luna que llega montada
sobre un carro esbelto, tirado por una osa
que vive en el firmamento.
Empieza la noche, empieza el evento,
mas yo no puedo verlo; me han robado
las estrellas, me han robado los luceros.

*2007-12-13*

Cae la noche
hoy antes; pues así
lo han decidido las nubes
color azul turquesa;
se presenta ante nosotros desnuda,
bella, pues su vestido reposa sobre
ellas; duerme nuestros cuerpos
y durante su paseo por ellos vela.
Cae la noche,
hoy antes; pues así
lo han decidido las nubes
color azul turquesa.

*2008-01-01*

Duermo y sueño.
Despierto y siento.
¿Olvido el sueño?
¿O lo estoy viviendo?
¡Dímelo tú!
    que eres ello.

*2008-01-01*

Cruzo el puente de la vida
mas no miro hacia atrás
y si he olvidado algo de equipaje
sin remedio, ahí se quedará
cruzo el puente de la vida
no miro hacia abajo, mas
vértigo no me da:
Voy despacio hacia delante
no sé, no me importa lo que
al final ésta me deparará,
cruzo el puente de la vida
y no miro hacia atrás.
Amanece, estás a mi lado;
cómo quisiera que de nuevo
la noche nos cubriese con su
manto, y con nuestros cuerpos
de su frío abrigarnos; enredán-
dolos como ovillos de lana,
tejiendo con ellos el nido
donde amarnos.

Nace el amor
o, ya, ¿había nacido?
sí, lo había hecho, pero
estaba escondido, muy
muy adentro; allá
por el corazón, junto a
los sentimientos;
nace el amor
o, ya, ¿lo había hecho?

Se mezcla mi alma
con las olas y de su
fuerza se empapa;
habita luego mi cuerpo
y el ritmo de las mareas
en él mandan.

¡Somos de la vida
marionetas.
Somos del Universo
sus cometas.
Somos almas errantes
que pertenecen a la
Tierra!

*2008-03-25*

Encerrado entre cuatro paredes
blancas, azules y verdes.
No tiene escapatoria, no se mueve,
no le dejan, no se atreve; tiene
que pagar unos intereses, está preso
entre cuatro paredes, blancas,
azules y verdes.
Se apellida mil eurista, de nombre
joven; sus colores "preferidos" en todas
sus gamas; blancas, azules y verdes;
esas serán sus vistas hasta que la
Tierra le cubra su rostro pálido, blanco
un día azul donde hagan de testigos
cipreses verdes.

La arena recoge tus
Huellas; Ahí, se quedan.
¿Para ella? O mejor
hasta que la marea
nueva lo quiera.
Pueden ser tu cuerpo,
tu alma; no importa,
en los dominios del Mar
estaban marcadas, y
como anclas de coral
¡en sus entrañas quedarán
fondeadas!

*2008-04-30*

Blanco de tus nieves
de tus monjes el naranja.
De los dos tus montañas
son su morada.
Tus hijos son diseminados
mas sus corazones viven
en Latsa; sus manos recorren
mil veces sus rosarios, recitando
mantras.
Eres Tibet reposo de sus almas
eres tierra de nieves, colores
Y Lamas.

Front Tibet.

La Tierra llora y ni
el Mar con toda su agua,
ni el desierto con su arena
sus lágrimas pueden fundir
en ellas; son lágrimas del
corazón, son lágrimas que
hacen mella, aunque nadie
quiera verlas.

La Tierra llora.



**Oier Goitia Abadia**
1974
Galdakao

2005. urtean atxilotu zuten.



Centre Penitentaire Meaux-Chauconin-Neufmontiers
Rue de lyceé-RD 5
B.P. 20.177
77.351 Meaux Cedex

## Espetxeko ur botila

Ur botila, kontsumitu zaitut.

Ur botila, zu kontsumitzera behartu naute,
eta zure gardentasuna,
eta zure transparentzia,
zure zapore-eza da nire errealitatea,
ezin zaitudalako esnearekin nahastu
eta kafez mozorrotua dastatu,
ezin salda-beroa bazinalez irentsi ezta gozotasunez edan ere,
horregatik nire sabeleko negarrak entzuten dituzu
horregatik giltzurrunen krisi oihu hauek.

Ur botila, halabeharrez kontsumitu behar zaitut,
nire gorputzeko igarobide guztietan nahi bazaitut,
nire gorpuzkerak zu erregutzen baitzaitu.
Ur botila, zulako bat egunero kontsumitzera behartu naute
bataila hau irabazi nahi badut,
bataila honetatik zutik ateratzeko.
Ur botila bat aldiro, aurrekoa hustu badut.

Ai, ur botila, zu alboan zaitudan bakoitzean,
a zelako hotzikarak sortzen dizkidazun.
Bai, ur botila, gure duintasunaren lekuko izanik
ez dakit etsai edo aliatu zaitudan,
ez dakit zure plastikozko gorputz horrengatik ote den,
baina hotzikara sortzen didazula ikusten zaitudanean
ez inoiz ahaztu.

Ur botilekin soilik elikatzen diren gizakiak
nonbaiten ere badabiltzala irakurtzerakoan,
edota zu zeu ere baztertzeko kapazak izan direla jakiterakoan.
Ai, ur botila, zu bihurtzen zara berriro gure errealitatearen protagonista,
eta ikusten zaitudan bakoitzean beraiek gogora dakarzkidazu
eta ikusten zaitudanean trauma bat sortu didazula badakizu.

Hala ere, kontsumituko zaitut urez betetako plastikozko botila,
kontsumituko zaitut,
bataila honetatik zutik eta duintasunez atera nahi badut.

## Garagardoa Preso

Zurrupatu zaitut
inoiz aldatu ez bazina bezala
zurrupatu zaitut.

Ez zara asko aldatu
berdin ikusten zaitut
beti bezain errubia.

Zenbat jai elkarrekin
zenbat gaupasa bata bestearen alboan
eta oraindik kolore bera duzu.

Txapel bits txuri berberak
oraindik janzten zaitu
gas indar berberak bultzatua.

Baina zu dastatu ostean
zerbait nabaritu dut gurean
barrutik aldatu zara
txinpartak ez dira agertu.

Ezagutzeko paradarik gabe
itsuturik kontsumitu zaitut
alkohola ere faltan duzula.

Txosna amankomuneko iragana
libreak gineneko garaiak
lehen sortzen zenizkidan pozak
lehen kentzen zenizkidan koldarkeriak
debekatuak dituzu leku honetan.

Inposatu dizuten karaktere berri horrekin
ez zaitut asko maite ez
baina ohituko natzaizu
baina ohituko natzaizu.

Zurrupatu zaitut
inoiz aldatu ez bazina bezala
zurrupatu zaitut.

## Buruan-Pitzadura Antzerki Taldea

*Kultureta koadrila bati*

Antzokiko oihalak gora egin, eta banan-banan agertzen dira;
erizain pornografa batek bahitu zuen *Baqué* etxeko txirringetan zebilen bat;
Tolosaldeko babarrun-atomoen tesiagatik saritutako Nobel bat;
eskubiarekin jotzen ez dakien pilotari amateur bat;
eta petanketan aditua den unibertsitario bat.
Antzokiko oihalak berriro behera egin, eta erreberentzia eginez desagertu dira.

Zertan ari dira, halako aktore batzuk oholtza gainean?...

-Jaun-andreok ongi etorriak, hementxe duzue!:
*Jauregiko gizona letxuga bat buruan duela,*
*Pinotxorena bezain luzea eta Dumborena den sudurrarekin.*
-Aldiz, hortxe dagona!:
*Baserrikoa, Marie Curie da, eskualdeko markesa bera,*
*gazteleraz hitz egiten duen bakoitzean, «un kortau miau, miau, miau» dio.*
-Haren atzean!:
*Bere senar biboteduna, arrano beltzaren hiriburuko*
*bakeroen ibilera antzeratuz, Marbellako foruzain xelebreena bera.*
-Eta ekitaldiarekin bukatzeko, jaun-andreok!:
*Inoiz ikusi duzuen liburu jale erudituritk handiena,*
*dortoken lasaitasunaz Mañukorta bertsolarian errenkarnatua.*

Zertan ari dira, halako pertsonaia batzuk zirku erdiko ikuskizun pistan?...



**Joxe Karlos Apeztegia Jaka**
1964
Iruñea

1992 urtean atxilotua.



C. P. Huelva II
Carretera de la Ribera, s/n
21.610 Huelva

## Abenduaren 31

Abenduaren 31 zen Espainiako hegoaldeko espetxe batean. Euskal preso politikoak espetxe hartako bakartze eremuan zeuden eta bizi-baldintza gogorrak pairatzen zituzten, kartzelariek gogor jokatzen baitzuten, gizarte espainiarraren bidezko mendekua gauzatzea beraiei omen zegokielako. Edo hori esaten zuten, behintzat.

Urtearen azken eguna zen eta bakartze eremuan egun horretan gaueko txanda egin behar zuten kartzelariek festarako gogoa zuten. Beraz, euskal presoen kontura "txantxaren bat" egin behar zutela erabaki zuten. Hori zela eta, gauerdian, euskal presoak lotan zeudela, bakartze eremuan isilean sartu ziren, oin puntetan ibiliz, ez baitzuten zaratarik egin nahi euskal presoak kartzelariak bertan zeudela kontura ez zitezen. Kartzelariek egindako irri txiki batzuk besterik ez ziren entzuten.

Euskal preso baten ziegako atea isilean ireki zuten geldi-geldi, pixka bat besterik ez, eta zirrikitu horretatik petardo potolo bat bota zuten piztuta eta berehalaxe atea itxi zuten. Ziegan lotan zegoen euskal presoa atea irekitzen zutela konturatu zen eta esnatu egin zen, baina oraindik erdi lotan zegoen eta ez zekien ongi zer gertatzen zen. Bat-batean, eztanda bortitz bat entzun zen euskal presoaren ziega barruan.

Eztanda gertatu zenean euskal presoa biziki izutu zen, ez baitzuen ulertzen zer gertatzen zen. Eztanda zela eta, bakartze eremuan lotan zeuden euskal preso guztiak esnatu egin ziren eta ziegako leihotik zer gertatzen zen elkarri galdezka hasi zitzaizkion. Haietako batek eztanda Fernandoren ziegan gertatua zela esan zuen eta orduan Fernandori deika hasi zitzaizkion gainerako euskal preso politikoak, baina Fernandok ezin zuen ezertxo ere entzun, bere ziegan izaniko eztandaren ondorioz gor gelditua baitzen. Fernandori beste kideek egindako deiak zirela eta, honek ez zuen erantzuten eta horrek euskal preso politikoen kezka eta larrialdia areagotu besterik ez zuen egiten.

Ordu erdia eman zuten gainerako euskal preso politikoek Fernandori deitzen, baina honek ezin zuen erantzun, ez baitzuen ezer entzuten. Ordu erdia igaro eta gero, Fernandori entzumena itzuli zitzaion berriz eta kideen deiak entzun ahal izan zituenean, leihora azaldu zen eta kideei ongi zegoela esan ahal izan zien. Fernandok ez zekien oso ongi bere ziegan zer gertatu zen, eta gainerako kideei bat-batean eztanda bortitz bat entzun zuela besterik ezin izan zien azaldu.

Gau hartan euskal presoek ezin izan zuten lorik egin, gauerdian kartzelariek haietako baten aurka buruturiko erasoa ezin baitzuten gogotik baztertu. Lasai lo egiteko baldintza egokirik ez zen izan, bizi izandako tentsioa handia izan zelako.

Biharamunean Fernandok bere ziegan petardo indartsu baten arrastoa aurkitu zuen, kartzelariek bere ziegan sartu zutena, hain zuzen ere. Fernandok salaketa egin zuen epaitegian eta kartzelariek abenduaren 31ko gauerdian egin zutena azaldu behar izan zutenean, "txantxa" bat besterik ez zela izan adierazi zuten, urtezahar gaua zela eta "txantxa" bat egin nahi izan zutela. Espainiako kartzelariak "txantxazale" hutsak dira, jakina, baina euskal preso politikoek ez omen dituzte "txantxa" xalo horiek ulertzen, gertaera honek hauxe erakusten baitu, euskaldunak umorerik gabeko jendea direla eta Espainiako hegoaldeko biztanleen alaitasuna ez dutela ulertzen, noski.

## Aktibitateak

Espetxe gehienetan aktibitateak antolatzen dira presoentzat, besteak beste, informatika ikastaroak, futbol txapelketak, xake lehiaketak, igerilekurako irteerak, literatura lehiaketak, antzerki saioak, kiroldegirako irteerak eta honelakoak.

Aktibitateak presoek zerbait ikas dezaten edo gustura aritu daitezen antolatzen dira, hauxe baita helburua, preso dagoenari nolabaiteko onura ematea, edo antzeko zerbait, espetxeak presoak birgizarteratu behar omen baititu. Edo horixe diote gizarteari mezu hori zabaltzen diotenek, nahiz eta gehienetan gezur hutsa izaten den.

Zenbait espetxetan aktibitate ugari antolatzen dira eta beste batzuetan aktibitateak xumeagoak izaten dira, baina aktibitateak onak edo txarrak izanik ere, euskal preso politikoei debekatu egiten dizkiete askotan, horiek ez omen dutelako deus ere merezi. Beraz, euskal preso politikoentzat ez dago aktibitaterik. Aktibitateak direla eta, Espainiako hegoaldeko espetxe batean kontzeptu bitxia zuten horretaz eta hori ongi ulertzeko bakartze eremurako antolaturiko "aktibitateak" ikusi besterik ez zegoen:

DISTRIBUCIÓN DE LAS ACTIVIDADES DEL MÓDULO 15

| | |
|---|---|
| LUNES | |
| MARTES | Consulta médica<br>Recogida biblioteca pedidos<br>Peluquería |
| MIERCOLES | Cambio de ropa<br>Preparar paquete de salida<br>Entrega de ropa de lavandería |
| JUEVES | Preparar paquete de salida |
| VIERNES | Peluquería<br>Entrega pedidos de biblioteca |
| SABADO | Cambio de ropa |
| DOMINGO | Recogida de ropa de lavandería |

Hortaz, espetxe guztietan presoentzat antolatzen diren zerbitzuak espetxe horretan "aktibitateak" bihurtu ziren bat-batean, baina espetxeko arduradunek horiek aktibitateak zirela azpimarratzen zuten. Izan ere, sendagilearengana joatea "aktibitatea" bihurtu zen, arropa garbitzera bidaltzea edo ilea moztea "aktibitateak" bihurtu ziren bezalaxe. "Aktibitate" horiek are gehiago indartzeko zerrenda horretan ere goizeko gosaria, eguerdiko bazkaria eta gaueko afaria sartu besterik ez zuten egin behar, baina agian hau gehiegi edo irudituko zitzaien. Auskalo!

Dena den, Madril aldeko espetxe batean garai batean ezarri zuten marka gainditzea zaila izango litzateke, presoek ziegan telebista eta irratia bazituztela esan baitzuten, eta horiek ere "aktibitateak" omen ziren, presoek beren diruz erositako telebista eta irratia, hain zuzen ere. Hori bai, telebista eta irratia erosteko dirurik ez zuten presoak "aktibitate" horiek gozatu ezinik gelditzen ziren.

## American Gangster

Aurrez aurreko ikustaldia bukatu ondoren, bi kartzelari euskal preso politiko bati hatz aztarna hartzen ari zitzaizkion, hasieran eta bukaeran hauxe egiten baita beti.

Bi kartzelariak beraien artean hitz egiten ari ziren, eta batak besteari *American Gangster* filma ikusi berria zuela eta oso ona iruditu zitzaiola esan zion.

-Bai, herenegun *American Gangster* ikusi nuen eta oso gustura egon nintzen, biziki film ederra baita.

Beste kartzelariak hauxe erantzun zion:

-Nik ere gauza bera entzun dut.

Zineman egondako kartzelariak aurrera jarraitu zuen solasaldiarekin.

-Eta orain dela gutxi ikusitako erreportaje batean ustelkeria Estatu Batuetako polizien artean oso hedatua dagoela esan zuten. Aizu, zuk ba al dakizu AEBetako polizien % 75 inguru usteldua dagoela? Hau izugarria iruditzen zait.

Ordura arte bi kartzelari espainiarren solasaldia ezer esan gabe entzun zuen euskal preso politikoak hauxe pentsatu zuen berekiko, "zuen artean ere… !".

## Hizkuntza beltza

Hiru preso arruntak afrikarrak ziren, beltzak, eta espetxe berean zeuden preso, modulu berean, hain zuzen ere. Elkarren artean oso harreman ona zuten eta askotan elkarrekin ibiltzen ziren. Modulu horretan zeuden aktibitateetan ere elkarrekin parte hartzen zuten.

Hori dela eta, egunak joan eta egunak etorri, hiru afrikarren artean sortutako harreman sendoaren ondorioz, elkarrekin ibiltzen ziren gehienetan, solasean, txantxetan, kirolean, pasieran…

Kartzelari espainiar bat hiru preso horien arteko harremanaz ohartua zegoen eta egun batean hirukoteari hurbildu zitzaion.

“Aizue”, hasi zen kartzelaria, “zuek beti elkarrekin ibiltzen zaretela ohartu naiz. Ez al da egia?”.

Hiru afrikarrek baietz erantzun zioten, beraien artean adiskidetasun ona sortua zela.

Kartzelariak hauxe esan zien orduan:

“Baina, horrez gain, bada nire arreta bereziki erakarri duen zerbait. Zuen artean beti espainieraz aritzen zaretela ohartu naiz, hizkuntza beltza egin beharrean espainiera egiten baituzue.

»Zer, espainieraz hitz egitea gustatzen zaizue, ezta? Hau zeharo ulergarria iruditzen zait, hizkuntza hau hitz egiten denean zerbait berezia sentitzen baita, jakina!

»Espainieraz hitz egitean sentimendu indartsua sortzen da, hau gauza handia baita. Eta zuek hori ongi ulertzen duzuela ohartu naiz, esan beharrik ez.”

Kartzelari espainiarra isildu zenean, afrikarretako bat hitz egiten hasi zen.

"Begira, ni Senegalgoa naiz, hau Ghanakoa da eta bestea Angolakoa, eta ezin ditugu gure jatorrizko hizkuntza afrikarrak erabili elkarri ulertzeko, ez baitiogu elkarri ulertzen. Ezinezkoa zaigu. Beraz, hori dela eta, espainieraz hitz egin behar dugu elkarri ulertzeko, hauxe baita bide bakarra."

Azalpen xume eta guztiz ulergarri hau entzun ondoren, zer esan ez zekiela gelditu zen kartzelaria, bere ustez afrikarrek beraien artean espainieraz behar bezalako espainiarrak izateko hitz egiten baitzuten, espainiarra izatea zerbait handia omen delako. Edo horixe esaten dute batzuek, baina nik ez dakit, espainiarra izateari buruzko kontuak arrotzak baitzaizkit.

## Jainko txikia

Kartzelari espainiarra naiz, Manolo dut izena eta Espainiako hegoaldeko espetxe batean nire zeregina burutzen dut, bertako segurtasun batzordean lanean aritzen bainaiz, eta nire egitekoa biziki garrantzitsua dela iruditzen zait.

Aizue, segurtasun zuzendariordearen konfiantzazko gizona izatea ezin da esan inondik inora kontu makala denik, ez horixe! Euskal preso politikoek idatzitako eskutitzak irakurri eta aztertzen ditut, telefonoz hitz egiten dutena entzuten dut eta bisitaldietan aipatzen dutena zehatz-mehatz aztertzen dut. Beraz, nire zeregina biziki garrantzitsua da, Espainiaren alde lanean aritzen bainaiz gau eta egun, eta harro nago horretaz.

Arazoren bat sortzen denean euskal presoekin hitz egitera joaten naiz, zuzendaritzaren ordezkari gisa, eta horrek zinez garrantzitsua naizela sentiarazten dit. Egia esan, pedante "maitagarri" bat naiz, orojakile baten moduan jokatzea izugarri maite dudalako, nik den-dena baitakit. Hori dela eta, jende guztiari modu bitxiaz begiratzen diot, nagusitasunaz, gainerako guztiak ni baino gutxiago balira bezala.

Izan ere, jainkoa banintz bezalaxe jokatzen dut, nire burua jainkotxo baten parekotzat baitut, baina umekeria besterik ez dut. Ume handi bat naiz, baina ume botereduna, eta askotan ume batek bezalaxe jokatzen dut nik esanikoen aurrean amore ematen ez dutenean, mendekuak direla, zigorrak direla, debekuak direla… Zitalkeria ere nire ezaugarri kuttuna da. Umeari arrazoia ematen ez zaionean edo gozokia kentzen zaionean bezalaxe gertatzen zait niri ere, nire itxura serio eta dotorearen pean bizi den ume ziztaria ateratzen baitzait.

Dena den, ez omen naiz nik uste bezain garrantzitsua, eta hori ulertzeko orain dela urte batzuk gertatu zitzaidana kontatuko dizuet. Andaluziako beste espetxe batean ere segurtasun batzordean aritzen nintzen, baina arazoa izan nuen eta egitura horretatik kanporatu ninduten. Hori zela eta, hurrengo lau urteak espetxeko sarrerako moduluan eman behar

izan nituen, presoen hatz-markak hartzen eta honelako zeregin arruntak burutzen. Hala ere, horiek iraganeko kontuak dira orain espetxe berri honetan segurtasun batzordean ari naizelako berriz ere, euskal preso politikoen gaineko kontrola zuzenean burutzen, eta harro asko sentitzen naiz.

Ene ustez, begirunea oso garrantzitsua da, beti ere heziera onean jokatzea, eta horrexegatik oso dotore hitz egiten dut, baina hau guztia faltsukeria besterik ez da, hitz dotore horien atzean horixe baitago. Nire hitzek ez dute inoiz egia esango (edo oso gutxitan), baina begiruneaz jokatzea eta modu onean hitz egitea (edo horren itxura egitea) oso garrantzitsua iruditzen zait, horren atzean gehienetan faltsukeria eta gezurra besterik ez badago ere.

Ez dakit esan ote dudan, baina koldarra naiz eta buruz burukoan hortzak erakusten dizkidatenean urduritasuna nitaz jabetzen da eta beldurtu egiten naiz, baina hogei bat kartzelarirekin batera azaltzen naizenean munduko gizonik handiena eta ausartena bihurtzen naiz. Espainiarra naiz eta ez dakit bestela jokatzen, esan nahi baita, faltsukeriaz eta koldarkeriaz, baina hau niri ez zait axola, presoek nire boterea sentitzea atsegin baitut.

Bestalde, *El Mundo* eta *La Razón* egunkarietan Euskal Herriari buruz zabaltzen diren gezur guztiak itsu-itsuan sinisten ditut, eta horixe da norberari gerta dakiokeen okerrena, esan nahi baita, norberak zabaltzen dituen gezurrak egiazkoak balira bezalaxe sinistea, eta horrek pentsarazi beharko lidake agian ez naizela nik uste bezain azkarra, ezer ez baitakit.

Hori dela eta, Espainian torturarik ez dagoela badakit, Euskadi ta Askatasunakoa izatea bizitzeko modu bat bihurtu dela badakit eta euskal presoen abokatuak ere susmagarriak iruditzen zaizkit, horixe baita *El Mundo* eta *La Razón* egunkarietan irakurtzen dudana. Espainian ideia eta egitasmo politiko guztiak arazorik gabe defenda daitezke, autodeterminazio eskubidea izan ezik, jakina, hori onartezina baita.

Espainian nazionalismo espainiarrik ez dagoela ederki dakit nik, hori egia baita, baina ni espainiarra naiz, eta harro nago horretaz. Espainia munduko zortzigarren potentzia ekonomikoa dela esateaz ez naiz behin ere aspertzen, horixe baita askotan errepikatzen dudan leloa, espainiarra izatea gauza handia iruditzen zaidalako, baina ni ez naiz nazionalista espainiarra, ezta pentsatu ere.

Esan bezala, segurtasun batzordeko kide izateaz harro nago, nire eginbeharra demokrazia ahalik eta gehien garatzeko guztiz beharrezkoa baita. Euskal preso politikoak gaizkileak direla uste dut, baina ez dira gainerako gaizkileak bezalakoak, bestelakoak baizik. Beraz, horrek jokabide berezia eskatzen du eta hortxe nago ni, gaizkile horien aurkako zeregin garrantzitsua betetzen, Espainiaren aldeko militantzia hau ezinbestekoa baita.

## Sendagilerik ez

Gaueko 11ak ziren Andaluziako espetxe batean eta preso guztiak ziegetan hertsirik zeuden, batzuk atsedena hartzen ari ziren bitartean besteak lotan zeudela. Bat-batean preso arrunt bat gaizki sentitu zen eta kartzelariaren arreta erakartzeko ate joka hasi zen. Jo eta jo aritu zen, baina gaueko txandan zeuden kartzelarietako bakar bat ere ez zen azaltzen. Hamar bat minutuz ate joka aritu ondoren kartzelari bat azaldu zitzaion, zer gertatzen zen galdetzera.

Kartzelaria haserre zegoen. Preso arrunta ate joka hasi baino lehen alferkerian murgilduta gustura asko ari zen, lotan, telebista ikusten, kartetan edo alkohola hartzen, eta orain preso batek zer nahi zuen galdetzera joan behar zuen.

Ziegaraino heldu zenean, hauxe galdetu zion preso arruntari, zakarkeriaz:

-Zer arraio gertatzen zaik? Zergatik hasi haiz ate joka?

Presoak gaizki zegoela eta sendagilea behar zuela esan zion.

-Ez nago ongi. Gaixorik nago eta sendagilea ikusi nahi dut.

Kartzelariak hika hitz egiten zion presoari.

-Sendagilea ez zegok hemen, eta egongo balitz ere lelokeria batengatik ez lukek etorriko.

Presoak gaixorik zegoela esan zion kartzelariari berriz ere.

-Aizu, baina ni ez naiz ongi sentitzen eta sendagilea ikusi nahi dut.

Eta kartzelariak hauxe erantzun zion:

-Sendagilea hemen ez dagoela esan diat –kartzelariaren doinua gero eta zakarragoa zela.

Baina presoak ez zuen amore ematen.

-Orduan zer egin behar dut nik?

Kartzelariak emaniko erantzunak konponbidea garbi adierazi zion.

-Kanpaia jo ezak eta hori egin ondoren hobeki sentitzen ez bahaiz, hirurogei flexio egin itzak, eta gero beste hirurogei. Eta ate joka hasten bahaiz berriz ere, nire lankideekin itzuliko nauk eta egurtuko haugu. Ongi ulertu al duk?

Eta hau esanik, kartzelariak alde egin zuen.

Kartzelariaren "profesionaltasun bikaina" ikusita, presoak tokiko espetxe zaintzako epaitegira idatzi zuen kartzelariaren portaera salatzeko. Salaketa ez zitzaien espetxeko arduradunei batere atsegin izan, eta presoa espetxeko modulurik txarrenera eraman zuten, egunero droga, miseria eta istiluak besterik ez zeuden modulu batera hain zuzen ere, kartzelarien aurka salaketarik ez dela egin behar ikas zezan. Dena den, afera honetan mendekua ez zen sekulakoa izan, askoz gogorragoa izan zitekeelako. Beraz, salaketa egin zuen preso arrunta zoritxarrekoa zenik ezin liteke esan, ez horixe, berak mendeku txiki bat besterik ez baitzuen pairatu.

## Urrutiko ostatua

Espetxe hura Espainian zegoen, herri handitxo baten ondoan, eta herri handitxo horretan ostatua zegoen. Espetxe horretan zeuden euskal preso politikoen senideek gela hartzen zuten ostatuan, Euskal Herritik oso urruti zegoen espetxe horretan zeuzkaten senide espetxeratuak ikustera joaten zirenean.

Ostatuko nagusia gizon jatorra zen, zintzoa, eta euskal presoen senideekin harreman ona garatua zuen, urteen indarrez sorturiko harremana, hain zuzen ere. Adibide moduan, gelak hartzeko euskal presoen senideei prezio merkeagoak jartzen zizkiela esan behar da.

Garai batean ere, ondoko espetxeko kartzelariek gelak alokatzen zituzten ostatu horretan bertan, baina egun batez ostatuko nagusiak bezeroen artean kartzelaririk ez zuela onartu behar erabaki zuen. Eta halaxe gertatu zen, ostatu horretako ateak itxita gelditu baitziren gela hartu nahi zuten kartzelarientzat.

Kartzelariek ostatu horretan euskal presoen senideek gela hartzen zutela bazekiten, eta hori ez zitzaien batere zuzena eta onargarria iruditzen. Hori zela eta, kartzelariak ostatuko nagusia mehatxatzen eta beldurtu nahirik hasi ziren, euskal presoen senideak ostatuan onar ez zitzala nahi baitzuten.

Izan ere, kartzelariak ostatura joan ziren bertako nagusiarekin hitz egitera eta hauxe esan zioten, ostatuan ez zituela euskal presoen senideak onartu behar, euskal presoak hiltzaileak zirela, terroristak zirela eta onartezina zela hiltzaile horien senideak hartzea.

Esan bezala, kartzelariek ostatuko nagusia beldurtu nahi izan zuten. Nahi bai, baina ez zuten deus ere lortu. Hauxe da ostatuko nagusiak kartzelariei emaniko erantzuna:

-Bai, egia da, nik euskal presoen senideak hartzen ditut nire ostatuan, eta aurrerantzean ere honela jarraitzeko asmoa dut. Eta ba al dakizue zergatik? Bezero onak dira, begirune eta heziera handiz jokatzen dute beti, ongi ordaintzen dute eta ez dute arazorik sortzen.

»Aitzitik, zuek aspaldi nire ostatuan ez onartzea erabaki nuen. Ba al dakizue zergatik? Zuek mozkortu egiten zineten, istiluak sortzen zenituzten, gelak izorratzen zenituzten eta berandu eta gaizki ordaintzen zenuten.

»Eta solasaldia bukatu da. Nire ostatutik alde egin ezazue.

Eta gaur egun ere, euskal preso politikoen senideek gela hartzen dute ostatu horretan ondoko espetxean dauzkaten senideak ikustera joaten direnean.

## Zenbaketa

Gaueko zenbaketa egiteko ordua zen. Espetxe hartako bakartze eremuan euskal preso politikoek galeria bat oso-osorik betetzen zuten, hamar ziegak beraientzat baitziren, ziega bakoitzean preso bat zegoela. Baina ziega bat hutsik zegoen, bertan zegoen euskal presoa aurreko egunean beste espetxe batera eraman baitzuten UNED-eko azterketak egitera.

Zenbaketa egin behar zuen kartzelaria galerian sartu zen. Mozkortuta zegoen. Oihu eginez zenbaketa egin behar zela esan zuen zakarki eta zenbaketa egiteari lotu zitzaion. Ateetako behatxuloak indarrez, kolpe bortitz batez, irekitzen eta ixten hasi zen, eta zenbaketa burutu zuen galeriako hamar ziegetan, baita hutsik zegoen ziegan ere. Ziega horretan ez zegoen inortxo ere, hutsik zegoen eta argia itzalirik zegoen, baina mozkorturik zegoen kartzelariak ez zuen ezer arrarorik sumatu.

Zenbaketa egin ondoren galeriatik atera zen, baina hamar minuturen buruan zenbaketa gaizki egin zuela ohartu omen zen nonbait (bederatzi preso zeuden, baina kartzelariak hamar zenbatu zituen) eta zenbaketa berriz ere egitera itzuli zen. Oraingoan ez zuen ezer esan, baina euskal presoak zeuden bederatzi ziegetan zenbaketa egiteari lotu zitzaion, ateetako behatxuloak indarkeriaz irekitzen zituela.

Zenbaketa orain ongi egin ondoren, galeriatik atera zen, baina atera baino lehen hauxe esan zuen: "Hurrengoan zenbaketa karneta ahoan duzuela egin beharko da" edo antzeko zerbait. Mozkortuta zegoen eta hitzak ez zitzaizkion ongi ulertzen, baina hitz horiek kartzelariaren amorrua adierazten zuten, berak biziki gorrotatzen zituen euskal preso politikoen aurrean lotsagarri gelditua zela ohartu baitzen.

Kartzelari horrek gaueko txanda egin behar zuen, baina mozkortuta zegoen eta ziurrenik gau osoa lotan emango zuen. Gau horretan presoren bati zerbait gertatu izan balitzaio (gaixotu edo) auskalo zer gertatuko zatekeen. Larrialdiren bat gertatu izan balitz, mozkortua zegoen kartzelariak ezingo zukeen inolaz ere laguntzarik eskaini, baina zorionez gau hartan ez zen ezertxo ere gertatu. Inortxo ere ez zen gaixotu eta ez zen inolako larrialdirik izan. Zorionez!

## Zikinkeria kontuak

Espetxe hartan garbitasun baldintzak tamalgarriak ziren. Espetxea zaharra zen eta zikinkeriak ia bazter guztiak hartzen zituen. Preso arruntek, beti bezala, ziegetako leihoetatik janaria botatzen zuten patiora, baina espetxeko arduradunek ez zuten ezertxo ere egin zikinkeriaren arazoa konpontzeko, eta urteak aurrera joan ziren. Beraz, horrelakoetan lehenago edo beranduago gertatzen den bezalaxe, arratoiak agertu ziren.

Egoerak muga guztiak gainditu zituen, baina arazoari konponbiderik ez zitzaiola jartzen ikusita, bertan espetxeraturik zeuden euskal preso politikoek presoen bizi-baldintzez, eta oro har egoeraz, arduratzen zen elkarte bati espetxeko egoeraren berri ematea komenigarria izango zela uste izan zuten. Eta horixe egin zuten.

Hortaz, espetxe horretan zeuden garbitasun baldintza tamalgarriei buruzko salaketa elkarte horretara heldu zen eta bilera batean afera hau aztertu ondoren, salaketa aintzat hartu behar zela erabaki zuten, bertan esaten zena larria baitzen. Hori zela eta, espetxe horretara ordezkaritza bidaliko zutela adostu zuten, bertako zuzendariarekin elkarrizketatzeko.

Espetxeko zuzendariari elkarrizketa eskatu zitzaion, baita lortu ere, eta elkarte horretako bi ordezkari espetxean azaldu ziren zuzendariarekin hitz egiteko. Zuzendariak berak ordezkariak hartu eta bere bulegora eraman zituen elkarrizketa lasai asko burutu ahal izateko. Zuzendaria bere mahaiaren atzean eseri zen eta elkartearen izenean berarekin hitz egitera etorritako ordezkariak zuzendariaren aurrean eseri ziren.

Elkarrizketa hasteko zorian zeudela, bisitarietako batek bulegoko izkina batean zerbait zegoela ikusi zuen, edo hori iruditu zitzaion, eta honelaxe galdetu zion zuzendariari:

Eta hauxe izan zen zuzendariaren erantzuna:

-Bai, baina lasai, zelaian ibiltzen diren horietarikoa da eta ez da arriskutsua.

Presoen egoeraz arduratzen den elkarteko bi kideek elkarri begiratu zioten, beren buruari hauxe galdetuko baliote bezala: "Baina hau benetan ari al zaigu?".

Bai, egia zen, espetxeko zuzendaria benetan ari zen.

## Gau izartua

Gau izartu berbera kontenpla dezakegu biok
Plazer argitsu eta eroso bat da
Ilargia eta eguzkia eta zerua eta izarrak
Guztiak gainera amiltzen doaz hor goitik
Amiltzen adeitsuki eta harrigarriki

Ibili orain nirekin sutan dagoen zerua
Eta izan zoriontsu nire konpainian
Ibili orain nirekin gau izartuaren azpian
Plazer argitsu eta eroso bat da
Planetek gure inguruan grabitatzen dute
Eta izarrek, izarrek inguratzen gaituzte
Galaxiek talka egin eta behera datoz euria bezala
Berandu da baina oraindik ez da inoiz
Badirudi zoriontsuak izan gaitezkeela
Mendetan halaxe botata egon gintezke
Zentzuren bat aurkitu nahirik honi, laztana
Kometak antolatzen saiatzen diren bitartean
Han gorantzago beti estratosferan

Gau izartu berbera kontenpla dezakegu biok
Gure Unibertsoa, kosmologia ere badelako.

## Errealitate poema

Errealitatea gutxien arduratu behar gaituen horixe da
Errealitatea hor baitago beti / nahikoa deseroso
Nahikoa mingarri / gauza eder eta beharrezkoagoek
Gure atentzioa eta zainketa eskatzen duten bitartean

Inola inon nahikotzat jo ezin dugun horixe da errealitatea
Inoiz miretsi edo idolatratu ezin duguna
Kasualitatea delako / bizitzan soberan dena delako
Errealitate zikin hori / hala nola elurra bera askotan zapaltzean
Zuritasun lokaztu hura / beti aspertzen eta
Lilura galarazten diguna / bazter utziaz baino ezin da aldarazi
Bera baino indartsuagoak garela erakutsiz

Bizitzari eta pertsonei konfiantza egin behar zaie
Arrisku egoeran edo zalantzaz beteak daudenetan
Eurengan ernatzen diren bertuteetan
Galdera eta zalantza guztietarako soluzioak
Guhaurrengan baitaude / ezezagunaren sakonean
Araka dezagun geure buru-bihotzetan
Sartu gaitezen hortzetaraino armatuak / eta arakatu
Ez dago errealitate handiagorik barruan duguna baizik
Horregatik pertsona gehienak bizi dira hain irrealki;
Uste dutelako kanpo irudiak errealitatea direla eta
Barne munduari adierazi dadin baimentzen ez diotelako
Oso zoriontsua izan daiteke halaxe / bai horixe!
Baina bestea ezagutzen denean / ezin da
Gehiengo demokratikoaren bidea hautatu
Gehiengoaren bidea erraza da
Geurea zaila eta ederra
Ibil gaitezen
Erdu eta
Goazen.

## Ez didazu idatzi

Ez didazu idatzi zure itsasertzean / han urrin eta ferde
    olatuak, esturagatik bezala, bortitzago puskatzen direla
Ez didazu idatzi, euriak zure leihoan jotzean egiten duen soinua ezin tristeagoa dela
Ez didazu idatzi, gau-zeruan izarrak edertasun gutxiagoz eskegitzen direla
Ez didazu idatzi, promenatzean aurretik oinezkoek utzitako oin-arrastoak aztertzen dituzula
Ez didazu idatzi, sasietan bildu ditzakedan iratze mota guztiek batera ere
    ez ninduketela *iratzeis améliensis* bat aurkitzeak bezainbat poztuko
Ez didazu idatzi, Txindoki, San Fausto edo Ursuiara igotzea baino neke eta
    plazer gehiago eragingo lizukeela ene gainera igotzeak
Ez didazu idatzi, ni zurea naizela, eta orain bagoazak batera jo eta iristera, kariño
Ez didazu idatzi halakorik falta naizenetik
Beste behin ere banekien, ez zenidala idatziko halakorik
Baina sorpresaren baterako prest nengoen;
    beldur amets eta logura artean egunak pasa dituenaren antzera banekien
    gortina itxien atzea igaro duenak bezala
    eta gauez leihoa irekitzean harritzen ez dena bezala
Badakielako, gaua orain hemen dela, gau sakon eta ederra
Horregatik pixka bat gehiago maite zaitut oraindik
Horregatik saiatuko naiz indar gehiagoz halakorik irakurri ez ezik entzute aldera;
Zure eskua nire kokotsean,
    hatzekin masaila igurzten,
        zure aingura ezpainetatik nire belarrira
            samur eta goxo xuxurla diezadazun lortzea
                ameskeria badirudi ere
Izan ere zeure begietara begira bizi naiz
Eta ez da oso fetitxismo handia hori
Mundu guztia zerutarki bizi daiteke zeurea bezalako begiradapean
Iltze soaldi sarkorra duzu
    baina hori gutxi da
        bada polizia kalean
            begirada hori mantentzen duena

Zuk begirada horren kuraia duzu eta batez ere begiradatik haraindi begiratzeko ahala;
Harantzago so egiteko boterea da esentziala dena eta zuk ahalmen hori duzu
Horregatik bizi naiz ni ere zure begi ferdeetara makurtua
Zeure begiak iraganeko gatazkez baino etorriko diren garaitzez mintzo zaizkidalako
Bi belaze ikusten ditudalako
Espazioa, zabaltasuna, eta aukerak / esperantza
Izan ere itsasoari begira bizi naiz
Fantasia poetikorako espazio amaiezina dena
Eta itsas infinituari begira pasa ditzaket bizitzako gau-egun guztiak / zure belar begiekin.

## Agurra

Agurra eskaintzen dizut
Mugaren zeharkatze tragikoaz geroztik
Ez dakit noiz izango naizen bueltan
Bihar mugitzera behartuko gaituzte
Beti urrinago / harago / beti ifarralderago
Zure kostaldeko bularrak musukatzen zituen
Maitale ahalke bat gehiago besterik ez naiz
Baina jakingo duzu nitaz geroan beharbada
Joan baino askoz beranduago egin bezala
Atxilo hartu baino lehenago
Edo erori baino zerbait fiteago
Kalakan ariko natzaizu lotsati
Idatziko dizut zerbait berezia
Enboskatuen zori zoriontsuan
Neguko ene kuarteletik
Borrokaren ezlekutik
Edo galeren zulotik
Leihoren batetik
Agurra eskaintzen dizut
Gezurtiak direla jakinik
Adagio alferrak
Klixe hutsak
Moral ergelak

Zutoihalak bailiran zehatzen eta astintzen ditugunak
Sendia, lagunak eta amoranteak baretzeko formulak
Eskuarki agurrak zerraldoak edo
Presondegiak izaten baitira
Memoriara jaurtiriko uharkak
Jausi egiten dira
Agurra eskaintzen dizut zeren
Agian hau guzti hau
Gehiago ala gutxiago
Zu besarkatzeko aitzakia
Handi bat baino ez da
Etsaiek eta ahanzturak baitakite
Eta betidanik jakin izan dute
Beren bakardade-arrapalan ez direla kabitzen
Enamoratuen besarkadak eta musuak
Ametsen besarkadak
Besarkadak.

## Poemak zirriborratzen

Erosoago bizi izan nahiko banu
Lan gutxiaz, aise diruz eta ohorez
Eta arruntagoa banintz;

Gorputza botako ez banu
Itsaso distiratsuetara
Igeri egiteko olatuekin, olagarro eta uretako sugeekin;

Eta hegoak erreko ez banitu
Eguzki aurrean hegan egiteagatik
Antzara, hontz eta zaldi zuriekin;

Izotzeko pista hotz eta ederrera irrist egingo ez banu
Pitzatzen eta urtzen ikusi eta
Dantzan, mugitzen jarraitzeko;

Itzalen armada zerbitzatuko ez banu
Neguko kuarteletan babestu eta
Enboskatuen mundu zoriontsuan bizitzeko;

Eta polizia sekretua ni zelatatzeko itzuliko ez balitz
Kalean, geltokian, autoan;

Nagoen tokian geratuko nintzela uste al duzu
Poemak zirriborratzen
Alegiazko ametsak eginez
Zure gutun bat jasotzen dudan aldiro?

## Mudantza poema

Ongi etorri lerro hauetara, gerra bat dago
Baina eroso egon zaitezen saiatzera nator
Ez ezazu nire kaligrafia jarraitu, urduritasuna baino ez da
Ez al zintudan laztandu izkiriatzen dudan esku berberekin?
Ez al nizun izkiriatu azkenengoz, hemendik ezlekutik?
Etxea uztera noa, laster herria hartua izango da
Bildu dut etsaiarentzat baliagarria izan daitekeen guztia
Helarazi diot jabeari abegizko gutunean kortesiazko agurra
Bakarrik gaude orain, etxe hutsegietan beti irteteko prest
Denborak aldatuko diren arte, baina ez dugu errekapitulatu
Beti iragana ez da hobea
Errefusatzen baitugu irmoki honakoaz beste ihesik

Agur t'erdi lerro hauetatik, aldaketa bat gehiago dator
Baina mudantzak gustatzen zaizkit, zuenon oso bestelakoak direlako
Iraganari aurre egin behar izateaz gainera
Geroaren alde gaudenez, mugitu egin behar dugulako
Libro jarraituko dugula adierazten dutelako, mudantzak
Objektu pilatuak / Aldaketa arinak
Aurre egin behar zaio oroimenari
Eta ezabatu erre desegin txikitu
Izan ginenaren arrasto guztiak
Eta bakoitza
Segitzeko
Libro.



**Unai Parot**
1958
Baiona

1990. urtean atxilotu zuten eta harrez gero espetxean dago.



C.P. Puerto III
Ctra. Jerez-Rota, km. 5
11.500 Puerto de Santa María
Cádiz

## Ardi ase txizatiak

Amazonian, behin batean, zuriak ezagutzen ez zituzten indiar batzuk "aurkitu" zituzten eta, elkartrukeetan, zuriek talde burua haien hiriak ezagutzera gonbidatu zuten, zurien aurrerapen "miresgarriak" ezagutzera.

Itzultzerakoan, hainbeste "aberastasunen" artean, berarentzat liluragarriena, harrigarriena izan zena galdetu zioten, adi-adi, begi arranpaloekin. Eta berak, "behin, zuri bat erreka batera txiza egiten" ikusi zuela erantzun omen zien, sorkari hutsal horrek…

Euskal Herrian, gero eta gehiago zaintzen ditugu gure bazterrak, gure erreketara gero eta gutxiago egiten dugu txiza eta… Ingurumena gero eta gehiago zaintzen dugu eta guztiz eskertzekoa da, zeren eta besterik ez dugu, izadiaren alea baino ez gara eta izadia hiltzen bada, berarekin batera hilko gara, ziur!

Itsasoa, mendia eta landa zaintzea, benetan, bikain dugu, baina, nire ustez behintzat, beste bi gauza ere landu behar ditugu: gure hizkuntza eta gure arteko harremanak.

Azken hogei urte hauetan, euskaraz gero eta okerrago egiten dela, euskara txirotzen dela nabaritzen da. Gero eta erdarakada gehiago erabiltzen dira eta euskara, sasi-euskara, "euskañola" bihurtzen da. Euskarari txiza egiten diogu!

Euskararenganako adeia galtzen ari da baina baita gure arteko adeia, edo begirunea ere. Lehen, bestea, kidea, oso garrantzitsua zen (askotan gure burua baino gehiago ere), euskal sena genuen, elkarkoia, taldekoia, adeitsua, *gu*, ez *ni*. Orain batzuek *ni eta Txomin* diote (Txomin eta biok), *nere aita* (*aita* edo *gure aita* esateko), *nere herria*, *nere ez dakit zer*, *gure* esan ordez. Liberalak, kapitalistak, burukoiak eta… txizatiak bihurtzen gara. Gure etsaiek antolatu duten harrapagailuan sartzen gara, ardiak bezala. *Kleenex* gizartean sartzen gara.

Ardi kapitalistak bihurtzen gara. Ardi aseak. Ardi txizatiak.

Eta hau aldatzeko, zerbait eginen dugu?

Nahia, gogoa baldin badugu, edozer gauza egiten ahal dugu eta…

*Puerto III espetxean, 2008ko irailean*



**Sergio Garcia Razkin**
1971
Donostia

1991. urtean atxilotu zuten.



C.P. Alcázar de San Juan
13.600 Alcázar de San Juan
Ciudad Real

Atzerriko liburu mardulak memorizatuz
marrazten saiatzen ginen askatasunaren bidea, orduan.
Harik eta bihotzarekin mintzo ginen egun batean
harexek iradoki zigun arte
irribarreetan erreparatu behar genuela...:
Edozein erkideren irribarre goxoan
bildurik baitaude herri oso baten desioak.

Iragan hartan, eta patioari hamaikagarren mila
buelta eman orduko, bat-batean zerurantz altxatu zuen
begirada euskaraz amesten zuen gatibuak eta, Ipar hartarantz
zihoan hegazti saldoa ikusterakoan, bat-batean etxekoentzat
mezu bat haiekin bidaltzearen aukera pasa zitzaion
burutik.
Hegazti horiek, haiek bai, oraindik orain
etxerako bidea gogoratuko zutelakoan.

Jostagarritzat ditu ideiak, ziega barruan, gatibu Pentsalariak. Batez ere inguruan duen hertsikeriari itzuri egiteko balio zaizkionean.

HUME-renak kasu: leitu berri dionean norberaren baitako ni iraunkorra ez dela existitzen; halakorik ezinezkoa delako. Haren oinarrian leudekeen ideia edota inpresioek, kanpo-errealitatean iraupen egonkorrik ez dutelako.

Gauzak horrela, aldakorra litzateke beraz -ondorioztatu du sakon gogoetatzeko ohitura duen gatibuak- bizitzan zentzurik (omen) duen guztia. Badaezpadakoa. Logikoa dena barne.

Orduan ere, debekuak ausazkoak eta ordena, ordena erabatekoa, guztiz inpasiblea. Eta kartzela bera ere, bere irmotasun beldurgarria eta guzti, entropia beraren aldagai kaxkar bat, besterik, ez da. Edo litzateke. Edo, sikiera, izan beharko luke.

Arrazoimenaren azkena zuzendu dio baina -gatibu Pentsalaria jada ohean etzanik zegoelarik- oroimenaren mamitik mintzatu zaion senak; gogoratu dionean bera bezalakoentzat badirela inoiz aldatzen ez diren gauzak... Ni-an ez ezik, kanpoan ere ondo errotuta daudenak.

Berehala Baietz onartu dio senari, apur bat bera ere oroitu ondoren, gatibu Pentsalariak. Eta loaren amaraunean jausi aurretik, xuxurla baten bidez, isiltasun hautsi berria lekuko gisa hartu nahian edo... arrazoinamendua ixten duen salbuespenak ahoskatzerik lortu du, "un pikoleto siempre es un pikoleto" esaldia bota ostean.

Vasili Grossman-ek idatzia utzi zuen nola, Auschwitz-en gatibu orok askatasunean bizitako bere iraganean zoriontsua izan zela aitortzen zuela.

Vasili Grossmanek berak ere, idatzia utzi zuen Osteko Gulag-ean gatibu orok askatasunean bizitako bere iraganean zoriontsua izan zela aitortzen zuela.

Hitz batean, Vasili Grossmanek idatzia utzi nahi izan zuen, gatibu orok bere kartzela aldiaren eguneroko arranguraren aurrean, bere iragana edertzeko joera argia zuela...

Vasili Grossman idazle gisa miresten duen gatibua baina, bere ziegako aulkitxoan eserita haurtzaroko argazkiak ikustatzen dituen bitartean ohartu da baietz, bera bere iraganean... ezinbestez egun baino askoz zoriontsuagoa izan zela...

Vasili Grossmanek idatzia utzi ez zuelako inoiz, argazkiak ikustatzen ari den gatibua ez bezala, berak kartzelako arrangura barrutik inoiz ezagutu ez zuela.

Egoera iraultzeko asmotan tematurik atera dira berriro, gaurkoan, gatibuak patiora. Betiko lez eta jarraian, lehenengo itzulitik eta ohiko martxa azkarrean, eztabaida sutsu baten bidez ekin diote gaiari.

Ez baina, haiekin batera patio bera zeharkatuz mende gehien daraman gatibuak. Azken hau isilik, isil-isilik, eta sosegu handia adierazi nahi duen irribarre mehe batekin segitzen ari baita sesioa.

Aspalditik oharturik baita, ezinbestez edo eta berezko ezintasunez ere, patioaren inguruan ematen diren birak bezain zirkularra bilakatzen dela, azkenean, bitartean plazaratzen den gatibuen iruzkin oro. Soberan frogaturik duelako abiapuntutik botatzen diren ideia zein argudioak, dagokien ohiko bide susperra burutu ostean, azkenean, ezinbestez edo eta berezko ezintasunez ere, abiapuntu berean bukatzen direla...

Etsaien odolez zehaztutako eskuak
zimurtzen hasiak zaizkigun honetan,
murruen arteko ikusmena
aspertzen hasi zaigunekoa...
Lehen hutsalak zitzaizkigun kontuak
saminez gogoratzen ditugun garaian,
etsipenez lirikarako joera funsgabe bilakatzen dela lirudike.
Gauero-gauero lokartu aurretik ziegako afixan den
Che-ren bisaiaren aldetik, begi kliska
maltzur bat jasoko ez banu...
ezinbestekotasuna iradokiz edo…



**Ibon Meñika Orue-Etxebarria**
1977
Zamudio

2004. urtean atxilotu zuten.



C.P. Curtis (Teixeiro)
Ctra. de Paradela s/n
15.310 Curtis (A Corunha)

## Oraina

1, 2, 3, 4, 5, 6, buelta; 1, 2, 3, 4, 5, 6, buelta. Hortxe *Finis Terrae* nerea; txaboloak luzeran ene hankei ematen uzten dizkion urrats kopurua. Europa mailan, demokraziaren apologiazaleek ezarri nahi duten asteko 65 orduko lanaldia baino handiagoak dira gure saioak, hemen, espetxean. Izan ere, armiarmaren hariak apurtu barik jarraitzen du. Poetak dioen bezala, *ez dugu besterik ikusi, ez dugu besterik entzun*[1].

Faxistek Pazo do Meirás baino gehiago lapurtu zioten Galizari. Oroimena adibidez. "Rexurdimento" berri baten bila dabiltza galegoak; Pastor Diazen[2] *A Alborada* olerkiaren ikur kulturalaren gauzapen praktikoa, alegia. Zeltak, suberoak, erromatarrak eta kristau asentatze ugariek deskubritu ez zuten hori. Uxio, Santiago, Giana eta Xose Manuel egungo galizar preso politikoek, besteak beste, naturalki bizi dutena: identitatea. Ukaezina da, haatik, gaurko belaunaldiek kolokan eta kalakan dutela berau. Olerkiari jarraiki, guri bezala, *zilbor-heste bat eten, eta beste bat josi* zietelako.

Aitzitik, hizkuntzari ez diote uko egin bertakoek, kartzelako egunerokotasunean ere txertatua dagoelarik; inbidia eta guzti ematerainokoa. Patioan, megafoniatik, bokiei zuzentzerako momentuan… galegoz bizi zaitezke nahiz eta gatibu egon. "Bereziak" horretan ere izan behar gu; Euskal Herriko bost espetxeetan euskara existitzen ez baita. Territorio libre bakarra, berton ere, eraiki behar zoritxarrez. Manda carallo!

Zulo honetan, guztietan bezala, antzerako errepikatzen dira egunak. Michelin gida-talegeroko pasarteak diren kunden bidez ikuskatu deza-

---

1 Gotzon Barandiaran larrabetzuar idazlearen *Katamalo* (Susa, 2007) poesia liburuko pasarteak ageri dira testuan zehar, letra etzanez [Editoreen oharra].

2 Nicomedes Pastor Diaz (Lugo, 1811 – Madril, 1863). Gaztaroan idatzi zuen "*A Alborada*" ("*Egunsentia*") poema hizkuntza galegoaren birsortzearen ikur gisa hartua da [E. O.].

kegun gisa. Pelikula honen paperak banatuta daude casting-ik egin gabe, eta nahiz eta kokaleku ezberdinetan girotua izan, etengabe birprodutzitzen diren rolak antzezten dira; inoiz gaurkotasunik galtzen ez dutelarik. Berdin da zein urtetan izan, zein lekutan; ikuskizunak aurrera jarraituko duelako.

Besteren artean, soinu banda potentea dugu. Pelikula bat kalitate nagusikoa legez sailkatzea ezinezkoa da, momentu bakoitzaren arabera, musika doinu egoki bat uztarturik ez badu. Horretaz, urtetako esperientzia duten bi orkestra arduratzen dira: Camaron-en bertsio anitzak abesten dituzten ijitoak, eta bestetik, belaunak porlanaren aurka itsasten dituzten musulmanen otoitzak. Paper protagonista, aldiz, super-ekoizpen yankien antzera, nahiko banatua dago. Izan ere, gehienak droga fenomenoarekin loturikoak badira ere, etorkinen aferaren aurpegi gordinenek konpetentzia ederra egiten baitiete. Baita genero indarkeriarekin zerikusia duten kasuek adierazitako goranzko joerak ere.

Guri, ezer jakin barik, leku zentral bat eman digute saioan, zenbaitzuek berton hormekin batera *pack* berdinean gatozela uste izaterainokoa. Alta, soilik publikoarekin gaude zorretan, ez beste inorekin.

Dena dela, neurgailurik esanguratsuena filmaren gaiztoak duen nibelaren araberakoa da beti. Gaizto on bat (a zer paradoxa! Kar kar) egonez gero, kategoriaren tamaina markaturik baitago. Gure kasuan, txakur urdindunek B saileko mailakapenera jaitsarazten gaituzte, baina zer egingo diogu, aurrekontua amaitzear zegoen eta! *The Simpsons* bezalako "actor secundario Bob" bat, badugu; orain gutxi Teixeiro-ko presondegi honetatik espetxe-baimen batetik ihes egindako Rodriguez Menendez alproja lekuko. Eta baita XXI. mendean garrantzi gehiago hartzen ari diren alkoholemiako tasak gaindituriko zigortuak ere. *Second life*-ik? Zertarako?

Irakurketa berrartu eta, *atzeratu egiten zigutela etorkizuna iraganarekin bat egiteraino* diosku poetak. Enkriptatu gabeko egi borobil bezain gordi-

na. Ezkerreko botoiarekin klikatu izaneko patua, apika. Isioturik mantentzeko erronka sotila. Garaitu beharreko birus zikina.

Zizeron-ek "ongi zauden lekuan, horra hor aberria" oinorde gisa utzi zigun. Ez da gure kasua, kontrakoa, baina mendea eta segundoa gurutzatzen dira zoko honetan ere. Orain dela 500 urtetatik, gutxienez. Odol gorriz zipriztindurik, idatzi bako historiak jarraibidea du. Gaur. Oraintxe; izkiriatu behar dugun maitasun oihua. Gerezi-zukuz blaituriko beste manifestu batetik, gure manifestua bihurtzeraino; iraganari fidel, etorkizuna jokoan, eta oraina jazo beharreko oihartzuna. Oraina; ez dezagula oraina ahantz, otoi. Nafarroa bizirik… ta segi aurrera!

Gazteagoa nintzenean (kar, kar) etorkizuna gure eskuetan hartu behar genuela etengabe errepikatzen genion gure buruari; eta egia zen (da). Erraietatik lapurturiko geroa egin, sortu, eraiki eta eskuratu behar dugulako. Baliteke, etorkizuna helburu izatea oraina modu naturalean bizi genuelako; kalean bizi eta kalea biziz, oztopoak oztopo. *Gureak ere belaunaldikoaldia izan behar zuen*; baina ez da izan, antza. Burugogorrak gu gero!

Espetxeak oraina ez izatea inposatzea bilatzen du. Goitik beherako lapurreta, alegia; zigor kodean ageri ez den espoliazioa. Iraganetik -kalean nengoenean- abiaturik, kalera bueltatzerakoan egingo duzunera salto eginez. Nahiz eta askorentzat gure baitan, *ordua eskatu beharrari uko egitea* ezarri gura. Eta oraina etenaldi bat bilakatzen da, ebaketa, hutsunea, kit-kat luzea, redio! Eta ez diot orainari uko egin nahi. *Ametsak pilatzen jarraitu gura dugu* leloari leiala izan; horixe helmuga eta iturburu.

Nik denbora gutxiago daramat lau horma hauen baitan iltzaturik. Hargatik, oraina ez izateari erabateko ezezkoa egunez egun adierazten dioten pertsonak badaudela jakiteak, merituaz haratago, miresmena sortarazten didate, halabeharrez. Deskantsurako betarik ez dagoelako; egun batez baiezkoa emateak, milaka ukatze egun guztiak zaputz ditzakeelako. Partaide bilakatzen nau. *Baina oraina izan gura dugu* tatuatzen dut ene

azalean. Eta nia gu bihurtzen da. Eta Euskal Herria deitzen dugun zatitxo bat nire aldamenean eta barrenean dakusat; oraina izaten jarraitzen dudalarik, ondorioz. Hau bai ondasun guztia. Eta berori lotzen natzaio; sutsuki, gogotsu, amultsu.

"Azken presoa etxean izan arte ekingo diogu" irakurtzen dut aspaldiko egunkarian. Herritar nekaezinek igorritako mezu adoretsua; olerkariari arrazoia emanez, *maitasunak bete diezagun memoria.*

*Teixeiroko espetxean, 2008ko abuztuan*



**Agustin Figal Arranz**
1972
Santurtzi

2002. urtean atxilotu zuten.



C.P. de Clairvaux
Ville-sous-la-Ferté
10.310 Bayel

## Presoon galtzontziloak urrezkoak ei direz

*Aurtengo uztailaren 29an suertatu zitzaidan iskanbilatxo baten parodia*

1. Eguaztena gaur da,
dadukat bisita.
Betiko lez urduri
joan naz korrika.
Zazpi urtez ez ditut
haiek ikusita.
Egun zoragarria
da iragarrita.
Oraindik ere ez da
hasi hika-mika.

2. Herria, koadrila
dauzkagu mintzagai
une on eta txarrak
kontatu ere bai.
Euren alabaz mintzaz
biak lerdeaz blai.
Osterantzean ere,
jardun dogu lasai.
Danak bere horretan
egun ere darrai.

3. Bisitaren ondoren
dator miaketa.
Komeriak baita ere,
sarritan, tarteka.
Gatibua pozik ta
matoiak erreta.
Zaingorri ta makila
kartzelan oreka.
Zigorra merezi dot
preso nago eta.

4. Fuilagelara sartu
atzean dut "Tintin".
Matoiaren jardunan
borrero oso fin.
"Gaurkoan be zurea
egin dok Agustin".
"Hontan on urteteko
eginzak ahalegin,
aurretik ipinita,
gogo behar adin".

5. Arropa kenduz hasi
dirudi zirkoa.
Domadore txakurra
ta fiera presoa.
Prepotentziaz ari da
giltzadun harroa,
kenarazi nahi ei
dit galtzontziloa.
Striptease-a atsegin
du doanekoa.

6. Urtenbiderik ez da
baizik ukatzia,
arma bakarra daukat
desobedientzia.
Erantzunak ez dio
egin ba grazia,
pailazoen burua
sutan da hasia,
puztu egin didana
barneko irria.

7. Zirkoak darrai, baina,
aldatuz papera.
Ni neu pasatua naz
ikusleen artera,
nahiz bazter ez utzi
otzan ez den fiera.
Tintinek jokatzen du
pailazo antzera,
nahiz barre eragin ez
izan bere zera.

8. "Zure sendia ez da
hemendik urteten".
Mehatxu egitea
hark du maite gehien.
Sasikumeak ez du
hartu nahi atseden.
Nire ahotik entzun
gura luke: "arren,
nire familia utzi,
orain dut eginen".

9. Galtzontziloa nahi dau
kosta ala kosta.
Jarrita mantentzea
lortuko dut ozta.
Xefea nun dagoen
galdetu diot ta.
Xefea bera dala
harroki dinosta.
Eztarrian egingo
nioke nik hozka.

10. Galtzontzilotan segi,
pasa da denbora,
sendiak bitartean
ezin jun inora.
Horrelaxe Tintinek
nahi nau aztora.
Berotasunak egin
baitu jada gora.
Xefeangana laister,
Tintin joango da.

11. Etorri barritan da
aurrean xefea.
Xefearen ondoan
Tintin xelebrea.
Bi hoien inguruan
txakurren ostea.
Zelako komitiba
handi dot ospea.
Ez dot erraz izango
ospa egitea.

12. Guztiei ezetz ta
eskatu halere.
Burugogorkeria
oihan honen lege.
Ez dakite, ostera,
hortan naz errege!
Txikia izan arren,
ez nozue herabe.
Ez naz hemendik joango
galtzontzilo gabe.

13. Hozberoak berandu
barik jo dau goia.
Trapua miatzera
hurbil da morroia.
Ikusi gura ditu
zakil zein potroia.
Egunero etxera
hola pozik doia.
Obsesio sexualaz
beterik matoia.

14. Miaketa bukatu
patiora naiz joan.
Iskanbila dadukat
ostera gogoan.
Irribarre txikia
nabarmen ahoan,
patioan lagunei
kontatzerakoan.
Garaipentxo bat, zinez,
daramat kolkoan.

---

*FUILA*: frantses hitza. Miaketa.
*MATOIA*: kartzelaria, Frantzia aldeko kartzeletan gauden presoon argotean.

## Ilobaren jaiotza

Joan dan zapatuan
azkenez jaio da.
Ta ni hemen egonda
naiteke aztora.
Noizbait ikusiko dut,
noizbait izango da.
Ez naz urdurituko
inondik inora.
Memento pozgarria
jaio da iloba.

Udazkenean jaio,
dirudi negua.
Egun ilun-ilunak,
giroa hoztua.
Giroa berotzeko
horra hor kontua.
Leiretxu doakizu
zuretzat muxua
ta koinatuarentzat
besarkada estua.

Berandu jaio ei da,
ez da goiztiarra.
Hamazazpian zeukan
jaio muga-marra.
Jada oso minduta
amaren bizkarra.
Biziki nekatuta
zenduan zaharra.
Ez zaio falta, barriz,
Oskitx-i sugarra.

Pozik eta urduri
dago familia.
Arropa, mila gauza
jada ekarria.
Eta osabarena?
Kezkatuz hasia.
Ez zaitez arduratu
iloba maitia.
Laster izango duzu
neure oparia.

Oraintxe Santurtzira
joango nintzake,
tartean ez baleude
hainbat horma, kate.
Muxutxu haundi bana
doatzu bitarte.
Iloba zuzenean
emango nizuke
hau da azken bertsoa,
beraz laster arte…

*Fresnesen, 2007ko azaroan*



**Naiara Mallabia Sanchez**
1982
Bilbo

2003ko udaberrian atxilotu zuten.



C.P. Villabona
Finca Tabladillo (AS17-Avilés)
33.271 Villabona (Asturies)

## Minaren bidea, zurea eta nirea

Eta bukatzen da denbora, eta bukatzen da, eta bihar ez da izango. Hurrengo hilabetean izango da. Eta laztanak, jakin gabe agurtu dira. Eta begiek negarra gordetzen dute etsaien aurrean.

Kantzelak nere atzean ixten diren bitartean, mina soinean daramat, inor miatu ezin duen mina. Eta zu kalera ateratzen zara. Baina mina zurekin ere badoa. Minaren beste parte bat. Minak bere ohiko bidea jarraitzen baitu, parte bat Euskal Herrira doa, zurekin, zure baitan isil-isilik kilometrotan barrena. Gainontzekoa nerekin gelditzen da; ziegan sartzen naiz alboan dudala.

Zure mina agerian geratzen da atzera begiratzen duzunean, norbait atzean utzi izanaren begirada, azken begirada luzatzearen nahia eta beharra. Nere mina atzera begiratzen ez dudanean azaltzen da, ohiko korridoretik aurrera jarraitzea besterik ez zaiola geratzen dakien presoaren pausu mingarriak.

Batzutan ez dago hitzen beharrik, gorputza jantzita dugula biluzik agertzen gara bestearen aurrean, norbere barruak ezkutatu ezinik edo ezkutatu nahi ez ditugula.

Eta orain faltaren hutsunea. Eta orain nahiaren ezina. Eta orain zure beharra, beharren zerrenda malkotuan. Eta orain zure presentzia nire isiltasunean.

Eta konturatu gabe ematen didazuna poltsikoetan eramaten dut beti, baimen eta debekuen artean.

** zure malkoek sortu zuten idatzi hau. Maite zaitut.*

## El Sol no espera

El Sol no espera
y tengo que apagar las estrellas
la luna quema
la lluvia seca.

El Sol no espera
y tengo que apagar las estrellas
las calles gritan
la noche calla
los días despiertan.

El Sol no espera
y tengo que apagar las estrellas
la lucha vive
la edad recuerda.

El Sol no espera
y esta noche es nuestra
no hay nada difícil
que no merezca la pena.

Y si luego no me encuentras
estaré apagando estrellas,
Y si luego no te encuentro
las dejaré encendidas
dejaré la noche abierta.

Haizeak ez du ekartzen espero duguna
bihotzek ez dute jasotzen ematen duguna.
Hotza ez da gelditzen negua amaitzean
eta gaua ez da betirako gurea.

Orbainak bistan daude eta mina itzalean
zu nire bila, non nengoen gau hartan
bizitza motza da, edo motzegia
maitatzea librea da edo esklaboa.

Oihuak ez ziren entzun
bizkarra ematen digun munduan.
Negarra burukoan geratu zen
sukarraren zapi bustian.
Eta kartzelak, kartzela jarraitzen du izaten
logurarik ez duen gau honetan.

Haizeak ez du ekartzen espero duguna
Ilunsenti polita da gaurkoa
argazkietakoa baino politagoa.
Aska dezagun kalea
sua bagina bezala.



**Jon Markel Ormazabal Gaztañaga**
1982
Donostia

2007. urtean preso hartu zuten.



C.P. Ocaña I
c/ Mártires, 4
45.300 Ocaña
(Toledo)

## Murruarena

.**A**gian -eta soilik agian-
berrogei minutu igarota, agur-hitzen mataza nahasian altxatuko
da lehena. Agurraren lezioa oraino ikasi gabe dugula,
zimeltzen dira bihotz **ZIZELKATU**ak.
Eta ezarian ekingo diogu alanbrezko nenufareak dituen
porlanezko zingirako bideari -poesia narratsenarekin topo eginez-.
Galerietan barna. Kabinetan, lausoturiko kristaletan atzamarrez
marrazturiko imintzioak atzean utziaz.
**B**igarrena.
Negu gorri nahiz eguzki erreko patio itogarria.
Joan-etorri hitsen alboan isolaturik dauden muxu **ZUNDATU**en erreinua.
Absentziak ere itaunka egingo du.
.**Z**aindari ernegatuen herdoil-hitz
eta agindu **PITZATU**etan hirugarrena.
Biderkaturiko instantzien burokrazia tonak hitza ere usteltzen
duenean. Irribarrerik emendatu ezin daitekeen prozesu betierekoa.
.**G**auez
**INARROSI**ko digu laugarrena gau tximeletaren erritmoak.
Ordu-orratzak ere lokartu egiten diren ziegetan.
Eta gu biluzik orduen larrugorri festan.
Egunerokoan inguruko bekaizkeriak altxatzen dizkigun murruen
hautsezintasuna dudatan jarriaz. Murru guztiek baitute erraz aska
daitekeen harria.
Lehena.
Ondoren etorriko dira besteak.

***Ocañan, 2008ko uztailean***

*Bereziki, burdinek zerraturiko leihoetatik*
*horma besterik ikusten ez dutenentzat*



**Asier Kintana Zorrozua**
1968
Bilbo

2006. urtean atxilotu eta espetxeratu zuten.



C.P. Les Beaumettes
213, Chemin de Morgiou
13.404 Marseille Cedex

## Udaberria

Udaberriarekin
itzuli dira txoriak
itzuli dira loreak
hosto berdeak
eta naturara koloreak.
Euskal Herriko
Udaberriarekin
itzuliko da justizia
itzuliko da askatasuna
eta herrira, gu, presoak.

## Soak

Zelai berdeak hodei beltzak
zeru urdina zuhaitzak danbadaka
begira zerura luzatu eskuak
laztandu haizea maitatu bidea
Muxukatu askatasuna
gorrotau injustizia
Indar asko bukatu beldurra
Maitea maite herria maite.

## Zaindu

Zaindu arnasa
altxa burua
denok elkarrekin gaude
datorrenari erantzuteko
bizitza ederra bada
borrokatuz bizi behar da
borrokatu zoriontsua izateko
borrokatu errespetua izateko
borrokatu bizirik gaudelako
altxa burua
zaindu arnasa.

## Gaua

Gaua heldu da
bere mantu beltza
zabaldu du munduaren gainean
eta txolarreak ere
estututa lokartzen dira.
Kanpora begiratzen dut
barnea lasai dudala
iluntasun eta argien artean
zerbaiten bila nago
eta gaur ere
bihotzean zaituztet.

## Kolore tantak

Kaleko bazter ezkutuetan
zabor artean
loreak sortzen dira
dena grisa, dena beltza
den lekuetan
kolore tantak dira.

Jendarte klasista honetan
norgehiagoken artean
elkartasun keinuak daude
dena irabazia, dena injustizia
den lekuetan
kolore tantak dira

## Ostadarra

Euri eta eguzkiaren arteko borrokan
ostadarrak bere koloreak zabaltzen ditu zeruan
tanten artean grisa eta urdina nabari dira,
orainaren eta geroaren arteko borrokan
barroteen estutasunetik sentimenduak ihesi doaz
zeruan ostadarren koloreak margotzen dituztelarik.

Gogoratu eroritako fruituak
hostoak eta adarrak
gogoratu ezten gogorrak
udaberrian goxoak eta berdeak
zirenak
gogoratu ere -eta ez ahaztu-
behin esku irekia izandako
ukabila.

*(Yehuda Amichai-ren poema,*
*neuk moldatua)*

## Ibiliz

Askatasunaren bideetan barrena
kolpeka suntsitu nahi gaituzte
eta gu
sufrimendua maite ez dugunok
topekadaz topekada gabiltza
bide berriak ireki nahian.

## Magalean

Arraitzpeko magalean
sortu ginen
han sortu da auzoa, hiria
han sortu dira fabrikak
etxeak, parkeak…
Ez dira berez sortu
jendeak bere eskuz
bere hatsez
bere izerdiz
sortu dira sortu.

Gu, herriari, Amalurrari
euskarari loturik gaude
eta gure begi-ninietan dago
Arraitzpeko magala.

## Galderak

Zoriontasuna zer den galdetzen didazu?
Zirrara zer den galdetzen didazu?
Duintasuna zer den galdetzen didazu?
Xamurtasuna zer den galdetzen didazu?
Elkartasuna zer den galdetzen didazu?
Laguntasuna zer den galdetzen didazu?
Maitasuna zer den galdetzen didazu?
Osotasuna zer den galdetzen didazu?
Goxotasuna zer den galdetzen didazu?

Lerro okertuekin idatzirik dauden erantzunetan
irakurtzerik ez dugunez
norberak ibili beharko ditu galdera horiek.

## Bestelakoak

Eguzkiak berotzen nau
urriko goiz honetan
aurpegia altxatzen dudanean
bere goxotasuna sentitzeko
neguko egun hotz honetan:
energia hutsa da

Bestelako bizitzak posible direlako
bestelako geroa marraztu dezakegulako
bestelako erlazioak gara daitezkeelako.

Ohean etzanda
begiak ixten ditut
esnatuta nago ametsetan
irribarre argitsuak ikusten ditut
barre algara bizi eta argiak:
energia hutsa da.

Bestelako bizitzak posible direlako
bestelako geroa marraztu dezakegulako
bestelako erlazioak gara daitezkeelako.

Bisitetara noanean
zeuen aurpegi ederrak aurrean ditut
keinuek erakartzen naute
inguratzen gaituena desagertzen da
gure begiradak iltzatzen direnean:
energia hutsa da.

Bestelako bizitzak posible direlako
bestelako geroa marraztu dezakegulako
bestelako erlazioak gara daitezkeelako.

## Bariazioa... Har nazazu

*"… and I ask you once more*
*take me home when the lights go down…".*
*-Zea mays-*

Zorotzat hartu ninduzun
atzo galdera egin nizunean
zorotzat hartu ninduzun
baina zeure begi harrituetan
zerbait gehiago ikusi nuen.

Ilargia zeruan dagoenean
batzuk gizon-otso bihurtzen direnean
beste batzuk zer horren bila goazenean
aurkitu zaitut valsean
ametsen mundutik at dagoen lekuan.

Zorotzat hartu ninduzun,
bai, baina zerbait hautsi nuen
ez dakit bakartasuna edo eza den
ez dakit hitz egin behar ote dugun
baina galdera berriz egin nizun.

Nire barna muin handituetan
maldan behera datorkit funtsean
laztan eta maitasun gose zoroan
zure gorputza nirearekin borrokan
nire bularra zurearen kontra bakean.

Hartuko nauzu zurean
argiak itzaltzen direnean?



**Iñaki Gonzalo Casal, Kitxu**
1964
Getxo

1994. urtean atxilotu zuten.
Liburu ugari argitaratu ditu orain artean:
Carta a un fantasma (Txalaparta, 1997), Hace frío aquí en España (Hiru, 1998), Nadine (Txalaparta, 2000), La barca de Amín (Txalaparta, 2002) eta El niño de Maguey (Txalaparta, 2006).



C.P. La Moraleja
Ctra. Local P-120
34.210 Dueñas
Palencia

## La fotografía

¿Recuerdas cuando te susurraba palabras subidas de tono en el primer escalón del portal de tu casa? Palabras del tipo *o me dejas subir a tu casa o me pongo a gritar y la liamos*… ¿recuerdas? Te lo decía al oído, bajito, apenas un susurro… pero te amenazaba con gritar, con montar un escándalo si no atendías mis apremios. Tú callabas. Cerrabas los ojos y callabas porque tus padres dormían en el segundo piso. Y los vecinos también dormían y no se oía ni un solo ruido en todo el barrio. Apenas un par de ladridos a lo lejos y el traqueteo cadencioso de algún tren-pájaro nocturno. ¡Y mis palabras subidas de tono! Que, en realidad, no eran palabras al oído, ni susurros aunque apenas levantara la voz cuando te decía aquello de *o me dejas subir a tu casa o me pongo a gritar y la liamos*…

Han pasado doce años, cuatro meses y trece días y me preguntaba qué habría sido de tu vida desde que te amenacé con liarla en el portal de tu casa cuando un amigo de un amigo que estudió contigo me dijo que te fuiste a vivir con el tipo que te rondaba. Que te casaste, no porque tú o él lo quisierais, sino porque tus padres deseaban una boda por todo lo alto: con su ramo de flores y su vestido blanco sin cola, con su convite para ochenta y dos personas, con su coche y sus latas amarradas al guardabarros, con su tarta y los paquetitos preceptivos de puros y agendas de tapa blanca, con sus bailes y el brindis del suegro un poco achispado ya… Me dijo que te casaste un poco obligada, para que tus padres no se llevaran un disgusto y que tuviste tu primer hijo siete meses después de la boda, y que le llamaste Josu en honor a tu suegro, y que luego vino la niña, Izargi, y un perro negro con una mancha blanca en el hocico. El amigo ese del amigo que estudió contigo también me contó lo de la muerte de tu abuela y lo del accidente de Rosi, tu mejor amiga… y me regaló la foto que os sacasteis en el viaje de antiguos alumnos a Santa Pola. Se te ve guapa, un poco más rellenita, un poco más arrugada, un poco más triste quizá.

Como ves mi amigo ha sido un poco indiscreto y me lo ha contado todo. O casi todo. Porque no sé si alguna vez te arrepentiste de no haber probado mis caricias y mis besos y el sabor un poco amargo, un poco dulzón de mi semen bajo las sábanas de tu cama, pared con pared con la habitación de tus padres. Aún hoy me pregunto si, de no haberte negado a subir los dos pisos que nos separaban de tu habitación, hubieras acabado con aquel tipo que te rondaba y te hubieras casado un poco a remolque de los deseos de tus padres y hubieras tenido dos hijos, un niño y una niña preciosa, y te hubieras sacado la foto que en el momento de escribir estas líneas tengo en mis manos.



**Jokin Urain Larrañaga**
1959
Mendaro

1986. urtean atxilotu zuten. 22 urte daramatza Espainiako kartzeletan preso. Eskarmentu handiko idazlea. Idatzitako lanen artean aurki ditzakegu: Izaina, AAB, 1990; Adlotse, Txalaparta, 1992; Gatibu sortu nintzen, Susa, 2000 eta Errotarria, Susa, 2006.



C. P. La Moraleja
Ctra. P-120
34.210 Dueñas
Palencia

## Galduen ostatukoak
## -Txaraberenak-

Bere mahaitik atera begira zegoen Luxio, Txarabe ikusi zuenean handik sartzen. Atril handia zekarren esku biekin helduta, zutik eusteko ahaleginak eginez, eta atrilaren gainean bele beltz bat, orekari eusteko ahaleginetan hegoak zabalduz eta astinduz.

Ez zen gutxi harritu Luxio ikuskizun harekin, eta Luxio bezain harrituak geratu ziren Galduen Ostatuko gainontzeko bezeroak.

Sortu berri zuen harriduraren jakitun, mostradore aurretik bezero guztiei begira geratu zen Txarabe, atrila bere alboan zutituta. Atril gainean hegoak astindu eta lumak tolestu zituen beleak, eta mahaietan eserita zeudenei begiratu zien zorrotz itxuran, bere belztasun hartan serioago agertu nahian seguru asko.

-Hortxe; ipini hortxe –esan zion Txaraberi Galduen Ostatuko ugazabandre Maitek, mostradore ertzetik horman itsatsitako basurde muturrera zegoen hutsartea erakutsiz.

Buruarekin baiezkoa egin eta Maitek esandako lekura zuzendu zen Txarabe. Atrila egokitu bezain laster ohartu zen leku aproposa zela hura, inori trabarik egin gabe guztien agerian zegoelako.

Berriro ere hegoak astindu zituen beleak, eta bi-hiru jauzi egin zituen atril gainean.

-Krooak! –esan zuen ondoren, atril gain hartatik hara-hona begiratuz, eta beste bi-hiru jauzitxo egin zituen, bekokitik goraxeago iristen zaion hormaren bestaldean zer ote dagoen ikusi nahi duenak egingo lukeen moduan.

Ez zen harritzekoa pozik egotea belea eta jauzitxoak egitea atril gainean. Txaraberen eskutik bide luzea baitzuen egina haraino iristeko. Ez zen gauetik goizerako kontua izan hura, kontalariak jakin duenez.

Herriaren alde zaharrenean, elizatik ez urruti, liburutegia zegoen. Herriko eraikuntzarik zaharrenetakoa izan behar zuen, huntzak hartutako hormak lekuko. Mundu zahar eta berrietako jakintzak zeuden eraikuntza hartako apaletan gordeta.

Liburutegi hartan emanak zituen Txarabek bere bizitzako ordurik gozoenak. Umea zenetik zetorkion leku hartarako joera. Joera behartua askotan, egia. Bere adineko haurren zafraldiengandik ihesi joaten baitzen elizara ez bazen liburutegira, eta han ezkutatuta ematen zituen orduak.

Liburutegia gobernatzen zuen liburuzain zaharrak laguntzat ez ezik ikasletzat hartu zuen Txarabe poliki-poliki. Ohiko bezeroak gutxitu ahala ugaldu egin ziren mutikoaren bisitaldiak eta, apalaz apal eta estaiaz estai, liburu bakoitzaren berri erakusten zion maisuak.

Denborarekin erruz bakandu ziren liburutegiko ohiko bezeroak, erabat desagertzeraino azkenean. Kanpotik etorritako arrotzen bat sartuko zen noizbehinka, baina izututa bezala alde egiten zuen laster.

Mamuak, itzaletan irudiak, arima errariak ikusten zituzten liburu apalen artean agerostenka.

Liburuzain zaharra ere adinak eraitsi eta mamu izatera igaro zen denborarekin. Txarabek hartu zuen orduan haren lekua.

Maisuarengandik ondo ikasiak zituen liburutegiko eginbeharrak; ezagutzen zituen eraikuntza hartako zoko-mokoak, sotoko leku ilun eta gordeenetik hasi eta sabai-gaineko sakaperaino. Estaia bakoitzeko apaletan zeuden liburuak, haien azalaren kolorea eta barruko muina, tituluak eta gaiak, denak ezagutzen zituen Txarabek liburuzain zaharraren oinordekotza hartu zuenerako.

Bezeroak uxatu ahala, eguzki egunetako ilunabarretan itzala bezala hedatu zen herrian liburutegiaren ospea. Edo herrian itzala bezala zabaldutako ospeak eta nolabaiteko esamesek uxatu zituzten agian bezeroak. Ezin esan, ez dakigulako.

Kontua da eraikuntza hari itzuri egiten hasi zela jendea, eta lehen liburuen baten bila sartzen ziren bezeroek ere ez zutela hurbildu nahi izaten orain. Balizko bezeroek sartu nahi ez, eta Txarabek irten nahi ez liburutegitik. Pentsa liteke mundua bezain handia izan behar zuela liburuzainaren bakardadeak.

Baina bezero arruntak bakandu ahala mamuak, arima errari gisa zebiltzan irakurle ikusgaitzak hasi ziren ugaltzen liburutegian. Bezeroentzat han-hemenka ipinita zeuden mahaietan esertzen ziren irakurle ikusgaitzak, liburuzainaren zain.

Estaiaz estai eta apalaz apal ibiltzen zen Txarabe liburuak aukeratzen. Haietatik kuttunen zituenak edo bitxienak hartu, eta han-hemenka bezeroentzat ipinitako mahaietara joaten zen. Orrialde jakinen batean zabalduta ipintzen zizkien liburuak irakurle ikusgaitzei, eta, liburuaren alboan, argizaria isiotuta. Mahaiz mahai, estaia batetik bestera igaroz ematen zuen eguna, irakurle ikusgaitzei ipinitako liburuen orriak pasatuz, argia itzali ahala argizaria berrituz.

Irakurle ikusgaitzek isilik, argizariagatik eskerronez agian, protestarik gabe irakurtzen zituzten liburuak. Orri guztiak pasa ondoren, liburua bere lekura eraman eta beste bat ezartzen zion Txarabek ikusgaitz bakoitzari, eta baita hari buruzko argibideak eman ere ahapeka:

-Ona da, oso ona -esango zion bati-. Errepara iezaiozu halako kapituluan -besteari.

Sasoi bateko liburuzain zahar harengandik hartutako aholkuak ematen saiatzen zen.

Hala ere batzuetan erabat ernegarazten zuen Txarabe irakurle ikusgaitz haien setak, euren isiltasunean hertsitan geratzeko joera temosoak.

Beste batzuetan, berriz, erruz alaitzen zitzaion aldartea, liburutegia irakurle ikusgaitzek bete eta euren artean berriketan eta eztabaidan ari

zirela ikustean. Eztabaidan tartekatzen saiatzen zen Txarabe halakoetan, haien artean beste bat sentitu nahi izaten zuen, bati hau erantzun edo besteari hori galdetu. Liburuek gordetzen zuten jakintzaz eztabaidatzeak egiten zuen zoriontsu, baina poeta handien bertsoak ikusgaitzekin txandaka errezitatzea zen zorionaren lorea.

Udaberri batean, sakapeko habiatik eroritako belekumea aurkitu zuen Txarabek goiko estaian. Errukitu egin zen hotzak eta goseak ahulduta eta artean lumagabe zegoen izaki hartaz. Belekumea jaso, bere bizilekutzat zeukan gelara eraman eta habia atondu zion han-hemenka bildu zituen artile motots, orbel eta paper zatitxoekin.

-Honek ere bizi behar du –azaldu zien Txarabek irakurle ikusgaitzei, bere gelako atera inguratuta kargu hartzen legez begira zeuzkala iruditu zitzaionean-. Denok bizi nahi dugu, eta bakarrik gauza ez denari lagundu egin behar zaio.

Txarabek atondutako habia epelean lekua hartu bezain bizkor, burua jaso eta mokoa zabaldu zuen beleak, janari eske.

Bele jendea mizkina ez izan arren mokofin ohi dela jakinik, liburutegiko sotoa eta gainerako txoko guztiak arakatzen hasi zen Txarabe, eta han edo hemen euren habietan aurkitutako txolarrekume eta sagukume biluziak zituen. Liburutegiaren horma zuloetan kaskabeltz eta buztangorrien habia berantiarren batzuk aurkitzen zituen tarteka, eta haietatik bildutako arrautzatxoak ere ematen zizkion Txarabek belakumeari.

-Baina belekumea bizi dadin txolarre eta sagukume biluziak akabatzea, nolatan izan liteke zilegi? –galdetu zion behin irakurle ikusgaitzetako batek.

-Zilegi, zilegi… Bizi beharra –erantzun zion Txarabek.

-Txolarrekume eta sagukumeek ere izango dute, bada, bizi beharra –beste ikusiezin batek ostera.

-Eman dezagun status kontua dela -Txarabek.

Txorien habiak laster hustu ziren ordea, arrautza era txorikume biluziak belekumeak jan zituelako batzuk, txorikume lumatuak hegan joan zirelako besteak. Orduan, han edo hemen aurkitzen zituen sagukume bakanak, kakarraldoak, arto eta gari aleak biltzeari ekin behar izan zion gero eta gosetiago zirudien belekumea asetzeko.

Egunetik egunera luma beltzez janzten eta hazten zihoan belekumea. Gaizki hezitako mizkina izan zitekeena, harrapari zetorren, Txarabek ematen ziona inolako aitzakiarik gabe janez.

Miresmenez begiratzen zion liburuzainak hegaztiari, harrotasun apur batez puztuta, eta, belekumearen begirada arretatsua ikusita, bere zereginetan zebilenean ere nola erreparatzen zion ohartuta, erabaki zuen belea ezin zitekeela sagukumez eta artalez soilik bizi, izena hain handi zuenak izanean ere behar zuela neurria eta irakatsi egin behar zizkiola etxe hartan zeuden liburuetako jakintzak.

Liburutegiko sabaian gordeta edo erabilpenik gabe baztertuta zeuden tramankuluen artean arakatuz, haritz egurrez egindako atril ederra aurkitu zuen Txarabek. Bere gelara eraman eta belekumearen habiaren alboan zutik ipini zuen.

Liburu apalategien artean batera eta bestera ibili zen gero, liburu bat eskuetan zuela itzultzeko azkenean hegazti beltzaren albora.

Belekumeak bere habiatik mugitu gabe, isilik baina erne jarraitu zituen liburuzainaren ezohizko ibilera haiek, jakin-mina ziztaka zuela.

-Kroak? –egin zuen beleak halako batean galdera modura, Txarabek eskuetan ekarritako liburua atrilean zabaldu zuela ikusita.

-Idatziak; idatziak dira hauek. Eskriturak –erantzun zion liburuzainak.

-Kroak? –beleak berriro.

-Geratzen diren hitzak; denboran zehar irauten duten hitzak dira idatziak –zehaztu zion eta, bere pozerako, jakin-mina sumatu zuen belearen begiradan areagotzen.

Ordutik aurrera, belekumearengana itzuli zen batik bat Txaraberen ekimena, eta behar baino atzenduago geratzen zitzaizkion sarritan beste zeregin guztiak.

Irakurle ikusgaitzentzat mahaietan ipintzen zituen liburuak orrialde berean trabatuta geratzen ziren luzaroan, harik eta, haien kexak sumatuta, korrika joaten zen arte liburua aldatu edo orria pasatzera.

Gero eta hutsarte luzeagoak egiten zituen ordea Txarabek jatorrizko lanbidean, eta argizaria ahituta ilunpean geratzen ziren askotan irakurle ikusgaitzak. Bazirudien, gainera, entzungor egiten hasi zela irakurleen kexuei, eta belearentzat baizik ez zuela begirik eta denborarik.

Sabaian aurkitutako atrila belekumearen alboan ipinita, liburua zabaldu han eta pasarte luzeak ahots goraz irakurtzen ematen zuen denbora liburuzainak. Behin eta bitan errepikatzen zituen zenbait esaldi korapilatsu, belearen begietan galdera keinua sumatu uste zuenetan batez ere.

Ez legoke esan beharrik baina kontalariak idatzita utzi nahi du liburuzainaren eta belearen arteko adiskidantzak egonezina eta bekaizkeria antza piztu zituela irakurle ikusgaitz gehienen artean. Gehiegizkoa iruditu zitzaien nonbait, onartezina liburutegi duin baterako.

Baina haien artean ere bazen bat, bere txokoan besteengandik berezi samar egon ohi zen bizar luzedun temoso bat, nolabaiteko harrotasunez begiratzen ziona Txarabe eta belearen artekoari.

-Liburu eta bitxizalea ez ezik, hizkuntzetarako gaitasun handikoa ere bada bele jendea -egin zien errieta ikusgaitz temosoak, besteen isilkako mar-

mar eta bekaizkeriekin haserretuta-. Poeta handien argimutil izan da belea letren historian; ez zenukete gutxietsi behar.

Berez ziren isil samarrak eta ez zuten iskanbila handirik sortzen, baina Txarabe bere gelara sartu eta liburua atrilean zabalduta beleari irakurtzen hasten zitzaion bakoitzean, gelako atean pilatzen ziren ikusgaitzak, zer ikusi edo zer entzungo. Zaratarik egin ez arren, irakaslea urduritu eta ikaslearen arreta nahasteko nahikoa zen haien presentzia.

-Zoazte zeuon liburuetara –esaten zien Txarabek halakoetan, handik alde egin zezaten keinu eginez eskuarekin.

Ikusgaitzak euren mahaietara itzuli eta biak bakarrik geratzen zirenean, belea adi ote zegoen ikusi eta, liburua irakurtzen jarraituko zuen Txarabek:

-"Ez dit ezein bizidunek eragotziko
bide irekietan ibil nadin.
Ez du ezein bizidunek inoiz lortuko
egin ditudan pausoak ditzadan desegin.
Hau da zure lurra, hau da nire lurra."

-Lurra, lurra –esan zuen beleak behingoan, Txarabek irakurketa amaitu zuenean.

Hitz haiek ustekabean harrapatu zuten liburuzaina, eta ez arrazoirik gabe. Belea belekume baitzen artean, eta mirarizkoa iruditu zitzaion erabat lumatu baino lehen hitzaren dohaina agertzea. Horrez gain, errezitatutako poema baten hitzak hain bizkor ikasi eta errepikatzeko gai izatea giza jendearen artean ere txalogarri bazen, are miresgarriagoa zen hegalari batengan.

Begien bistan zegoen ikasketarako dohain handiak zituela bele hark; ez zela edozein basotan sarraski bila ibiltzeko jaioa alegia, eta, haur txikiaren keinu berriak amaren jolasgura pizten duen moduan, Txaraberen irakasle grina biziagotu zuten belearen hitzek.

Gero eta denbora gehiago ematen zuen belearen ondoan, atrilean liburua zabaldu eta handik irakurtzen. Baina liburuzainari gero eta atzenduago geratu zitzaizkion irakurle ikusgaitzak. Haien mahaietan itzaliz joan ziren argizariak, eta erabat ahazten zitzaion berriro isiotzea, irakurritako orrialdeak pasatzea edo liburuak aldatzea. Oso noizean behin gogoratzen zen egiteko haietaz, eta presaka joaten zen orduan liburutegiko estaietara…

Denboraren buruan sumatu zuen bakantzen ari zirela irakurle ikusgaitzak. Guztiz ahitu gabeko argizariak itzalita aurkitzen zituen mahaietan; irakurleen aztarnarik ez inon, eta haien erdeinu zantzuak ziruditenak nonahi. Barru-barruan horzka egiten zion erdeinu hark.

Mahaietan argizariak isiotu, liburu batzuk aldatu eta beste batzuei orrialdeak pasatzen zizkien hala ere.

Lan haiek egin ondoren bizkor asko itzultzen zen atzera belearen albora, eta, atril aurrean zutik jarrita, ikasle lumabeltzaren heziketari ekiten zion.

-"Zain mikatzak ditu jakinduriak, baina fruitu gozoak" –esan zion Txarabek atriletik, bere habiatik begira zeukan belekumeari.

-Fruitu gozoak, krooak! –erantzun zion ikasleak arretatsu.

-"Beti izango dugu harrituko garen ziurtasuna -hasi zen irakurtzen-; beti pentsatu ahal izango dugu -ziurtasun osoz- egundo ez dugula espero ahal izango gertatuko dena. Etorkizuna iragartzean baino, orainaren beharrizan itogarria, "orain" gertatzen denaren izaera aldaezina baieztatzean datza azken batean orakuluaren mezuaren egia eta sakontasuna. Iragarpen aurreratuak, balio sinbolikoa du batezere: gizakiak bere bizitzako une bakoitzean espero duen horren denboran zeharreko proiekzio soila da. Honako honi, eta honi soilik, aurre egin behar dio une oro: zertzelada alaia edo tristea izan, gizakia garaile edo garaitua izan, setiatuta dagoela edozein eratara ere. Ez dauka ihesbiderik, ez dago bikoiztasunik: hauxe da orakuluak hasieran adierazten zuena, eta arrazoiz gainera: "Patuari ezin zaio ihes egin." Erreala den horri inork ezin diola itzuri

egin, horixe besterik ez du esan nahi. Badena, bada, eta ezinezkoa da ez izatea… Badena, adiera bakarrekoa da betiko: errealitatearen mugan desegiten dira bikoitzak, sorginkeriaz edo madarikazioz, gertaera aldeko edo aurkako izatearen arabera…".

-Sorginkeriaz edo madarikazioz –errepikatu zuen beleak Txarabe isildu zenean, haren irakurketari adi egon zela aditzera emanez.

Luma beltz lustratuekin janzten zihoan heinean, hizketan ere aurrerapen handiak egiten ari zen belea. Bere habian jauzi txikiak egin, hegoak astindu eta halako ariketekin soina bizkortzen ere ahaleginak egiten zituen.

Bere habiatik atrilera hegalditxoa egin zuen egun batez, eta hantxe geratu zen aurrerantzean. Atrilaren ertzean, Txarabek ahots goraz irakurtzen zituen testuei bertatik bertara begira egoten zen.

Irakasleak ahots goraz irakurtzen zuena ahapeka errepikatzen hasi zen hurrengo, haren ahoskera eta buru keinuak imitatzen saiatuz.

Irakurraldiaren ondoren, atriletik Txaraberen sorbaldara jauzi egin, eta halaxe, belea sorbaldan zuela, liburutegi osoa korritzen zuen liburuzainak. Estaia bakoitzean zeuden liburuak eta liburu bakoitzaren jakintzak azaltzen zizkion hegazti beltzari.

Han-hemenka ipinitako mahaien gainean liburuak zeuden irekita; haien ondoan argizari itzaliak. Lehen mahai haietan egon ohi ziren irakurle ikusgaitzak desagertuak ziren ordea, erdeinuz edo zaputzez desengainatu eta desagertuak, liburu zaharrenen txokoan geratutako temosoa ez beste guztiak.

Dizipulu berriak bizipoza ematen bazion ere Txaraberi, galdutako irakurle ikusgaitzen gaitzespen ziztada ez zitzaion sendatzen.

Garai hartan egin zuen Txarabek aurreneko bisita Galduen Ostatura. Han egonalditxoa egin eta liburutegira itzuli zen atzera.
Ezberdinak izanik ere, iruditu zitzaion Galduen Ostatuko bezero haiek

bazutela liburutegiko irakurle ikusgaitzen antza eta, horregatik seguru asko, gero eta atseginago bihurtu zitzaizkion ostatu hartako egonaldiak. Indarberrituta itzultzen zen handik liburutegira, belearen ikasketak gain-begiratzera.

Atrilean zabaldutako liburuaren letrak ezagutzeko lain leziatu zenean, letra haien batuketa, hitz osoen irakurketa, hitz baten eta bestearen arteko etena eta pasarte osoak irakurtzeko jakin beharreko trikimailuak erakutsi zizkion Txarabek beleari.

Ikasle luma-beltzak agertzen zituen dohainekin erruz harritzen maisua.

Egun batez, bera alboko aulkian eseri eta belea bakarrik utzi zuen atrilean, liburu irekia aurrean zuela. Orduan, atril gainean hiru-lau jauzitxo egin, hegoak astindu apur bat, eta "krooak" esan zuen beleak Txaraberi begira.

-Ea, hasi –animatu zuen Txarabek bere aulkitik.

-Krooak -egin zuen berriro, Txarabek "ejem" egingo zukeen moduan, eta liburu orriari ezarri zizkion mokoa eta begia-. Heriotzaren orduan beste edozein gizakik bezalaxe, A A-rengandik apur bat bada ere ezberdina izatea itxaroten du Macbethek azken unera arte; gertaera, benetan den hori bera ez izatea espero du. Erreala erreal berbera izatea -hein batean tolesgabetasuna bera, errealaren izaera garbiena dena-, zentzugabekeriarik handiena legez agertzen da inozoaren begietan, hots, azken unera arteko bere itxaropenak bikoiztasun baten grazia lortzean ezarri dituenaren begietan. Erreala baizik ez den errealitatea, ez deus da, "inozoz", Macbethek dioen moduan. Krooak.

Irakurketa eten eta Txaraberi begiratu zion beleak.

-Ederto; oso ondo –esan zion hark begiak piztuta, ikaslearen aurrerapenekin pozik, txaloak joz.

Txarabek gidatutako irakurketa jarraitu zuen beleak, eta irakurtzen ez

ezik liburuak aukeratzen ere ikasi zuen laster.

Sasoi bateko habiatxoa aspaldi ahaztuta, atrilean ez bazen Txaraberen sorbaldan izaten zen belea gehienetan.

Liburutegiko estaietan, apalen artean hara eta hona, sorbaldan zeraman ikasleari libururen bat erakutsi, titulua eta pasarteren bat irakurri, ostera bere lekuan laga liburua, eta aurrera egiten zuen Txarabek.

"Krooak" egiten zion halakoetan beleak, adostasun edo onespena erakusteko. Beste apalen batean beste libururen bat aukeratu, orri batzuk pasa… Haietakoren batekin atrilera itzultzen ziren arte.

Irakurtzen zuena buruz ikasteko ariketak eginarazi zizkion Txarabek, eta buruz ikasitakoa bere kabuzkoa legez esaten atriletik.

Atril gainean hiru-lau jauzi jostari eman aurrena, segidan hegoak astindu eta "krooak" egin eztarria garbitzeko, eta pasarte luzeak buruz errezitatzeko gaitu zen aurki. Luzera gabe hasi zen buruz ikasitako pasarte haiei berak asmatutako ateraldiak gehitzen, eta Txaraberi iruditzen zitzaion orakuluaren ebazpenak izan zitezkeela belearen burutazio haiek.

Irakurle ikusgaitzen erdeinuak eraman zuen Txarabe Galduen Ostatura lehen aldian. Hango bezeroen artean beste egonalditxo bat egin nahiak bultzatuta joan zen bigarrenean… Bisitaldi haiek ugaltzen eta egonaldiak luzatzen joan zen geroago, azkenean belea ere atril eta guztiz bertara eramatea erabaki zuen arte. Erabaki eta egin.

Galduen Ostatuan, alde batean mostradorea eta bestean basurde zituela, eroso sentitu zen belea. Lehen unetik bertatik iritzi zion leku egokia, eta hiru-lau jauzitxo jostari egin zituen atril gainean. Hegoak astindu eta lumak harrotu zituen gero, eta "krooak" egin zuen aurrean zituen bezeroei begira.

Harriduraz begiratu zioten beleari Galduen Ostatuko bezeroek lehen aldi hartan. Balu izan zen seguru asko harridura baino beldur handi-

agoarekin begiratu zion bakarra. Bere lagun hilaren ahotsa gogorarazi zion beharbada bele haren karrankak, eta handik ospa egiteko bulkada sentitu zuen. Baina Artzubiren ondoan kuzkurtuago egin zen, ikusezin bihurtu nahian, ihesak nabarmenago egingo zuela pentsatuta.

-Krooak! –egin zuen beleak berriz ere, eztarria garbitu eta entzuleen arreta bereganatzeko, eta ikasitakoak eta asmatutakoak aldarrikatzeari ekin zion gogotsu-. Baldintza onetan ari gara prestatzen biltzarra, ukatu gabe desadostasun batzuk baditugula. Kontestualizazioaren argudioa ezin da erabili: haiek egin behar dutena egiten ez badute besteek egin beharrekoa ez egitea ulertzekoa dela ezin da esan.

*Plas plas plas*, egin zuen txalo mostradore inguruan bezeroren batek. Txaloka hasi ziren gainerako bezeroak ere harridurazko isilunearen ondoren.

Atril gainean hegoak zabaldu eta astindu, eta hiru-lau jauzitxo egin zituen beleak gogoberotuta.

-Krooak! –egin zuen beleak berriro, ejem! egiten duenak legez –Ildoa osatzeko partaideak biltzen ari dira orain. Ildoa izanez gero, eskubidea dago ildoaren ordezkaria zuzendaritzan izateko. Beraz, ildoak ez dira gaitza, ondasuna baizik. Krooak!

*Plas plas plas* hasi ziren berriz ere txaloka Galduen Ostatuko bezeroak, leku hartarako guztiz ezohizkoa zen zalaparta eta harrabotsa sortuz. Zarata haren ikusmiran jende berria hasi zen agertzen ostatuko atera, eta mostradore inguru osoa bete-bete egin zen luzera gabe.

Jendetza hura ikusita, atril gainean hiru-lau jauzitxo egin zituen beleak. Hegoak zabaldu eta astindu, lumak harrotu eta ostera tolestu, eta burua hegalpean sartuta bere baitara bilduta bezala geratu zen hizlari lumabeltza atril gainean.

Ohiko bezeroez gain jende saldoak hasi ziren sartzen Galduen Ostatura belearen predikuak entzutera. Beleak, burua hegalpetik atera eta, bezero

guztiak isilik berari begira zeudela ikustean, hiru-lau jauzitxo egin, hegoak zabaldu eta astindu, "krooak" eginez eztarria garbitu eta errebelazioak egiteari ekiten zion atriletik.

-Hizketa dotorea dauka –esan zion Xeberok Txaraberi-; zeinek esan behar zuen, daukan piura ikusita!

-Piura? Elizako pulpituan ere ez luke itsusi emango -Lukariok albotik-. Zatartasun guztiak estaltzen ditu berriketa ederrak, eta zerbait behar dugu gure fedearentzat.

-Krooak! -egin zuen beleak atriletik, eztarria garbitu eta entzuleen arreta bereganatzeko-. Oroitzapenak beti dira memoriak egiten dituen proiekzio batzuk. Batzuetan, atseginak; bestetzuetan, mingarriak. Neutroak, ez; neutraltasunak nekez hartzen du lekurik gure gogoan, nekez eragiten du oroitzapenik. Krooak!

*Plas plas plas*, ekin zion Lukariok txaloka, eta Xeberok haren ondoren, eta Luxiok hurrengo, eta Galduen Ostatuan batuta zeuden ohiko eta ezohiko bezero guztiek azkenik, Baluk izan ezik.

-Konplexu guztiekin gertatzen den bezala –ekin zion beleak, txalo zaparrada apur bat baretu zenean-, disimulatu eta ezkutatu egiten da ahulezia dena, baina sintomak begien bistakoak dira. Krooak!

*Plas plas plas*, txalo erauntsia berriro, eta beleak, txalo zaparradarekin puztuta, atril gainean jauzitxoak egin eta hegoak astindu zituen. Burua hegalpean sartu eta gogoetara itzuli zen gero.

-Sarobeetan zutarriak ipintzen zituzten gure aurrekoek -esan zuen Asmodeok txalo zaparrada atertu zenean-. Eliza bakoitzak bere pulpitua izaten du; pulpitu bakoitzak bere apaiza. Baina lehen apaizarentzat ipini ote zuten pulpitua, ala lehen pulpituarentzat apaiza?

-Krooak! –hasi zen belea, hegalpetik burua aterata atril gainean hiru-lau jauzitxo eginaz, Asmodeori erantzuteko astirik eman gabe inori- Bere

egunerokoaren kontakizun osoa ene karneta urdinetan gatibatu dut, bidaietan nehoiz ez bezala "escritora" bat naizelako, hala izkiriatzen dut bederen, hotelen harrera geletan betetzekoak diren paperetan, ofizioaren lerroan. Krooak!

-Oh! -egin zuten belea isiltzeaz batera entzuleek, eta txaloka eta aupaka ekin zioten.

Belea atril gainean jauzitxoak eta hego astinaldiak egin ondoren, burua hegopean sartu eta gogoetara itzuli zen.



**Mikel Albisu Iriarte, Antza**
1961
Donostia

2004. urtean atxilotu zuten. Literaturgintzan ugari jardundako idazlea dugu. Bere lanen artean aurkitzen dira: Suzko gezi bat bezala (GAK, 1983), Lehen bilduma 82-84 (Susa, 1985), Beteluko balnearioko mirakulua (Susa, 1985) eta Odolaren usaina (Susa, 1987).



M. A. de Fresnes
3, Allée des Thuyas
94.261 Fresnes Cédex

## Gudaria

Erizain-laguntzaileak, egunero bezala, gela txukundu eta gero alde egin zuen. *Au revoir* esan zidan Veroniquek. Presozaina beste nonbait ibiliko zen. Gelako atea irekita gelditu zen, preso arruntena egon ohi zen bezala.

Ohean etzanda, liburua alde batera utziz presozaina noiz agertuko begira geratu nintzen. Zorua lehortu eta, ez zetorrela ikusita, jaiki egin nintzen. Betaurrekoak jantzi nituen, txankletak jantzi nituen, xukadera hartu nuen. Sudurra atera nuen aurrena, esateko modua da, ate zirrikitutik. Periskopioa hurrena, hau ere esateko modua da. Ez zegoen azalzuririk pasabidean, ez eta azal beltzik, ez azal-marroidunik. Giltzarien arrastorik ez, alegia.

Dutxarako itxurak egin nituen pasabidean aurrera ausarki eginez. Eguzkiak *pop art*-eko diseinuak marrazten zituen lainoen eta burdinabarren laguntzaz zoru berdean.

Askatasun antzekoa gozatzen nindoan, poliki-poliki, pasabidean barrena. Inoren baimenik gabe, inork irudikatu ezin ninduen lekuetatik nenbilen, sabelean zirrara. Edozein unetan «nora zoaz!» zakar bat entzuteko prest.

Oihuaren ordez kantu bat entzun nuen, 251. gelaren barnetik zetorren. Zur eta lur gelditu nintzen pasabide erdian. Euskal kantu bat zen, bai.

Ahots apal eta sentikor batek «Txori erresiñula» kantatzen ziharduen. Agure baten ahotsa zen. Erdi irekita zegoen atea bultzatzea beste erremediorik ez nuen. Atea irekitzen ari nintzela irudikatu nuen barruan aurkituko nuena.

Ohe gainean eserita, hankak dilindan, buruan txapela, agure bat zegoen. Irribarre goxo, begi urtsu, lepoko azal zimelak kantuaren erritmoan dantzan. Begiradarekin gonbidatu ninduen, bere alboan eser nendin.

Bukatzerakoan malko bat xukatu nuen. Hortxe geunden biok, isilik, erridauek babestuta, ilunpean. Noizean behin pasabidean mantal zuridun bat igarotzen zen. Lasai nengoen, geunden, uniforme urdinik agertzen ez zen artean.

Euskalduna zara? Galdegin nion nire ohiko trebezia eskasarekin.

Zer izango naiz ba!, errusiarra?

Zer egiten duzu hemen?

Sendatu ez behintzat.

Beti izan dut zailtasuna euskaldun petoen arteko bat-bateko elkarrizketa txukun bat mantentzeko. Lehen galdera bezalatsu sentitzen naiz beti, baldres. Nire oroimen abisalean esaldi egokiak berreskuratzen saiatu arren ez dut lortzen lehenean erantzun egokia. Gero bai. Adibidez:

Ez zaude horretarako leku aproposean gero.

Egunkari batetik moztutako argazki horiztatu bat zeukan eskuartean agureak.

Javier naiz.

Mikel.

Argazkian lubaki bat ageri zen, bi gudari metrailadore batekin. Batek metrailadorea eskuetan, besteak balak zerbitzatzen zizkion.

Ni naiz. Seinalatu zidan metrailadorearen jabea.

Ni isilik, badaezpada ere.

Bestea Teodoro.

Ni berdin, hanka ez sartzeko.

Hil zen. Ni ez. Ni ez. Ni ez.

Isilik jarraitu nuen, hobe zelakoan.

Pijama galtza jaitsi zuen eta izterrean zuen orbaina erakutsi zidan.

Altxa bizkarraldea, agindu zidan.

Azal gurian beste bi orbain zituen.

Zortea izan nuen. Ebakuatu ninduten. Larri, baina bizirik. Bizirik. Zer gehiago behar du gizonak.

Zer gehiago behar du gizonak, pentsatu nuen. Zer gehiago behar du pertsonak zuzendu nuen, ahoa ireki gabe.

Ospitale batetik bestera. Hanka galdu ez nuenerako gaitz erdi. Birikak ere juxtu libratu nizkian. Galeno onak egokitu zitzaizkidala. Gabatxoak, baina onak. Gero, gaixoaren bizimodua ez dela ona. Hori ere. Gutxiago bakartasunean. Okerrago norberak nor den ere ez dakienean. Esan al diat, Javier nauk. Hik ez al didak hire grazia eman behar?

Mikel naiz.

Hori da txarrena, begiak irekitzea eta dena lainotuta. Kolpe txar bat hartu nuela esan zidaten. Hemen, begira. Erredios.

Txapela kendu zuen, ile fin txuri bakanen artean, krater bat zuen, sakonune bat, norbaitek hatz batekin indar handiegiz sakatu izan balio bezala.

Ez nien piperrik ere ulertzen. Amorratzen nintzen. Eta haiek ere berdin. Jartzen zidaten papera eta arkatza. Idazteko. Idazten nien. Ez zutela

ulertzen. Medikuak bai, baina ezjakinak, nioen nirekiko. Eta haiek, begira ez nengoela uste zutenean, keinuka adierazten zioten elkarri, burutik eginda nengoela.

Euskalduna naiz! Euskalduna naiz! Jende nazkantea!

Erizain pertxenta baten kuidadoan utzi ninduten. Zopa ahora ematen zidala, castellano, castellano, esaten zidan. Nik ezetz, kastellanoz ere ez niola ulertuko, alferrik zuela bere irribarre goxoarekin. Nigandik zerbait aterako bazuen ez zela ahotik izango.

Hori Teodorok esaten zuen: gerran emakume oro lubaki. Eta orduan gaitzitzen nintzaion Teodoro barrabas horri. Emakumea errespetuz ibili beharrekoa dela. Ama bezala errespetatu behar dela. Ez dela edonola ibili behar. Baina Teodoro ezagutu behar zen. Ume handi bat. Aho handia. Niretzat, emakumea zer den ezagutu gabe joan zela hura beste mundura. Auskalo nori entzungo zion gerran emakume oro lubaki hura. Helduago ikusiko zuen bere burua. Bizar-guri halakoa. Zer izango zituen, hogei urte? Ni baino zaharrago halere. Ez da hiltzeko adina, hain gazte. Eta orain, nire adinean, eta ezin hil. Gorputzak eusten diola, buruak eusten ez dion lekuan.

Emakume haren usainak ateratzen ninduen nire onetik. Lur hezearen lurrina. Gustura hartuko nukeen lubaki horren babesa. Gerra bukatua zen, ordea. Pixka baterako bederen. Nirea bederen.

Teodorok, behar ez zuenean atera zuen burua, beti bezala. Hantxe balazoa. Posizioa ezin eutsizkoa zen arren Komandanteak atzera egiteko agindu arte, kieto. Gero, ahal bezala. Ez nuen Teodoro bertan utziko. Lepoan hartu eta ehun metro ere ez genituen egingo. Ziplo lurrera. Teodororen azpira. Hark salbatu ninduen. Heriotzaren ostean ere lagun. Nik hiru hartu nituen, hark beste hirutan hiltzeko adina. Arrantxoa ere berdin banatzen zian alproja hark, nik bat eta hark hiru. Handiagoa ere bazen. Gosea berdintzeko behar zuela esaten zidan, irribarre gaizto horrekin. Barkatu egiten nion. Bizia salbatuko zidala jakingo banu bezala.

Astuna zegoen. Ehun metro ere ez. Baina tiro parrastak harrapatu ez bagintu ere ez dut uste metro erdi bat harantzago joateko gai izango nintzenik. Ziplo. Biak lokatzetan. Hura hilda eta ni hil hurren. Gandu gorria egin zitzaidan begietan. Esnatu arte zulo beltza. Eta esnatutakoan laino zuria.

Isildu zen, arnas mehe bat hartu zuen, birikek txistu egiten zioten.

Hi igual, ETAkoekin ibiliko haiz, ezta?

Erantzuteko astirik ez zidan utzi. Zer erantzun pentsatzeko ere astirik ez zidan utzi.

Hoa, gazte. Bestela zakurrek harrapatuko haute. Hator berriro ere. Baina kontu egin bidean.

Adio, Javier, etorriko nauk bai hurrena. Ongi izan.

Kantuan hasi zen, apal hasieran, gero eta ozenago, oihuka nire gelan babestu nintzenerako.

Eusko gudariak gera
Euskadi askatzeko,
gerturik daukagu odola
bere aldez emateko

Irrintzi bat entzun da
goiko tontorrean
goazen gudari danok
ikurriñan atzean.

## Tulako balada (J.B.ri)

Presa baduzu, hiritar zintzo, pasa orrialdea
Hau eta bestea, hiritar prestu, presa baduzu
Utzi orria, zoaz, zoaz lasai zure bidean

Patxadaz bazabiltza, hiritar gaizto, zatoz gurera
Doinu xamurrez mozorrotutako gure intziria entzutera
Antzinako kupeletan ozpindu, zementuzko dolaretan xehatu
gure saminaz jabetzera,
gure ametsen edabe garratza edatera

Txalaparta jo hormetan, larri-minez, han, Tulan
Gure kodez
tan-tan tan-tan-tan tan-tan-tan-tan
Tan
Tan
Ez hago bakarrik, han, Tulan

Hodietan jo toberak, bihotz-minez, han
Han, Tulan, jo,
Tan-tan tan-tan-tan tan-tan-tan-tan
Tan
Tan
Ez hago bakarrik, han, Tulan

Igitaia txistuka airean, urka bilurra begi-ninietan
Badatoz samaldan itsaso gabeko olatuak
Gaurik gabeko ametsak, bizarrik gabeko aitzurrak
Ilerik gabeko eskumuturrak eta zintzurrak

Ez! Ez! Ez!
Egin murgil!
Egin ihes!
Haugi honat!
Bila irriñoa, oroit hadi haren azalaz
haren begiradaz, haren usainaz
Hire usainean zegok oraindik

Txalaparta jo hormetan, larri-minez, han, Tulan
Gure kodez
tan-tan tan-tan-tan tan-tan-tan-tan
Tan
Tan
Ez hago bakarrik, han, Tulan

Hodietan jo toberak, bihotz-minez, han
Han, Tulan, jo,
Tan-tan tan-tan-tan tan-tan-tan-tan
Tan
Tan
Ez hago bakarrik, han, Tulan

Gorputz biluz babesgabe, indarrez, gizon arrotzen aurrean.
Gozamena laido, beldurrez, ahoa ireki, galtzarbeak, erakutsi, makurtu.
Ahoa ireki? Oihu eginez!
Besoak altxa? Ukabilean!
Haien larderiari, ispilu
Eutsi!

Entzun agureari, «munduan bada leku bat, Tula».
Han gaude, irrintzika, ametsaren gudariok,
txalaparta hormetan, hodietan tobera
«Ez hago bakarrik», oihuka negarreraino, «han, Tulan»,

Horman jo, larri-minez, han, Tulan
Gure kodez
tan-tan tan-tan-tan tan-tan-tan-tan
Tan
Tan
Ez hago bakarrik, han, Tulan

Hodietan jo toberak, bihotz-minez, han
Han, Tulan, jo,
Tan-tan tan-tan-tan tan-tan-tan-tan
Tan
Tan
Ez hago bakarrik, han, Tulan

Mutu! Itsu! Gor!
Murgil! Ihes!
Haugi honat!
Oroit haren irriñoa, bila haren azala, usaina, han, Tulan, higan
Egiek irri borreroei, bila hire azala, begirada, usaina, han, Tulan, gugan.

Isildu dira toberak, mutu txalapartak,
Isildu da mundua Tulan
Isildu da hemen
Sutan ditugu begiak hemen eta Orzaizen.

## Igerileku inguruan konbinatuak hartzen

Gerran ari ginela,
ohikoa zen,
gure Herriko jende burutsuen
kritika jasotzea
ez zen egoki
ez zen zilegi
ez zen moralki zuzen
ez zen beharrezko,
alegia,
alferrikakoa zen
kaltegarria zen
idiota zen
gure Herriaren alde bizia, odola, ematea
gure Herriaren defentsan bizia, odola, kentzea.

Gerran ari ginela,
gure Herriko jende burutsuak,
gure Herriaren oinarriak, zutabeak, habeak
gure Herriaren zoru, horma eta teilatuak
are
gure Herriaren altzari, apaingarri eta elikagaiak
zaintzen, atontzen, bermatzen, indartzen, xeratzen, garbitzen
irudikatzen genituen
gure irudimen ameslariaren eraginez.
Lan eskerga, lan nekeza, lan zaila
oi
gurea baino askoz ere
zailago
nekezago
eskergago (halakorik esaterik badago).

Gure adimen mugatuagatik
edo
harritu ere egiten ginen
hain lan nekosoa izanda
gu kritikatzeko
eta
gure sentiberatasun minberagatik
laidotzat eta iraintzat ere hartzen genituenak
gure aurka esateko
gu zangopilatzeko
denbora aski nolatan zuten.
Egunero-egunero
entzuten genuen, ikusten, jasaten
haien erretolika egunkari, irrati, telebistetan
(eta berriki interneteko blogetan ere, are, alafede!)

Ez genuen ulertzen
haien lana egin eta gu kritikatzeko denbora
nondik ateratzen zuten.
Eta gure ulergaiztasunak berak ematen zien arrazoi:
etxe bakoitzeko haurride zozoena zen
gutako bakoitza.
Haiek doktore, irakasle, politologo, jende prestu
eta jantziak zirela
ez genuen ulertzen,
horrek gaitasuna ematen ziela
beren lana burutzeko
gurea zikintzeko
eta
baita bakantzetara joateko ere,
akaso.
Gezurra ei zen haien zeregin bakarra gu zikintzea zenik.

Atseden hartzea deliberatu genuen batean,
gure borrokaz
(kritika guztien gainetik
eta laido guztien azpitik)
harro
etxeratu ginen.
Apal, halere,
gure borrokaldi zentzugabea bitartean
gure Herriko jende burutsuek
egindako lanaren aurrean
txunditzeko prest.

Zarpail gentozen, lohituta
bihotz eta herri minaren arrakalak
begiradetako eta irribarreetako zaurietan.
Zer den zozoa izatea,
norberak egin behar uste duena egin izanaren
zoriona genuen barru barruan.
Gure Arbasoen etxera
babes eta atseden hartzera gentozen.

Igerilekuaren inguruan aurkitu genituen
gure Herriko jende burutsuak
konbinatu bana eskuan.

Han zetzan,
zutabeak erreta
oinarrietatik erauzita
teilatu eta horma gabe
txerrikorta bihurtuta
gure Arbasoen etxea.
Soinean genekarren kiratsa
deus gutxi zen
txerritegi hartatik ateratzen zenarekin alderatuta.
Hala ere,
zumitzezko besaulki erosoetan zeuden
jende bertutetsuen sudurrak
ez ziren mintzen.

Isilik igaro ginen haien albotik.
Ez ziren ausartu, aurrez aurre gintuztela,
ahoa zabaltzera ere.

Bertan behera utzia zuten gure Arbasoen etxea
zaharberritzeari lotu gintzaizkion batzuk.
Besteak, indarberrituta,
gure betiko lan desegoki, ez zilegi, ez moral
alferrikako, kaltegarri eta idiotari lotu gintzaizkion,
berriz.

Igerilekua ez genuen garbitu.
Bertara egin zuten jauzi
uxatu genituen zerriek,
gure Herriko jende burutsu eta bertutetsuekin
dostatzera.

## Promenada kaiolan

Hamazazpi metro luze
bost metro zabal
eta
blup, blup, blup
hiru izurdeok arrantzatzeko
zerua harrapatu dute sare pelagikoan
amets goxoen antxoekin
fereken bisiguekin
musuen izkirekin
arnasaren planktonarekin
dozena erdi marrazo ezezagunekin
askatasunaren balearekin
blup, blup, blup
gure irrien
irrintzien
eta oihuen burbuilek
egiten dute soilik
euri bidetik «Gora!»
Akabo kapitainaren
madarikazioen artean
blup, blup, blup.



**Maritxu Uzkudun Etxenagusia**
1961
Errezil

1991. urtean atxilotu zuten.



C.P. Albolote
Ctra. Comarcal 220, km. 6
Apdo. 2062
18.220 Albolote
(Granada)

## Maitasuna

Xahututako indarrak, gordetako desioak, haizeak eramandako laztanak,
denborari ostutako musuak, elkarrekin konpartitutako ordu eztiak,
udaberriak eragindako fantasiak, gauak ekarritako ametsak,
sasiarteko begiradak…
Zer ondare duen maitasunak, zenbat zirrikitu hain horma sendoak
zeharkatzeko,
zenbat hegal horrenbeste distantzia gainditzeko eta zenbat indar
denboran zehar
bizitzeko.

## Barneko paisaiak

Munduko miseria guztiekin ere
paisaia zoragarri ugariren metaforak ditugu gurekin
eguneroko irribarrea eragiten digutenak.
Bihotzak maite dituen imajinak
betiko gordetzen ditu
soilik bistaz ikusitakoak
galdu egiten dira.

## Denbora

Agian aspaldi izan zen baina denboraren dimentsioa aldatu zenetik atzo da betiko,
eta hala ere
denborak garamatza abiada bizian errealitate gogorrena den gaur luze
honen gazi-gozoetan trumilka
denborak
egiten du errealitaterik bortitzena amaigabe
eta erloju ziztrin batek
neurtzen ditu iluntasunari ostutako argi izpirik eztienak.

## Adiskidetasuna

Luzea bezain malgua,
sendoa bezain zintzoa
ederra bezain aberatsa
eta
egoera eta distantzia guztien gainetik
lotzen gaituena da
adiskidetasunaren lokarria.

## Heriotza

EZ DA LOZORROA
EZ DA AGURRA
GERO ARTE BAINO

Isil-isilik joan zaigu agur esan gabe
hodeiertzaren muga lasaitasunez igaroaz
han dituen oroitzapenen magalean murgiltzeko.
Biluz dezagun hitzen berotasunez
eta jantzi errautsez
hegal dadin haizez.
Jarraituko baitu gure bihotzak ferekatzen
saminduak ditugunean
eta gure gogo ezpainetan haren irribarrea
beti bezain alai eta ezti izanen da
bizitzaren gogortasunaren aurrean ere
bai baitzekien zoriontsu izaten.

## Urtebetetzea

Esaguzu
bizitzaren gazi-gozoak zenbat orban egin dituen zure bihotzean
zure aurpegiko marratxoek zer marrazten duten
zenbat sekretu gordetzen dituen zure isiltasunak
zer dakien haizeak zure maitasunaz
nork gordetzen duen zure konplizitateen giltza
zer…
zerk…
Eta esango dizugu
zenbat urte bete dituzun gaur
zein aberats egin zaituzten bizitzaren esperientziek
zenbat betetzen gaituen zure konpainiak
zein atsegin dugun zure begiradaren distira
zenbat adierazten digun zure irribarreak
zenbat maite zaitugun.

*(Olerki hauetako batzuk pertsona zehatzei bidaliak izan dira. Ez dizuet esan publikatzeko asmoa nuenik baina zuen onespena izango dudan uste osoz jaso ezazue nire agurrik beroena)*



**Xabier Aranburu Muguruza**
1962
Usurbil

1991. urtean preso hartu zuten.



Prisión de Herrera de la Mancha
Apdo. 77
13.200 Manzanares
(Ciudad Real)

## Itxaropenaren lora

Egunerokotasun biluzia ahalik eta dotoreen janzten
ilunpearen mantutik argi-izpiak ikusten
ziega itogarriko zirrikituetatik arnasa hartzen
mota askotako zigorren garratza eztitzen
uholdeka datozen bidegabekeriei tinko eusten
gauza txikiak eginez zorion tantak sortzen
gogo eroria pitinka-pitinka altxatzen
tristuraren gandua ene begietatik desegiten
isiltasunari begietara begiratzen
eguna gauaren atzaparretara trostan pasatzen
ilbeteko gau izartsuaz gozatzen
egunsentiarekin amesten…
laguntzen dit
txarrantxaz inguraturiko patioan
urtarotik urtarora sortzen den
itxaropenaren lorak.

## Urtebetetzea

Udaberriaren zeru sabaian
pilatutako hodei ekaiztsuen itsasoan
sorginkeriazko eta magiazko
hitzak doaz nabigatzen
hodeiertzean ikuskatzen diren
bi foku urdinek gidaturik.
Oroimenaren ubera atzean utzita
branka emanez jarraitzen dute
zure begi urdinen porturantz.
Bertaratutakoan kondentsatuko
diren ziurtasunarekin
hitza ihintza bilakatuko da
zure bihotzeko lorategian
ernatu den lorea
"zorion" tantez blaitzeko.

## Maitasun zina

Hamaikagarren urteurrenian
guk biok eraikitako paradisuan
pasioaren zuhaizka
landatu genuen
maitasunez goldatutako lurretan.
Txora-txora eginik zintudala
esanaz bat, ni nintzela
zure bizitzako mutila
aitortu zenidan
bihotza tximeleten antzo
dantza ezin ederragoan
zebilkizularik.
Hilabete batzuk aski izan ziren, ordea
urruntasunaren atzaparrak
zure maitasun zina
ene bihotzetik nola
erauzten zuen sentitzeko.
Minaren orroak zeruertza jo zuen,
zauriaren zulo ikaragarritik
maitasuna odolusten hasi zitzaidan
parrastaz, parrasta
desamodioaren itsasoraino,
non tristuraren agoniak
itotzeko zorian eduki ninduen
eternitate batean.

## Egunsentiak

Egunsentiak udazkena
ekarri dit begietara
bihotzetik hasita
biluzten joan nadin.
Espetxe inguruko galsoroen
usain eztia ere badakarkit,
sudur mizpiretatik irentsiaz
mozkor nadin.
Udazkenaren gorputz
lerden koloretsuan
jolasean aritzeko,
zilipurdikatzeko,
eskuekin ukitzeko…
plazera ere eman dit
egunsentiak
lau pareten atzaparrek
besarkaturiko infernuan
bizi naizela ahazteko.

## Kursk-eko tragedia

1.
Errusiako buruen
eskutik ezin hobeto
jasotako agindua
abian da dagoeneko
"Kursk" itsaspekoan goaz
tripulazioa lepo
ehun da hamasei marinel
eta bi komandante peto
inork sumatu ez gaitzan
jaitsi gara ehun bat metro
Barents-eko itsasoaren
sakonera, bekoz beko
Artikoko ur hotzetan
mugak zorrozki zaintzeko
operazio isilaren
arriskuaren menpeko.

2.
Itsas armadak "altxorra"
dela esan arren setati
urpekuntzi nuklearra
zaharkitu da galanki
bi ahoko ezpata bat
bihurtu dela badaki
itsasoaren moduan
gaitzake eta ebaki
burdinazko sabelean
gure eguneroko jaki
dira hamaika konponketa
beste hainbeste adabaki
baldintza eskas hauetan
aurkitzen gera kezkati
egunen baten ez ote
zaigun egingo bi zati.

3.
Larrialdiko sirenak
ohetik gaitu atara
di-da batean joateko
norbere postuetara
dozena bat marinelek
osatutako brigada
korrika eta muturka
abiatu da brankara
torpedo batzuk ditzaten
lehenbailen errepara
isuri handia dute
arriskugarria jada
oinetatik bururaino
sarturik zaigu ikara
bat-batean entzun baita
izugarrizko danbada.

4.
Hankaz gora gu boteaz
eztanda izan da galanta
gure begien bistatik
desagerraraziz branka
larritasunez beterik
batzuk egin dugu hanka
kideak lurrean utziz
zauriturikan hatsanka
urpekaria hondora
doa kirrinki-karranka
txopara ihesi goaz
uharrak ez gaitzan zanpa
ederki dakigun arren
dela arratoien tranpa
soilik hori da geratzen
zaigun itxaropen tanta.

5.
Urpekoaren txopako
aire burbuila batean
gaude hamabi marinel
komandantea tartean
estuki harrapaturik
itomenaren atean
gure hauspoek pitinka
dena irentsi artean
horra nolatan erori
garen kalamitatean
beharko dugu aurkitu
indarra borondatean
auskalo zenbat marinel
hil ote den bat-batean
gu soilik gera gintezke
dramaren azken katean.

6.
Berrehun metro sakoneran
itsasoaren eskutan
lehen egitekoa ez
dugu pentsatu hirutan
"sos" deika aritu gara
ez dakit zenbat ordutan
itsas gainekoek hartu
ote dute hau kontutan?
Premia gorriagorik
ez dugu sekula ukan
horrexegatik indarrak
xahutzen gabiltza barautan
lendabiziko unetik
erabakita geneukan
jo eta ke ibiltzea
heriotzakin burrukan.

7.
Urpekariaren txopan
gaudela astebete da
inongo mezurik jaso
gabe gugan sortuz zera…
barneraturik geneukan
esperantzaren gainbera
etsipenarekin jantziz
bakoitzaren izaera.
Aurrez aurre dakusagu
gure buruen galera
ahuldaderik gordinenak
errazki gaitu menpera
arnasa hartu ezinik
izerdi hotza sobera
bizitza ahitzen ari zaigu
kandela baten antzera.

8.
Heriotzara poliki
garamatzan zorigaitzak
dakarzkigu gorabera
itzeleko une hitsak.
Burutik kendu ezinik
familiaren oroitzak
batzuk hasi gera idazten
hil ondoko eskutitzak
halaxe agintzen digu
maitasunaren egoitzak
paperean amultsuki
biluzik jarriaz hitzak
gureek jakin dezaten
sentimenduen ihintzak
zoriontasunez blaitu
ditula gure bizitzak.

**Doinua:** Habanera.
*(Bertso sorta honek 2007ko Santixabel Bertso Lehiaketako Lehenengo saria irabazi zuen)*

## Hondakinen hilobian

1.
Gurasoekin pisuan
deskantsatzen nagoela
burrunba izugarriak
osorik hartu du gela
bizi-senak antzemanik
gauza onikan ez dela
eskerrak ohe azpira
bizkorki sartu naizela
istant batean etorri
da lurrikara itzela
errealitatearen
aurpegi ilun krudela
aurrean duen guztia
gogoz irensten duela
arrain handiak txikia
irensten duen bezela.

2.
Gaizto amorratua da
tokatu zaidan adurra
lurrikarak didalako
bizirikan eman lurra
ezin zitekeen izan
nahita ere hain makurra
erraietara sartuta
utzi dit eta beldurra
aldarteari eustea
ezta izango samurra
buruak ere egiten
dakilako iruzurra
oraingoz urratzen nabil
ahal bestean zintzurra
norbaitzuk entzun dezaten
nire intziri laburra.

3.
Hormigoizko zerraldoak
harrapaturik estuki
biziki sentitzen dudan
presioa ezta guti
bere horretan egin behar
kaka ta pixa gartsuki
klaustrofobiaren sena
ez dabilkit ez urruti
ilunperik beltzenean
nagolarik hain justuki
bihotzean agertu zait
angustia supituki
denbora askorako ezin
oxigenoa eduki
salbamendu-taldekoek
izan bezate erruki.

4.
Zerbait entzun ote dudan
eginagatikan duda
pitzaduraren batetik
etorri da arrangura
gurasoena izatea
bihotzez nahi nuke gura
semea ere bizirik
dagola daiten kontura
ilusioak puzturik
zoratu baten modura
deika aritu natzaie
infernutik infernura
arrapostuaren faltan
isiltasuna heldu da
lotsagabeki ekarriaz
bihotzeraino tristura.

5.
Gurasoen kinkik ezak
hondamendiaren plazan
korapilaturik nauka
etsipenaren matazan
gogoa hondoraturik
ezin dut gehiago jasan
hondakinen hilobian
zapalduta nola natzan
lurrikara-erreplikek
dena jartzen dute dantzan
nire gorputz makaldua
lehertzeko esperantzan
dardara baten dardarak
behin da berriro erasan
desiratzera iritsi naiz
behingoz akabatu nazan.

6.
Oinazearen tenpluan
jadanik nahiko elbarri
gorputza minberatuta
goserik eta egarri
hautsa arnasteak dizkit
itolarriak ekarri
indar pizarrak urritu
dirade ikaragarri
guztiak heriotzara
narama buru-belarri
durduzaduraren menpe
lozorroan sartuz sarri
amesgaizto honetatik
nahiko nuke iratzarri
azken hatsa eman ez eman
nagoenez oso larri.

7.
Denbora puska batean
egon naiz erdi-hilotza
sentituz eldarnioen
benetako esklabotza
sufrikarioa ez da
izan kalbario motza
hezurren muinetaraino
barneratu baitzait hotza
joan da orain arteko
isiltasun txit zorrotza
nonahitik dator zarata
edonondik harrabotsa
taupadak azkartu zaizkit
pozarren jarriz bihotza
izan litekeelako
itxaropenaren hotsa.

8.
Hormigoi pusken zatiak
tentuz kenduaz albora
erreskate lan talde bat
iritsi da nire ondora
garbi entzun diedalarik
"Bizirikan egongo da"
argi-printza bat sartu da
aurkitzen naizen zulora
bizitzaren seinalea
dakarkidala altzora
zeru oso bat zabaldu
da nire aurpegi osora
denbora labur batean
atera naute kanpora
sueroa ipinita
bizitza dakidan lora.

**Doinua:** Habanera.
*(Bertso sorta honek aurtengo Santixabel Bertso Lehiaketako hirugarren saria irabazi du)*

## Desioak

Bertsoa zer da ez bada
ez hitzik ta ez erranik
zer maite ta zer desira
ez badago aipatzerik
sentitzen dugun guztia
errateko den haririk
bagabiltza goiz eta gau
galdezka aurki ezinik
laztanak goiz ta gauero
nahi nituzke nik jantzirik
gogor naiz barne nahiari
zutik ta tinko eutsirik
sentimenduen ortzian
lurra topatu nahirik
maitale bat dut nik gura
ez dut eskatzen besterik.

## Maitasun hotza

*Badoa eta joan da. maitasun hotzaz babestuko duen jantziak utzita. Kalean hotz bada jantziko du arropa, etxean hotz bada piztuko du su elektrikoa eta hala hainbat eta hainbatetan goxatuko da. Baina…*

Beroan ere hotza da
maitasunikan ezean
ezta ere berorikan
laztanik ez izatean
maitasuna nik badaukat
nahigabearen atzean
sentimenduak ur jauzi
geldi ezin bihurtzean
zuhaitzek zainen bidez
lurrarekin topatzean
edo ta galdurik denak
bide ona bilatzean
laztanek osatzen duten
goxoa nabaritzean
eskua muxu bat eta
hitz leunen magalean.

